**Eskerrik asko**

*Julio Aranguena, Olatz Etxebarria, Amaia Sarrionandia, Jagoba Terrones, Mikel Soto, Edorta Jimenez, Garazi Arrula eta modu batean edo bestean lan hau ontzen lagundu didaten guztiei, beren aholku, zuzenketa eta bultzadagatik; baita, zelan ez, Ataramiñeko lagunei, nirekiko jarreragatik eta, batez ere, euskal preso politikoen ahotsa harresiaz honaindira ekartzeagatik.*

*Ez daukat ahazteko Xabier Izaga, azken urteetan zapatuero nik astean zehar egindako lana taxutzen laguntzeagatik (eta bere ordenagailua ondo berotu arte nire zerbitzuko ipintzeagatik); baita liburu honen gainean idatzi dituen hitzengatik ere. Berdin Joseba Sarrionandia ere, bere aholkuengatik eta sarrera hitzengatik. Eta Unai Iturriaga, nire hitzak modu ederrean irudikatzeagatik.*

# GATZAREN HARIA

Euskarazko hitz bat erakutsi zidan Gatzak:

–*Koiu!*

–*Zer dok koiu?*

Koiu!, Gatzak Arratiar jatorrikoa zuen familia eta koiu esaten zuen, hartu esan beharrean.

Puerto de Santa Mariako zigor zeldetan, preso komunek *El Palomar* deitzen zuten goialde hartan, behin baino gehiagotan suertatu ginen bata bestearen alboan.

Teknika bat zegoen zigor zeldetan gauzak leihorik leiho pasatzeko. Hari bat jaurtitzen zen, hariaren puntan pisuren bat, abisatuak besoa ahalik eta kanporen atera behar zuen, pisua besoaren gainetik pasatzean hariari heltzeko. Behin haria konpartituta, edozer pasa zitekeen: esne botila, liburua, ogi zatia, playboy, edo sagar bat...

Batzuek hari hauskorrak erabiltzen zituzten eta, haria apurtuz gero, zena zelako gauza erortzen zen lurrean itzelezko zarata egiteko. Gatzaren haria lodia izaten zen eta ez zen apurtzen.

Mantarena, akorduak okerrik esaten ez badit, Carabanchelgo mutinaren ondoren izan zen. Goizean goiz, Puerto de Santa Mariara trasladoa abisatu zutenean hasi zen jaikialdia: galeriako ateak itxi, barrikadak eraiki, sarrerako zaborrontziei sua eman... Laster ilundu zen dena, eta han ibili ginen ito beharrean luzaroan. Azkenean, polizia tropa bereziak sartu ziren...

Puerto de Santa Mariarakoak, esposaturik eta keaz belz-belzturik, kolpe-bidea egiten zigutela eraman gintuzten trasladoaren furgoietara. Maletarik gabe, ezer gabe heldu ginen Puertora, eta zuzenean sartu gintuzten zigor zeldetara. Leihotik deitu eta, Gatza nuen albokoa, ezkerraldean. Hiru, lau, bost, egunak emango genituen larrua garbitzen eta kedarra birikietatik atera ezinik eztulka.

Halako batean, Gatzak koiu esan, nik besoa atera eta, hariari lotuta, Leon Tolstoi-ren *Resurrección* eleberria pasatu zidan. Nobela lodi bat.

–*Nundik atara dok hau?*

–*Alboko zeldara etorri dan bati eskatuta, liburua hobeto aprobetxatuko dok hik*.

Komunerako erabiltzen zituela orriak bestaldeko preso komun batek, bestaldeko bizilagunak. Liburuak azkenengo berrogei edo berrogeita hamar orrialdeak falta zituen, hain zuzen. Liburuaren hasierako orriak oso ondo zeuden beste mundu eta beste sasoi batera sartzeko…

Jauntxo gazte bat, Dmitri Ivanovitx Nejliudov, bere sorlekura itzuli da, Nizhni Nóvgorod izeneko herritik hurbil. Bizimodu lasaia du lagun onekin, eta laster ezkondu behar du familia noble bateko alabarekin. Militarra da eta goi mailako etorkizuna aurreikusiko lioke edozeinek. Baina, Armadara itzuli orduko, epaile moduan konbokatu dute tribunal bat osatzeko. Ustekabean, bere lehenengo neska-laguna da auzipetua, Ekaterina Maslova. Nejliudov jauntxoak, maiteminduetara jolastu ondoren, engainatu eta abandonatu egin zuen neskamea. Neska prostitutara jausi zen. Orain, Nejliudoven tribunalak neska hori gogor kondenatzean, hasiko da jauntxo ondoeza...

Bi edo hiru bider irakurri nuen eleberria, harik eta falta ziren orrialdeetaraino.

Gatzak ez zuen leitzen, aspertu egingo zen eta, lantzean behin, koiuka hasten zen:

–*Nundik atera dok laranja hau?*

–*Hor, beste komun bat etorri dok eta, badakik...*

Hariak komunetik behera botatzen ziren, ustekabeko katxeoren batean harrapatuak ez izateko.

Baina, handik laster koiu entzuten zen berriro. Gatzaren haria hartzen nuen, eta hara, esnea, plastikozko ur-botila txiki batean.

–*Nundik atara dok hau?*

–*Badakik*.

Gatzaren koiu bakoitza sorpresa baten anuntzioa izaten zen.

Baina, gauerdi batean, katxeo jenerala heldu zen ustekabean. Zarata entzun zen pasiloetan, jaiki orduko ateak ireki zizkiguten. Zeldetatik korridorera atera, hormari begira jarri gintuzten, eskuak horman gora altxatuta, eta funtzionarioak gure zeldak errebisatzera sartu ziren. Hormaren kontra, Gatza eskuinaldean nuen pasiloan, harantzago komun bat, gero beste euskaldun bat...

Atzean, funtzionarioak ziegak errekistatzen, gauzak bota eta apurtu ere egiten zituzten entzuten zen zaratagatik. Bat-batean, funtzionarioa irten Gatzaren zeldatik geu bion artean paratzeko trapu bat erakusten.

*–¿Y ehto?*

Toalla bat ematen zuen. Toalla txiki bat ematen zuen, baina apur bat luzea. Kartzelako manten kolorekoa. Gatzaren manta zen, baina goitik behera ehuneko 80-edo hariz gabetua.

*–¿Que eh ehto?*

Bigarren astean edo, moduluetatik arropa batzuk heldu ziren. Artean, kamiseta bat urdin iluna, Harvard unibertsitatekoa, Nenerena.

Irakurri nuen *Resurrección* laugarrengoz, eta bosgarrengoz, laurehun eta ez auskalo zenbatgarren orrialdean bat-batean eteten zen arte... Nejliudov Katiusharen ondoezaren eragilea sentitzen da, haren alde zer egin ez dakiela, baina bien arteko harreman sentimentalaz baino gehiago da aberatsez, laborariez, legeen injustiziez, kartzelazainez…

Ez dakit hamabost egunetara, edo bi hamabost egunetara atera gintuzten zigor zeldetatik eta jaitsi ginen modulura. Jaistean ikusi nuen lehenengoa Xabier Izaga izan zen.

*–Eskerrik asko hire kamisetagatik.*

*–Heurea duk* –erantzun zidan Nenek bere urduritasun eskuzabal irribarretsuarekin.

Poz handia ematen dit hemen prologoan berriro topo egitea Gatza idazlearekin eta Xabi editorearekin, pozik berriro elkartzeko suertea izan dugulako, kartzelatik urrun; espero dugu. Barruan geratu direnak ere libre aterako direla espero dugun artean.

**Joseba Sarrionandia Uribelarrea**

Kontatuko dudan hau egiazko gertaera da. Horrelaxe gertatu zitzaidan Granadako espetxean, 1993ko martxoaren 6an. Guztia benetakoa da, eta haren egiazkotasuna frogatu egin liteke. Ilustrazio moduan erabilitako argazkiak ere benetakoak dira, eta hango gertaerekin lotuak, baita sendagileen txostena ere. Gauza guztien gainetik, nik kartzelan izan ditudan sentsazioak aurkituko ditu irakurleak. Horraino heltzen banaiz, bete dut idazki honen helburua.

"Zaldi berdea" izena alabari entzun nion lehenbiziko aldiz. Kartzela honetara bizikidetzako komunikazioa egitera datorrenean, berak eta biok egiten dugun jolas asmatua da. Beti esaten dit: "Aita, zaldi berdean jolastuko gara?". Oso atsegin du koltxa berde baten gainean eseri eta nik narras eroatea. Horren gainean alabak bere zorionaren irribarrea adierazten dit.

Hala berean, adierazi gura dut zalantza egiten dudala zenbait urtemugaren gainean, kasualitatearen ondorio diren edo hala gertatu behar zuten. Goiztiri 2000ko martxoaren 6an jaio zen, nire ihes saioaren egunetik zazpi urte igarota, hain justu; beraz, niretzat zorioneko eguna da.

Nire guraso Santos Sagardui Bilbao eta Begoña Moja Mujikari, Pedro eta Josu anaiei, eta gure alaba Goiztiriri eta neska-lagun Concha Luna Aragoni eskaintzen dizkiet oroitzapen hauek, baita batera eta bestera errepresio okerren astinduak jasaten ari diren beste senitarteko denei ere. Era osoan eskertzen ditugu haien ahaleginak. Agur bat bidali nahi diet lagun anonimoei, kartzelaraino etortzen direnei eta etorri ezin diren baina hor jarraitzen dutela badakigunei, hala nola preso lagunei, deportatuei edo ihesean dabiltzanei. Eurei guztiei, nire eskerrik beroenak.

**Jaengo presondegiko zigor ziegan**
2010eko Gabonak

# I

Furgoi zelularra espetxe kanpoko ate ondoan gelditu zen. Ez ginen barruraino sartu, kalera jaitsi ginen. Granadako lurra zapaldu nuen lehen aldia zen. Hala, plaza edo antzeko zerbait ikusi nuen. Kokota behera makurtuta neukan eta lantzean behin gorantz egiten nuen, disimuluz, baina ez oso gora, guardia zibilen zaplastakoa saihesteko, nahiz eta halakoetan azala guztiz tentsioan eroaten duzun. Pena izan dut beti orduan alboetara larregi ez begiratzeagatik. Zergatik ezin imajinaren erregalua zein hain zaila den kaleko irudia osotasunean hartu eta inolako pantaila hurrean izan barik? Besoetatik helduta ninduten eta oinez gindoazen espaloirantz, espetxeko burdinazko atetik gero eta hurbilago. Bertan, ezkerretara, goiko aldean jagoteko garita zeukaten guardia zibilek eta eurek elkarri agur eginda, labirintorantz gindoazen.

Kartzela guztiak dira labirintoa. Nondik sartzen zaren ikusten duzu, baina konturatu orduko, hamaika burdinazko atetzar, eskuz zabaltzekoak –eta batez ere zarratzekoak– zein automatikoak, hamaika korridore zeharkatu dituzu eta hortik ateratzea ezinezkoa dela pentsatzen duzu. Sarrera baino ez duen leku batean zaudela ematen du. Sartzeko eta ez irteteko labirintoa dira kartzelak. Buelta itzelak eman eta beti leku berean zaude.

Sarreraren egituraz ez nintzen zehatz ohartu, baina zer edo zer gogoratzen dut. Guk errezintoa esaten genion kartzelako eraikinen eta harresiaren arteko esparru horretara sartu eta aurrera segitu genuen. Erdigunera-edo heldu ginenean, ezkerretara jo behar genuen eta gero, eskailera gutxi batzuk igota, izozkailu handiek izaten duten moduko ate lodi batetik pasatu ginen. Kartzeleroak, beren kristal blindatuko kabinan, botoi baten bidez zabaldu zuen atetzar hura. Nire aurretik *Rubixo* zihoan, Juan Karlos Lezertua Urrutibeaskoa. Ate horretatik pa-

satu eta, eskumara eginda gero artez, trantsitoko zelularrean utzi gintuzten. Atoan hurbildu nintzen leihora, nahiz eta berehala ikusi nuen zuloz betetako xafla batek estaltzen zuela. Zulorik zulo begira hasi nintzen ea kartzelako esparruaren sakonera sumatzen nuen, baina ezinezkoa zen, zulo haiek hain txikerrak izanda.

Espetxea nahiko zaharra zen. Jendez gainezka zegoen, leporaino. Lau modulu eta lau patio zeuzkan. Horretaz gain, emakumeentzako beste modulu bat ere bazegoen. Espetxe hormak eta harresiak adreilu gorrizkoak ziren.

Hainbeste kartzela ikusita, eta haien barruan hamarkada batetik gora emanda, lekuz aldatzen zaituztenean zentzumen guztiak zorroztu egiten zaizkizu, eta ingurua aztertzeko gaitasuna biderkatu. Inkontzienteki ere, dena kontrolatzeko joera etortzen zaizu, are gehiago buruan zer edo zer egosten badaukazu. Ez da inor baino azkarrago izatea, biziraupen kontua baizik.

1991ko ekainaren 29a zen. Ordurako, inguru berri eta ez hain berri asko aztertzeko eta berraztertzeko aukera eduki nuen. Ezin dut esan Iberiar Penintsula ezagutzen dudanik, baina bertako leku askotan egona naiz, Penintsulan eta irlaren batean ere bai. Denetara, 13 kartzelatan: Carabanchel, Soria, Puerto I, Herrera de la Mancha, Alcala-Meco, Basauri, Sevilla-II, Palma (Mallorca uhartea), Sevilla I, Granada, Puerto II, Jaen II eta Langraiz. Carabanchelgo espetxe ospitalean ere egon nintzen. Hori ere kartzela da; beraz, 13 barik, 14 dira ezagutu ditudan espetxeak hiru hamarkada pasatxoan. Bestalde, kartzela batetik besterako bidean askoz gehiago ezagutu ditut, haietan egun bakan batzuk eman ditudanak; esate baterako Sevillatik Granadara bidean gau bat eman genuen Jaengo espetxe zaharrean. Euskal Herrikoetan edo gertukoenetan ere, egia esan, egun gutxi eman nituen. Basaurikoan astebete eta Langraizkoan hiru bat aste. Gainerakoetan, batez ere urrunenetan, urte luzeak.

Espetxe politikaren helburua, oro har, Kolektiboa indargabetzea zen, eta hala da oraindik ere, higadura sortzea, epe labur baten. Helburu hori dela eta, politika-aldaketa ugari izan ziren, tresna guztiak, legez kanpokoak ere bai, bat etorrita: Polizia, epaileak, kartzeleroak... eta bestetik, kartzela urrun batean gehienak batzea edo Estatuko kartzeletan zehar sakabanatzea. Gaur egun ere, horrela segitzen dugu.

Kartzela batetik ateratzean, bereziki herritik urrun badago, bertako ingurugiro nazkagarria gorputzean itsatsita daukazula, hara sekula ez itzultzeko esperantza daukazu. Erraz zapuztuko den esperantza edo, hobeto esateko, txakur-ametsa. Horretaz pentsatzen dudanean, berehala datorkit gogora Puertoko espetxea.

1981eko uztailaren 22an heldu ginen Puerto Iera Carabancheldik ehunetik gora lagun. El Puerto de Santa Maria beti gorrira, Joseba Sarrionandiaren hitzetan. Hango presondegi zaharra itxita zegoen, gaur egun Puerto I dena eraiki berria zen eta hango lehenengo «maizterrak» izan ginen gu.

Gutxienez hamabost ordu eman genituen autobusetako kaioletan sartuta. Nork esango zuen Madriletik Puertorainokoa horrenbeste luza zitekeela. Ordu txikitan esnarazi gintuzten ETA militarreko kide gehienak, gauzak biltzeko eta behera jaisteko esanez. Hiruzpalau autobus zain geneuzkan kartzelako sarreran. Kamioi bat ere joan zen gure atzetik, gure fardelak eta bildu ahal izan genituen tresnak eramateko. Ez ziguten esan nora gindoazen, eta bidean aurrera joan ahala, zitezkeen helmugak ateratzen ziren gure solasetan, guardia zibilek isiltzeko agintzen ez zigutenean. Argi zegoen, edozelan ere, hegoalderantz gindoazela. Geldialdi batzuk egin genituen, gasolioz hornitzeko, pikoloek txiza egin edo mokadu bat jateko... Eguerdi partean

bazkaltzeko gelditu ginen, olibondo batean, guardia zibilak gerizpe batean eta gu uztaileko eguzki-galdatan, autobus barruan mortadela ogitarteko nazkagarri bat jaten. Ordubetetik gora eman genuen izerdi patsetan eta ito beharrean. Orduan konturatu ginen segizioan lagun gehiago genituela, gure gainean helikoptero bat bueltaka zebilela entzun eta gero joan-etorrian ikusi genuenean. Gaua zen gure helmuga zalantza barik zein zen jakin genuenerako, Puerto de Santa Mariako segurtasun handieneko kartzela berria gure aurrean agertu zenean.

Banan bana miatu ostean, zelda banatan sartu gintuzten. Kartzela berria zen, eta oraindik ezer garbitu gabe zegoen. Nabari zen dena arinegi eta baldar eginda zegoela. Hori bai, burdina sartzen ez zuten diru asko aurreztu. Mahai-aulkiak, oheak, leihoak; zeldetako ate bikoitza, barrualdean segurtasun tarte bat baitzegoen ate nagusiaren eta barruko ate barrotedunaren artean, *cangrejo* izenekoa; haren azpitik sartzen ziguten janaria. Zeldatik kanpo ere, burdina zen nagusi, korridore guztietako barrotedun ate ugarietan, eta jantokira, patiora, bisitetara, edonora joateko, ezin konta ahala atetzar zeharkatu behar zen.

Goizeko zortzietan sirena batek jotzen zuen. Belarriak estaltzeko moduko hotsa. Ordurako, baina, itzartuta egoten ginen, eltxoen hegaldiaren burrundarak eta batez ere haien gupida gabeko ziztadek loa galarazten ziguten eta. Eltxoak bizilagun izango genituen han izan ginen ia urte bi eta erdian, zeldan, patioan, nonahi. Dirudienez, kartzela hura hezegune edo padura baten gainean eraiki zuten. Berehala hasi ginen egunero espetxe gainetik igarotzen ziren hegazkin ugariak entzun eta ikusten, Estatu Batuen Rotako basea oso gertu genuen eta.

# II

Granadara iritsi berritan, kartzeleroek makilatuta, nerbio bat ikututa neukan gibel aldearen azpian. Hilabetean herrenka ibili nintzen. Ez geneukan aldatzeko arroparik eta aldean geneukanekin ibiltzen ginen. Nire ama bisitan etorri zenean, arropak ekarri zizkidan. Txundituta gelditu zen neukan itxura ikusita. Bisita ostean, denda batera joan eta bost bizar-aitzur eta hiru pastilla xaboi Heno de Pravia erosi zizkidan. Hori guztia eman zidaten arropa fardela sartu eta gero.

Granadako espetxea Euskal Herritik bederatziehun kilometrora dago, lekutan. Zentzu osoan arrotza nintzen han, desterraturik. Urrunduta, nire ingurutik sakabanatuta, eta espainolen artean ezin nuen nire hizkuntzan mintzatu.

Lehenengo egun haietako batean, kartzelero bat etorri zitzaidan Sevillako Auzitegiaren epai bat ekartzera. Epailearen ebazpen haren arabera, sei hilabete eta hamasei eguneko zigorra ezarri zidaten. Kartzeleroak esan zidan ea sinatuko nuen eman zidan papera. Nik ezetz erantzun nion; beraz, kopia bat eman zidan eta joan egin zen.

Kartzelero hura aspaldiko ezaguna nuen, Herrerako kartzelatik, hain zuzen. Batzuetan kartzela bat atzean uzten duzunean, bertako guztia ahazteko gogoz eta nazkatuta, uste duzu betiko utzi duzula, ez dituzula ez kartzela ez kartzelero horiek inoiz ikusiko, baina sarritan hainbat urteren ostean leku berera itzuli edo kartzelero berberak ikusi behar izateko sorpresa izaten genuen. Granadan topatu nuen hari *Morako* esaten genion. Indartsuaren trazak zeuzkan, gihartsua eta handia zen. Gainera, zoroa zen oso; ez zen atzera egiten zuten horietakoa, eta beldurra sortzen zuen presoen artean. Espetxeko matoia zen. Granadan, adibidez, erizaindegiko medikuek Morakori deitzen

zioten presoren batek tratamendua-edo hartu nahi ez zuenean; esate baterako, txertatu behar zutenean. Morakok berba egiten zuen tratamendua hartu nahi ez zuen presoarekin eta honelako mehatxuak esanez konbentzitzen zuen: *"Te voy a dar una hostia que te van a regalar un collar de oro, un hermoso ramo de flores y un ataúd"*.

Ohikoa zen, beraz, beste kartzela batera heldutakoan kartzelero ezagunen bat bertan topatzea; kartzela urteak pilatu ahala, are ohikoagoa. Gehienak okerrenetakoak, Puerton eta Herreran ezagututakoak. *Mezquino* saltsa guztietako perrexila zen, istilu guztietan parte hartzen zuen. Granadan baino lehen, Herrera de la Manchan egokitu zitzaidan berarekin; ematen zuen kartzelan bertan bizi zela, barruan noiznahi eta nonahi ikusten genuelako. Presoak biluzaraztea ez zuen nahikoa izaten, kokoriko jarri eta flexio mordo bat eginarazi arte ez zuen amore ematen. Horrelakoetan, gozatu egiten zuen. Mintzategietan ere, hantxe egoten zen senideak zeuden aldean, eta senideetako batek begiratzen bazion, berak burua gorantz mugitzen zuen, ea zer gertatzen zitzaion adieraziz bezala. Behin, bisita batean, amari keinu harroxkoa egin zion. Momentuan, bisita ez galtzeko eta batez ere ama lasai joan zedin eta etxekoei kezka gehiagorik ez ematearren, isildu egin nintzen, baina gorde egin nuen keinu zantar haren detailea. Gero, moduluan haren bila ibili nintzen azalpenak eskatu eta bere lekuan ipintzeko, neure ernegua berari pasatzeko asmoz, alegia. Egun hartan eta hurrengoetan ere ez nuen topatu. Hobe berarentzat, baita niretzat ere.

*Conan* ere bazen aspaldiko ezagun horietakoa. Urte asko lehenago Puerto Iean ezagutua, Puerto IIan topatu nuen, eta Jaenen Herrerako beste elementu eder horietako bat, *Morritos*. Zenbat eta gaizto eta eskasagoak izan, orduan eta errazago

zuten karguan gora egiteko; izan ere, Morritos Jaenen zuzendari dago gaur egun.

Gure alaba jaio zenean, Langraizera eraman ninduten hura ikustera. Bidean, egun batzuk eman nituen Valladolideko kartzelan, trantsitoko moduluan. Han ere agertu zen aspaldiko kartzelero ezagun bat, *San Jakobo*, eta ikusi ninduenean, esan zidan: «Baina oraindik kartzelan zaude?». Ordurako 20 urte neramatzan espetxean, eta erantzun nion: «Berehala noa kalera, erredentzioak ematen dizkidatenean», oraindik aurretik urte mordo bat banuela imajinatzen nuen arren. Eta ez nengoen oker, beste hamaika gehiago egingo nituen eta.

Ugari dira kartzelero eskuindarrak, horien artean eskuin muturrekoak nagusi, eta euren jokaera ideologia horren araberakoa izaten da: inposizio itsua, militarismoa, harrokeriak gidatzen ditu edozein arazoren aurrean. Arrazoia ezezaguna dute, eta haien aldetik argudiaketa espero izatea txakur-ametsa da. Jende arriskutsua da. Baina arriskutsuenak konplexuz betetakoak eta motzak dira; lehenengoak, ez direnaren itxura egin behar dutelako, eta bigarrenak, ekintza erreflexuak aginduta jokatzen dutelako. Puerto I kartzelan, laurogeiko hamarkadaren hasieran, bazegoen bi mota horien arteko kartzelero bat: *Lepomotz* esaten geniona. Ez dut uste goitizen horren zergatiaren azalpen handirik behar denik. Berehala konturatu ginen burutik ere motz samarra zela. Berarekiko edozein harreman arriskugarria zen edozein egoeratan, hitzez egin ezin zuena zigorrez betetzen zuen; gainera, zigorrak justifikatzeko, gertatutakoa asmatuz.

# III

Granadako espetxera heldu nintzenean ezer gutxi nekien lur haietaz. Liburuetan irakurritako zerbait, hala nola umetan Iberiar Penintsulako geografia ikasi genueneko Sierra Nevada, Genil ibaia, Espainiaren Historian musulmanei "birkonkistatutako" azken erresuma bertan 800 urte egon ostean edo Alhambra ospetsua...

Edonola ere, Granadan urte bi egon nintzen arren, handik atera nintzenean ez nekien askoz gehiago. Kartzelatik ikusten nuena; esate baterako, hurbilean, futbol zelaia; urrunean, berriz, Sierra Nevada mendilerroa. Oso leku ezaguna da, halaber, Motrilgo hondartza. Nik ez dut sekula ikusi, baina entzun bai, sarritan, Afrikatik zetozen immigranteen patera asko hara heltzen ziren-eta. Heltzea lortzen zutenak, jakina. Han nengoela sarritan entzun nituen Almuñecar, Salobreña, Carchuna eta beste leku izen asko.

Futbol zelaiaren berri aspaldi luzetik nuen, egia esateko haren izena, Los Cármenes, artean ez banekien ere. Izan ere, banekien 1975eko iraileko fusilamenduen ostean, bi egun geroago, Athleticek Granadaren kontra jokatu zuela zelai hartan. Ni ez naiz oso futbolzalea, baina partidu hark oihartzun handia izan zuen, Euskal Herrian behintzat, Athleticeko jokalariek besoko beltza atera zutelako zelaira, ETAko eta FRAPeko militanteen fusilamenduak salatzeko. Garai hartan, frankismoaren bukaeran, ez zen ohikoa, ezta erraza ere, horrelako protestak egitea. Racing de Santander taldeko Aitor Agirre bizkaitarrak eta Sergio Manzanera valentziarrak ere besoko beltza zeramatela jokatu zuten partidua, Santanderren. 100.000 pezetako isuna ordaindu behar izan zuten biek.

Garai hartako errepresio politikoa ikaragarria zen. Urtea amaitu baino lehen hil zen diktadorea, fusilamentuetatik hilabete bira. Baina errepresio politikoak bere horretan jarraitu zuen. Politikoa eta soziala, trantsizio eredugarri baten kontu bat saldu bazuten ere, erosi nahi zuenarentzat, jakina. Laurogeiko hamarkada hasieran ezagutu genituen Carabanchelen homosexual zigortuak. Lege homofoboak aldatu zituzten, baina modu batean edo bestean haien aurkako jazarpenak iraun zuen. Gaur egun ere bistan dago gizartean zein errotuta dagoen pentsaera homofoboa, eta jende askok oraindik ezkutatu egiten du bere orientazio sexuala, beldurrez edo lotsaz.

Gogoan dut Sevilla IIan gertatu zitzaidan pasadizo bat, kartzelero gaizto baten kontura. 1991. urtea zen. Ni nengoen modulura *Olga* izeneko trabestia sartu zuten. Oso pertsona atsegina eta zintzoa zen. Orduan, 19 urte zeuzkan. Olgak hango baten baten zakil potolo eta handia ikusten zuenean, *"está bien despachau"* esaten zuen. Berak aitortu zidan aipatutako kartzelero kaskar hura homosexuala zela, eta bera ibiltzen zen tokietan zehar ibiltzen zela kartzeleroa ere. Sasoi hartan ia egunero etortzen ziren miaketa egitera, Olgaren gorputz berezia ikusteko, tititxoak zeuzkan... Kartzelero horien artean, *El Chincheta* eta *Tachín* etortzen ziren, beren gorputzak zirela-eta konplexuz beteta zeudenak. Horretarako beste sarbide bat erabiltzen zuten, presoek ez ikusteko kartzeleroek zer egiten zuten. Presook Olga babestea erabaki genuen, eta salaketa jarri genuen kartzelako arduradunaren aurrean. Salaketaren eraginez-edo, Olga beste modulu batera urrundu zuten. Eta egun batean, esandako kartzelero hura, miaketa egitera etorri zenean, hanketako ileetatik tiratzen hasi zitzaidan, latexko eskularruak jantzita. Orduan, nik hauxe esan nion: *"Ya se nota que es usted homosexual"*. Berak *"Por desgracia, sí"* erantzun zidan. Eta nik

gehitu nion: *"Es más desgracia ser carcelero"*. Harrezkero, nirekiko jarrera aldatu zuen, eta errespetu gehiagorekin tratatu ninduen; izan ere, nik berari buruzko informazio hori izateak guztiz harritu zuen.

## IV

Zeldari lehenengo begiratua eginda, Rubixorekin berba egiten hasi nintzen, bera ondoko gelan zegoen eta; ea ezer ikusten zuen galdetu nion, baina nik bezala ez zuela ezer ikusten erantzun zidan. Telefono kablea alde batetik bestera igarotzen zela baino ez genuen sumatu. Halako batean, guardia zibilak bertatik pasatu ziren, euren txanda aldaketa egiteko, eta gu euskaraz ari ginela entzutean, irainka hasi zitzaizkigun.

Beti bezala gure ama izaten zuten gogoan, baita familia eta inguru osoa ere. Ondo gogoan dut harako *cagüen vuestros muertos* ere. Denboraren joanean, ohiturak larrua ontzen dizu eta irainek arretarik ere ez dizute ematen, baina batzuetan barre egiteko gogoa bai. Lagun batek kontatu zidanez, Tenerifetik penintsulara ekarri zutenean, PPk 1999an egin zuen harako presoen hurbilketa hartan, hango kartzelatik ateratzean "Se va el caimán" abestu zioten kartzeleroek.

Inguru espainiar batean, euskara entzun eta atoan doaz irainak. Edo gutxienez mespretxua. Hala bizi izan dugu guk beti, batez ere kartzelan. Bertan euskarak zure jatorria eta militantzia «salatzen» ditu, gure hizkuntzan egiten duena etsaiarekin identifikatzen dute; hartara, guardia zibilak eta kartzeleroak su bero batean ipintzen dira euskara edo euskara dela uste dutena entzutean, eta iraintzeko motibo bikoitza dute. Ulergarria da, beti zer harrapatuko zelatan dabilena, ehiztariak paradan bezala, eta hizkuntza «arraro» bat entzunda ezin ezer ulertuta, amorrua ematea. Zer egingo diogu, ba.

Pentsaezina da kartzelan edozein eskaera, kexa edo beste edozer euskaraz bideratzea, jakina, baina baita epaitegiarekiko harremanetan, Zaintza epailearekin zein epaiketetan ere,

nahiz eta euskara Euskal Herriko zenbait lurraldetan ofiziala izan. Espainian, ez. Bai, hala ei da, baina euskal lurralde horietan eragozpen ugari gainditu barik ere ez.

Bestela da gure artean. Gure kolektiboaren hizkuntza nagusi eta «ofiziala» euskara da. Lagun multzo handia geundenean; esate baterako, 70ko hamarkadaren amaieran Sorian, 81etik aurrera Puerton, ondoren Alcala Mecon eta Herreran, gure artean gehienbat euskaraz egiten genuen, eta batzarrak ere euskaraz egiten genituen. Baten batek ulertzen ez bazuen, alboko lagunak azalduko zion erdaraz. Baina luze gabe berak ere ulertuko zuen itzultzailearen laguntzarik gabe. Betiko euskaldunok ere elkarrekin berba eginez asko ikasi dugu Euskal Herriko hainbat hizkera entzunez. Esate baterako, musean ari ginela, giputzak «enbido» entzunda, «euki» esango zuen; bizkaitarrak, berriz, «gura». Hasieran ez genion elkarri ondo ulertzen, baina egunero ikasten genituen leku guztietako hitzak eta esamoldeak. Lagun askok ikasi dute euskara barruan. Talde handia zegoenean errazagoa zen ikastea, euskara talde ugari zegoelako, ikasmaila guztietakoak. Batzuetan leihotik leihora ere ematen genituen eskolak; esate baterako, txapeoetan, zeldetan itxita geundenean. Baina sakabanatzeaz gero ere eutsi diogu euskalduntze lanari «euskaltegi» barreiatuotan. Hori bai, zaila izaten da ikasturte bakoitzeko programa betetzea, etengabeko oztopoak direla-eta; alegia, kartzelaren erasoak eta gure erantzunak.

# V

Rubixo eta biok, hurrenez hurren, Sevilla II eta Sevilla I espetxeetatik heldu ginen Granadara, Sevilla I jomuga zuen ekintza baten ondoren. Trasladoan, furgoi berean gure beste lagun batzuk zihoazen, Andaluzia eta inguruetako beste kartzela batzuetan helmuga zutela, baina ezin ginen elkarrekin mintzatu, egoera oso "beroa" zelako eta, zainketa oso berezia zenez, gurekin zetozen guardia zibilak guri begia kendu barik zeuden, egurra banatzeko prest. Guardia zibilek *la gansa* izeneko makil sendoa zeukaten, gure aurka erabiltzeko pronto. Erakundearen ekintza hura Sevilla I espetxeko zuzendariaren aurka bideratuta zegoen, eta gau hartan bertan sakabanatu gintuzten Sevilla I eta Sevilla II espetxeetako euskal preso politiko guztiak Andaluzia eta Extremadurako kartzeletan zehar.

Ni, ustez, denbora gutxirako eroan ninduten Sevilla Iera, Sevilla II espetxean zazpi hilabete lehenago kartzelero batekin izandako liskar bat zela eta. Istilu haren ondorioz, Mallorcako kartzelara eroan ninduten, eta Sevillako istiluaren ondoren kartzeleroek egin zuten salaketagatik Sevillara eroan ninduten atzera, oraingoan Sevilla Iera. Esandako moduan, luze gabe irletara itzultzea espero nuenez, hainbat gauza bertan utzi nituen, baina Sevillako ekintzaren ostean Granadara eroan gintuztenez, Mallorcako lagunei han utzi nituen gauza guztiak bidaltzeko eskatu nien. Halako batean heldu ziren arropak, liburuak eta beste zenbait traste. Kartzelero batek ekarri zidan kirtendun poltsa handia; hobeto esanda, berarekin zetorren konfiantzako preso batek ekarri zidan. Kartzeleroak gauzak jaso nituela sinatzeko liburua eman eta esan zidan: *«¿qué tiene uhté aquí?* –zakuan zer zegoen jakingo ez balu bezala–*, ehto pesa máh que un coshino ahogao».*

Granadan, nik, pijamaren ordez, txandala, txanoa eta guzti erabiltzen nuen lo egiteko, espetxeko hainbat kristal apurtuta zeuden eta. Batzuek *Brigada* izeneko galerian lo egiten zuten. Han ez zegoen batere intimitaterako aukerarik, denak leku berean batera egoten baitziren. Edonola ere, zeldetan ere literak pilatu egiten zituzten. Lau litera zelda bakoitzean. Gauzak horrela, oso zaila zen ziegan preso bakar bat egotea. Geu ere egon ginen lagunen batekin hango ziegetan, baina binaka, hirunaka… baita kartzela barruan sakabanatuta ere, banaka-eta jarrita.

Otorduetan pare bat txandatan joaten ginen jantokira. Izugarrizko ilara egiten zen janaren bila joateko. Josebak "gauerdiko espresoa" esaten zion ilarari; izan ere, tren luze baten itxura zeukan. Batzuk, janaria batere erakargarria ez zenez, ogia eta okela zati bat hartuta, patiora joaten ziren. Janari eskasa ikusten nuenetan, Puerto I etortzen zitzaidan gogora, egia esateko eskasa kartzela denetan bada ere. Izan ere, Puertotik Herrerara, esate baterako, ez genuen hoberako aldaketa handirik igarri. Eskerrak etxetik jaki batzuk ekartzea uzten ziguten, urte gutxiren buruan hori ere galarazi ziguten arren. Puertotik Herrerarakoa aipatuta, gure borroka moduaren aldaketa ere aipa nezake, Puerton bertan egosten hasia zen borroka moldea, alegia.

1983ko abuztuan, artean Puerto Iean geundela, planto bat egin genuen eta zeldetan itxi gintuzten hainbat egunez. Zeldetatik atera baino lehen jakin genuen Euskal Herrian, batez ere Bizkaian eta Laudio inguruan, uholde ikaragarriak izan zirela. Sasoi hartan, Puertotik ateratzeko hainbat borroka egin ondoren, erregimen militarizatu hura iraultzeko proposamena atera zen eztabaidara. Horren aurrean, aurreko planteamendua zegoen, Euskal Herrira hurbiltzea, alegia. Hiru hilabete igaro baino lehenago amaituko zen eztabaida, Herrera Manchara eraman gintuztenean, hain zuzen.

Puerton amaitu zen, baina Herreran luze gabe piztuko zen berriro eztabaida hura. Handik gutxira Alcala Mecon zeuden burkideak ere Herrerara eraman zituzten eta eurek ere hasita zeukaten eztabaidak gurearekin bat egin zuen. Kartzelak zituen lau moduluetatik hiru bete genituen; beraz, ia 180 lagun egongo ginen. Eta Herrerako bizi baldintzak Puertokoen antzekoak zirenez, erregimen hura hankaz gora jartzeko ideiak indarra hartu zuen. Hartara, ezohiko protesta bat antolatzen hasi ginen: *txapeo* edo itxialdia eta erabateko desobedientzia.

# VI

Inoiz ez dut ikusi Granadako espetxe zaharreko gelen besteko altuera duenik inongo kartzelatan. Orientazio gisa, esan dezaket gelan lau ohatze kabitzen zirela bata bestearen gainean ipinita, eta oraindik bazegoen lekua sabairaino. Kartzela hura komentu izana zela entzun nuen. Izan ere, egitura halakoa zen. Barruko korridoreetako arkuek, zutabeek eta jabaloiek komentu batekoen antza handia zeukaten. Hirugarren eta gazteen moduluetako patioetan ere bi arkupe zeuden, guretzat aterpe izaten zirenak. Kartzela masifikatuta zegoen, eta bi txandatan bazkaltzen genuen; hartarako, arkupe haietan ilara luzea egiten genuen, «gauerdiko trena» hain zuzen, nor bere erretiluarekin. Kartzelako kupula ere baliteke komentu batena izatea. Inoiz entzun dut kupula haiek eraikin erlijiosoen adierazle zirenez, gerra garaietan hegazkinek, hura jakinda, ez zituztela bonbardatzen. 1937an Durango bonbardatu zutenean, esate baterako, badirudi ez ziotela kupulari jaramon handirik egin. Edozelan ere, kartzelek ere, sistema panoptikoa delakoa asmatu ostean, kupula edo dorre bat zuten erdian. Handik kartzelako modulu guztiak kontrolatzen zituzten.

Granadako kartzela komentua izan zela entzun nuela esan dut, hori da nire informazio guztia. Edozelan ere, hala balitz ere, ez litzateke komentua izandako kartzela bakarra. Nire herrian, Zornotzan, joan den mendeko 40ko hamarkadan, gerra ostean, Karmeliten komentua emakumeentzako kartzela izan zen, eta bertatik pasatu zirenek kontatu zutenez, bizimodu latza izan zuten, gaixotasunak, gosea, tratu txarrak eta zenbait kasutan heriotza. Horrelakoak ohikoak ziren bizimodu lazgarria, alegia.

Bizpahiru egun igarota, hatz markak hartu zizkidaten tinta beltzaz. Gelatik atera ninduten eta konturatu nintzen atean ez zeudela gure izenak idatzita, baizik eta nongo kartzelatik gen-

tozen. Bide batez, arbel baten ondoan argazkiak egin zizkidaten. Hori dena eginda gero, galdetu zidaten zer deliturengatik nengoen kartzelan. Nik erantzun nien kontu politikoengatik nengoela. Hori entzunda, ez zidaten gehiagorik galdetu. Lasterrera, bakartze departamenduko patiora irten ginen. Patioaren zabalera barrote batzuek mugatzen zuten, atean ere barroteak zeuden eta goi aldean alanbrezko sare batez estalita zegoen patio osoa. Aurrean, eskuma aldean, hiru metroko altueran, kamera bat zuten, gure mugimendu guztiak ikusteko.

Ihesa beti dago presoaren buruan, ez dakit denen buruan, baina gehienenean bai behintzat, askatasun behar itzela dagoenez gero. Beti dago buruan ihesaren ideia, inguruak ematen dituen aukeren arabera. Aukera mugatuak dira, jakina, batzuk mugatuagoak, beste batzuk ez hainbeste. Zenbat eta aukera handiagoa, orduan eta presenteago dago ihesa norberaren buruan, batzuetan ihes saioan sartuta, obsesioa izateraino; orduan bai, burutik kendu ezineko kontua bihurtzen da, haize egunetan haize-orratza bezala biraka dabilena. Edonola ere, inor ez da kartzelako bizitzara ohitzen, eta norberaren joera naturala handik irtetea da. Kartzelara sartu bezain laster badakizu asmo eta gogo hori zurekin eramango duzula barruan zauden bitartean, kartzelarik kartzela. Nik ere parte hartu izan dut haietako batzuetan. Lehena, Carabanchelen bertan, sartu eta egun gutxira. Egia esan, Carabanchelera joan izan naizen guztietan bazegoen zerbait hasita edo hasteko prest.

1980ko uztailaren erdi aldera heldu nintzen Carabanchelera Auzitegi Nazionaletik igaro ostean. Hirugarren egunean ezustekoa eman zidaten lagunek, zulo bat egiteko aukeraren berri, alegia. Ordurako bazuten beharrezko informazioa zuloa egin behar zen lekura sartzeko. Galeriako azken zelda zen, hutsik zegoena, eta ondoan tximinia bat zegoen. Informazioa ez ezik,

zelda hartako giltza bat ere bazuten, eurek ohe baten burdin zati batez egina. Berehala hasi ginen lanean. Barrura sartzen ginen lagunak bertan itxita geratzen ginen, kartzeleroak inguratzen baziren, atea itxita ikus zezaten. Kanpo aldean beste lagun batzuk adi egoten ziren, «ura» emateko prest; alegia, inor hurbiltzen bazen, abisua emateko. Lehenengo, zeldako horma zulatu genuen tximiniara pasatzeko. Baina aurretik zuloa disimulatzeko igeltsuzko estalki bat prestatu genuen, zuloa bezala karratua eta haren neurri berekoa. Eguneroko lanak bukatuta zeldatik irteten ginenean, zuloa estalita uzten genuen, eta horma betiko antzera ikusten zen.

Tximinian behera jaisteko oztopo bat topatu genuen: burdin-sare sendoak. Zerra bat lortu eta burdinak moztu nituen, hirugarren solairutik beheraino, beti ere lagunen abisuei adi. Tximinian behera jaisteko eta gero igotzeko izara batzuk erabiltzen genituen, korapiloz lotuta. Behin batean, bigarren solairuaren altueran nengoela, kartzelako bozgorailuen zarata entzun nuen. Lagun batek tximiniara burua sartu eta esan zidan bizkor irteteko, nire izena entzun zuten-eta, abokatuarengana edo epaitegiko idazkariren batengana diligentziaren bat egitera joateko. Eta horixe egin nuen nik orduan, ziztu bizian izaratik gora igo. Lagunak ere, izaretatik tiraka. Tximiniara sartzeko janzten nuen txandala kendu, beste bat jantzi, eskuak eta aurpegia garbitu eta zeldatik irten nintzen, kartzeleroak gehiegi itxaroten eduki barik, susmorik eduki ez zezaten.

Beste behin ere, bizkor irten behar izan nuen handik, tximinia kez bete zen eta. Ez dakit kartzelako garbitegiko makinetatik edo batek daki zer piztu zuten, kontua da handik ikatza lez atera nintzela.

Zuloa bukatu baino lehen, Soriako kartzelara aldatu gintuzten zenbait lagun. Hamabost bat egun eman nituen Carabanchelen, gogoz lan egiten, hatz-mamiak guztiz gastatu arte, Carabanchelgo kartzelatik irteteko eta Soriakora sartzeko hatz-aztarnak jartzean nabari zen bezala. Soriara bidean pentsatu nuen, ni tartean ez banengoen ere, poztuko nintzela hainbat lagunek hanka egitea lortuko balute. Edonola ere, zulo hura aurkitu egingo zuten kartzeleroek.

Zulo gehiago izango ziren, bai han, bai beste leku askotan. Urrunera gabe, Sorian bertan. Gaztela-Leongo kartzela hartara heldu nintzenean kontatu zidaten zer gertatu zen hilabete batzuk lehenago. Patioko lauza batzuk altxatu eta zuloa egiten hasi ziren. Zarata ez entzuteko, baloi batekin horma jotzen zuten etengabe. Halako batean baloia patio huts batera joan zen eta kartzelero bat haren bila joan zenean, zulotik irteten zen zarataz ohartu zen. Ez zuten topatzen, ondo estali eta disimulatuta zegoen-eta, baina handik aurrera sekulako kontrola ezarri zuten, kontaketa eta araketak edozein momentutan eginez, zuloa aurkitu zuten arte.

Hura ez zen Sorian izandako ihes saio bakarra izan, ezta kontrol zorrotzaren ondorioz sortzen zen tentsio sasoi bakarra ere. Urtebete-edo lehenago, bertan zeuden lagunek poliziak egunez moduluetatik kanpora ateratzea lortu zuten borroka latzen ondoren; hala ere, polizia nazionaleko konpainia bat zegoen artean, eta egunero sartzen ziren moduluetara miaketak eta kontaketak egitera.

# VII

Isolamendu moduluan ere baziren beste kide batzuk: Joseba Uranga Gastesi, Xabier Garmendia Arrieta *Kroke* eta Fran Franko Argibai. Heldu bezain laster, elkar agurtu genuen. Eta segituan esan nion Josebari: "bertan dago kalea?". Baina kartzelero batek bere garitatik berba egiten ari ginela ikusi eta isilik egoteko esan zigun, leihoan zeudenekin berriro berba egiten ikusiz gero, ostera gelara eroango gintuela esanez. Josebak, guri patio denbora ez murrizteko, esan zidan horretaz berba egingo genuela aurrerago elkar ikustean. Ondo zegoela esan nion eta paseoan segitu genuen, haren leiho ondotik pasatzean irribarre lagunkorra erakutsita.

Oraindik ez dut ulertu patioan dagoen presoak bere zeldako leihoan dagoen beste batekin hitz egiteak zer arrisku dakarren. Handia izan behar du, kartzela gehienetan debekatuta dagoelako. Patioan daudenek elkarrekin berba egin dezakete, baina baten bat leihoan badago, orduan ez, Estatuaren segurtasunarentzat kaltegarria balitz bezala. Horregatik adi egoten ziren, mehatxua prest.

Patio horretatik, aurre-aurrean eta oso hurbilean, zutoin erraldoi batzuk ikusten nituen. Goian foku ilara batzuk zituzten, foku handiak, Karmenetako futbol zelaia argitzeko. Patioaren erdialdean paseatzen ari nintzela, konturatu nintzen estolda bat zegoela eta ur soinua entzuten nuen. Agian ur hura Sierra Nevadatik zetorrela bururatu zitzaidan. Pentsatu nuen, baita ere, ur hodi hark zenbateko diametroa edukiko zuen eta non edo zenbat metrotara egongo zen estolda nagusia. Dena dela, gaur egun bide horiek denak zarratuta daude, barroteak eta bestelako segurtasun neurriak jarrita. Hala eta guztiz, umeen jolasak eta emakumeen ahotsak ere entzuten nituen. Kartzelan, zeldan bakarrik zaudela, isiltasuna ez bada, askotariko zaratak entzun

daitezke, tartean oihuak, preso batenak edo kartzelero batenak izan daitezkeenak, baina gizonentzako kartzelan, beti ere gizonezko batenak. Horregatik, arreta ematen zidaten ahots eta zarata haiek, ez zirelako ohikoak, kalearekin lotutako soinuak ziren. Horretaz guztiaz pentsatzean, gero eta konbentzituago nengoen kalea hurrean neukala. Geroago ziurtatuko nituen orduan zalantza nituenak. Umeen eta emakumeen ahotsak barrutik zetozen, bakartze ziegen ondoan zeuden mintzaleku eta bizikidetza-komunikazio geletatik, hain zuzen. Mintzaleku eta gela haiek ziega haietan bakartuta zeudenen komunikazioak egiteko ziren. Beraz, ahots haiek presoen senideenak ziren.

Egunak aurrera zihoazen heinean, aldaketa batzuk izan ziren. Esate baterako, Rubixo eta biok trantsituko galeriatik isolamenduko galeriara pasatu gintuzten. Eta Joseba, Kroke eta Fran moduluetara eroan zituzten. Joseba hirugarren moduluan gelditu zen eta Kroke eta Fran bigarren modulura eroan zituzten. Rubixo eta biok hilabete segitu genuen isolamenduan.

Egun batzuk baino ez ziren igaro Sevillatik iritsi nintzela, eta hilabeteak zirela ematen zuen, baina artean ondo gogoan nuen Sevilla II kartzelako giro kargatua. Arnasa hartzean ere nabaria zen hori. Miaketak eguneroko kontua izaten ziren. Kartzeleroak gorrotoz beterik etortzen ziren gugana, dena lurretik botata utzita, hankaz gora dena. Nik ez biluzteko jarrera hartzea erabaki nuen. Gogoratzen dut aurreko egun baten jantzita neuzkan arropa guztiak erantzi egin zizkidatela, biluzik jarri arte; eta hanka bat altxatu egin zidaten, ezpata-dantzari batek altxatzen duen baino gehiago. Eskerrak ondoan horma zegoela; bestela, lurrera jausiko nintzen. Tentsio ikaragarria zegoen. Kartzeleroek, miaketa egiteko, beti janzten zituzten latexezko eskularruak, gu arropa gutxirekin eta larruazala bistan ibiltzen ginen arren; izan ere, Sevillan sasoi hartan bero handia egiten zuen.

Normalean, praka labur edo bainu-jantziak erabiltzen genituen. Miaketan, arropetatik ez ezik, hanketatik eta besoetatik ere tiratzen ziguten. Egunero miaketa bi egiten zituzten: bata, gelatik irtetean, eta bestea, gelara sartzean.

Beste egun batean, ostera ere miaketa egiteari uko egin nion eta kartzeleroak orduan errefortzua eskatu zuen. Berehala agertu ziren bost kartzelero gehiago, oso haserre. Kartzeleroak niri arropa kentzen hasi ziren era bortitzean, indarrez, eta lurrera bota nahian. Nik, ez jausteko, kartzeleroetako bati heldu nion eta eurak, orduan, egurra ematen hasi zitzaizkidan, nik euretako bat jo egin ei nuen aitzakiarekin. Berehala okertu zizkidaten eskumuturrak, baita sama ere, eta bertan zein isolamendu-galeriara bidean ere egurtu ninduten. Bide horretan zehar, hainbat ate elektroniko zeuden, eta ateak zabaldu eta ixteko ardura zuen kartzeleroa emakumezkoa zela gogoratzen dut, eta berak ere zelan jipoitzen ninduten ikusi zuen. Isolamendu-galeriako kartzeleroek ere egurtu ninduten, latexezko eskularruak jantzita. Erasoan belarrondoko ederra jaso nuen eta, horren ondorioz, entzumena hilabetez galdu nuen; oreka-arazoak ere izan nituen. Kanpoko medikuek, proba batzuk egin ostean, kolpeen ondorioz tinpanoa urratuta neukala esan zidaten. Jipoiaren osteko gau osoa ohera lotuta eta erdi biluzik izan ninduten. Ohera lotu ondoren, kartzeleroak honela esan zidan: *«¡Y no des por culo!»*. Afaltzeko orduan, esku bat askatu zidaten, baina ez zidaten mahai-tresnarik ipini. Kartzeleroek, berriz, barrezka, *«¡si tiene de todo!»* esaten zidaten eskatu nituenean. Ezin izan nuen laranja bat baino jan. Txiza ere bertan egin behar izan nuen.

Horrelako gorabeheretan, sendagilea etortzen da presoari "ku-ku" bat egitera, hau da, begiratu bat egitera. Sendagilea etorri baino lehen, odolez zikinduta neukan juboia zaborretara bota zuten kartzeleroek. Sendagilea etorri zenean, galdetu

nion zergatik neuzkan eskumuturrak lotuta, ea zauririk neukan begiratzeko esan nion, eta aktan jasotzeko. Berak esan zidan eskumuturrak lotzea-eta ez dela bere kontua, kartzelako erregimenari dagokion gauza dela. Nik ez dakit, baina, zer idatzi zuen.

Biharamunean, eskuburdinak kendutakoan, ispiluan begiratu eta bizkarraldean goitik beherako arrakala bat ikusi nuen, kartzelero baten erlojuaren burdinazko belarriarekin eginda edo. Orduan, medikuari galdetu nion ea bizkarreko zauria ikusi zuen, aktan jasotzeko, eta berak esan zidan ez zuela horrelakorik ikusi. Ez ninduen harritu *Corcuera*ren jarrera hark. Hala esaten genion gure artean ustezko sendagile hari, sasoiko barne ministro Jose Luis Corcuera gogoan, hau da, etxeko atea ostikoka zabaltzea baimendu zuen legea egin zuena.

# VIII

Granadako espetxe zaharreko isolamendua larregi zen baten bat gauez gaixo ipintzen bazen. Nahiz eta atea gogor jo, ez zuten aintzat hartzen. Gogoan dut behin preso sozial bat, *Ñoño*, gaitzen batek jota zegoela, aldameneko zeldako laguna ate joka hasi zela, baita berehala han geunden guztiok ere, sekulako astrapala sortuz. Han ez zen inor agertzen, eta Ñoño arreta barik egon zen denbora hura guztia. Horrek, beharbada, haren gaixotasunaren bilakaeran eragina izango zuen ondoren. Hori ez dakigu, baina, esate baterako, bihotzekoa izan balitz, bertan geratuko zen.

Granadako espetxe zaharreko bakartze moduloa aipatu dut, baina ondo pentsatuta, kartzela gehienetan maiz sortzen ziren antzeko egoerak.

Hilabete bat pasatu ondoren, bakartze departamentutik lehen modulura joan behar genuela esan ziguten, eta Rubixo eta biok hara heldu ginen. Kalea hobeto ikusten genuen, baita jendea paseatzen ere. Gure bizitzen arteko kontrasteez pentsatzen hasi nintzen. Eta handik irten behar nuela. Baina nire eskumatara Polizia Nazionalaren kuartel edo parkea zegoen. Han gordetzen zuten euren furgoneta mordoa, baita autobus itzelak ere. Haietako askok ez zeukaten bereizgarririk, kamuflatuak ziren eta. Polizia asko kaleko jantzita irteten ziren handik. Kuartel haren jarraian kuartel militarra ere bazegoela esan zidaten. Izan ere, euren korneta soinuak entzuten nituen nik. Kokoteraino nengoen eguneroko tronpeta jotzearekin.

Soldadutzako egunak gogorarazten zizkidan tronpeta arraioak. Izan ere, nahikoa entzunda nengoen tronpeta Galiziako kuartel hartan. Behin ondo hurbiletik entzun ere. Ohean nengoen ni, botatzarrak erantzita. Bertan bazegoen soldadutzatik libra-

tzeko zoro plantak egiten zituen mutil bat, eta guardia-leku delakoan turuta bat hartu zuen. Zer okurrituko eta nireganaino hurbilduta, turuta nire belarriaren ondoan ipini eta jo egin zuen. Ni sutan ipini nintzen. Ohetik altxatu, botatzarrak jantzi eta turuta kendu nion. Lurrera bota eta bi oinkada emanda, zapaldu egin nuen. Gero, erditik tolestu nuen behin eta berriz, bi zati egin arte, eta estolda batetik behera desagerrarazi nuen.

Soldadutza bizitzaz ikasteko balio duela esaten ziguten. Besteren batentzat izango zen, nik ez bainuen ezer ikasi. Onik ez, behintzat. Ezta goi kargu militar bati nola esan behar zaion ere. Behin batean, guardia egiten ari nintzela, ustekabean eguneko burua agertu zen, ez dakit koronela edo teniente koronela ote zen. Armadan, goragoko kargu bati agur egin behar zaio eta bere kargua aipatu. Nik albisteak eman behar nizkion eguneko buruari, baina sorbaldan zuen izar kopurua ikusia ere, haren kargua ez nekienez, *«a la orden»* besterik ez nion esan, eta berak galdetu zidan: *«A la orden de qué»*. Orduan niri irtenbide hau bururatu zitzaidan arratsalde eguzkitsu hartan: *«La luz del Sol no me deja ver las estrellas»*. Berehala pentsatu nuen horrek zigorren bat ekarriko zidala, baina badirudi ez ziola garrantzi handirik eman edo ez zela poesiaz ohartu, edo nire esaldiak zer pentsatua eman ziola.

Korneta ez baina txaranga osoa entzuten zen hainbat domekatan Granadako espetxean. Horrek esan nahi zuen futbol partidua jokatuko zutela espetxe aurreko Los Cármenes futbol-zelaian. Ordu batzuk lehenago han kalerik kale ikusten nituen futbolzale amorratuek giroa berotzen zuten. Espetxean polizia bat zegoen, arbitro bat hiltzeagatik. Antza denez, tiro batzuk desarratu eta bertan zerraldo utzi zuen arbitroa. Hamaika gauza entzundakoak gara leku hauetan. Eta era guztietako pertsonaiak ezagutu ditugu.

Horietako bat, Mari Jose, Granadako espetxean kirolaz arduratzen zen monitorea. Kartzelero batekin ezkonduta zegoen. Bera saskibaloi jokalaria zen, baina utzi egin zuen, kirola zela-eta gorputza aldatzen ari zitzaiolako. Kulturisten muskulatura zuen eta ez zitzaion gustatzen, nahiz eta haren senarra horrek ez zuen arduratzen.

Kiroldegian hiru preso ingelesekin elkartzen nintzen, beroketak eta luzaketak egiten. Ingeles haiek uste zuten nire gimnasia garbia eta ondo egina zela. Bazekiten ETAkoa nintzela eta goi mailako trebakuntza militarra eginda nengoela uste zuten, nonbait. Ez dakit, ba, ni kirol kontuetan beti neure kasa ibili izan naiz. Ez ditut kontatzen abdominalak eta flexioak, arineketan egiteko ez dut kronometrorik erabiltzen... baina zaletasun handia daukat.

Mundu txiki hartako beste elementu bitxi batzuk lehen aipatutako Ñoño eta haren familia ziren. Aita mertzenario joan zen Aljeriara, Atzerritar Legio frantsesarekin. Handikeria erakusten zuen kartzelako patioan, hori dela-eta. Emaztea mutua zuen. Beste seme batzuk ere, Ñoño bezala, preso zeuden Granadan. Ñoño xiringaren menpe ibili zen hil arte. Aitak saltzen zuen hautsak eraman zuen hilerrira.

Bustamante familiaren erdia baino gehiago ere kartzelan zegoen. Asko gogoratzen naiz anaia nagusiaz, *Txilinga* goitizenekoaz, hain zuzen. Hark bere buruari ere barre egiten zion. Bizio guztiak zituen, eta diru asko behar zuenez, ahal zuen bazterretik ateratzen zuen. Prostitutekin ere bazituen negozioak. Kartzelara sartu aurretik, bezeroak nora eramango zituzten galdetzen zien eta prostitutek informazio hori emanda, Albaicinera, edo Sacramontera jotzen zuen. Han itxaroten zituen Txilingak prostitutak bezeroarekin iritsi arte. Larrutan hasten zirenean, bezeroaren kotxera hurbildu, atea zabaldu eta kartera lapurtzen zion.

*Madrugas* Erizaindegian zegoen. 55 urte zituen. Kartzelan jaioa zen. Gutxi ezagutzen zuen kalea, nahiz eta batzuetan espetxe baimenarekin ateratzen zen, baina berehala itzultzen zen kartzelara, kalean ez baitzuen ezertxo ere. Berak egin ez zituen gauzak ere egin zituela esaten zuen epaitegian, diruaren truke. Kartzelan ondo moldatzen zen. Beti ibiltzen zen erlojuen, arropen edo beste edozeren salmentaren bitartekari lanetan. Madrugasek gizonak atsegin zituen.

Erizaindegian, halaber, Miguelito zegoen. Gutxienez sei gaixotasun larri zituen mutil gazte hark, ezpainetan beti irribarrea zuenak. Bere neska-lagunari esan zion bizitza berri bat has zezala, beste gizon batekin, berak egunak kontatuta zituen eta. Naturaltasun handiz azaltzen zituen horrelako gauzak. Zeukan gaixotasun batek ez zuen atzera bueltarik. Nahiz euskaraz ez zuen tutik ere ulertzen, gu mintzatzen ginenean ez zitzaion ardura. Miguelitok, andaluza izan arren, euskaldunok independentzia nahi izatea ulertzen zuen. Bartzelonan urte asko eman zuen, eta bazekien katalanez. Ezinbestekoa izan zuen bertan egonda katalana ikastea.

Ultraeskuindar bat ere ezagutu nuen Granadan, *Martinez el facha*. Espetxe zahar hartan erdaraz *cabo de varas* esaten zitzaion funtzioa egiten zuen. Alegia, kartzeleroen konfiantzako preso eta salataria zen. Galeriako ateak zabaldu eta itxi egiten zituen. Bibote txiki eta mehea zuen sudur azpian, aurpegi gihartsua eta txandala goitik behera Espainiako banderaz apaindua. Granadako kaleetan ere horrela ibiltzen omen zen, Harley Davidson bat zeramala, motoaren jarlekuaren atzeko aldean ere piperpotoa, leku aproposa, egia esateko, eta pistolatzarra agerian, *fuskoa*, esaten dioten moduan. Dantzaleku bati su emateagatik zegoen kartzelan. Haren oihuak espetxeko galerietatik entzuten ziren. Egunero adierazten zuen bere

nostalgia *viva españa* eta *viva franco* oihukatuz. Egun batean, patioan, lagun talde bat partxisean jolasten zebilen eta ni haiei begira, *Martinez el facha*ren parean. Halako batean, badio bere aitak esaten ziola tiroak aurretik datozenean, paparra zabaldu egin behar dela.

Zenbat halako...!

# IX

Egun batean, Rubixo epaiketa batera eroan zuten, lekuko moduan. Joan baino lehen, agurtu egin ninduen.

–Ikusi arte eta ondo pasa –esan zidan, eta segituan bostekoa eman genion elkarri.

Baina ez zuen denbora larregirik iraun Madrilen. Halako batean, beste galeria bateko leiho batean agertu zen, nire modulura ematen zuen leiho batean, hain zuzen.

–Modulo honetara ekarri naute –esan zidan.

–Zelan dena, Rubixo? –galdetu nion nik.

–Ez dago berri askorik –erantzun zidan.

Eta nik, gehiago itxaron barik, bota nion:

–Batek zerra bat eskaini dit eta ez dakit zer egin.

Rubixok berehala esan zidan:

–Zeren zalantzak dauzkazu?

–Ba, beharbada kartzeleroak enteratu eta dena hankaz gora jarriko ez ote duten.

Rubixoren erantzunaren zain nengoen, eta azkenean esan zidan:

–Egin zeuk ikusten duzuna; nahi baduzu, gelditu zerra horrekin.

Kezkatuta nengoen kartzeleroen belarrietara helduko ote zen zerra niri eskaini izanaren berria. Izan ere, zerra sozial batek eskainia zen, eta ez genuen, momentu hartan, behar besteko konfiantza preso sozial harekin; beraz, zerra hartu baino lehen,

nire lagunen bat jakinaren gainean jarri nahi nuen, kontu hari buruzko zalantzak argitzeko, eta erabaki zuzena hartzeko.

Handik egun gutxira, burdina mozteko zerra lortu nuen. Nire eskuetara heldu bezain laster, aproba egin nuen, ohe bateko somierrean. Hiru edo lau eskualdi eman eta marka txiki bat egin nion. Ez nuen zerra kamustu nahi. Egun batzuk geroago, Rubixok esan zidan:

–Zigor baten helegitea jarri behar dut erreforman, epaileak atzera bota dit eta.

–Etzazu errekurritu –esan nion–, nik ere beste bat dudanez, ziur asko isolamendura eroango gaituzte biok, eta han lagun bat behar dut inguruko zelda batean, jagon egiteko. Burdina moztekoa ez da oso handia, eta apurtzen badut, orduan ez naiz irtengo.

–Egon lasai –esan zidan Rubixok–, ni zure esanetara egongo naiz.

Baina, nahiz eta helegiterik ez egin, ez gintuzten bakartze zeldetara eroan eta moduluko ziegetan bete genuen zigorra.

Josebarekin ere banuen beste elkarrizketa bat finkatzeko, eta eskolara maiz joaten hasi nintzen berarekin egoteko. Kartzelako tokirik ahulenak zein ziren edo handik alde egiteko nondik zegoen errazena esaten zidan.

–Nire moduluko txakurren garita ikusi beharko zenuke, batzuetan ez da inor etortzen, edo gutxien uste duzunean, han egoten dira; baina potro birekin kalean zaude –esan zidan.

Josebak bere kartzela zigorraren parte handia beteta zeukan. Lehenago berak ere izan zuen buruan alde egitea, baina nik baino askoz kartzela denbora gutxiago zuen aurretik eta baz-

tertu egin zuen ideia hori. Hala ere, ni eta edozein kide laguntzeko prest zegoen beti, eta haren adorea ez zitzaizun sekula faltako. Berak ematen zizkidan behar nituen azalpen guztiak. Kartzelako korridoretik genbiltzala ere, ihesaren gaiak ez zuen nekatzen. Ona zen edozeren berri bilatzeko.

Zer den lagunak inguruan izatea. Asko egonda, sekulako babesa da, baina bakan batzuk egonda ere, lagun baten ahotsa entzutea besterik ez bada ere, helduleku garrantzitsua da. Behin, Sevilla II kartzelan, beste galeria batera joan behar nuela esan zidaten. Orduan, zuzendariordea bera etorri zen, "lurra markatzen" bezala, eta "bere itzalpean" bakartuta zegoen galeria batera sartu ginen. Bat-batean, sei edo zortzi kartzelero azaldu ziren, zuzendariordeari kautxuzko borra bat eman zioten eta hark borraz besoan eta barrabiletan kolpe bana eman zidan. Kolpeak hamabost bat zentimetroko erredura eragin zidan besoan, eta barrabiletako kolpeak, berriz, makurrarazi egin ninduen. Ondoren, sendagileak pomada bat eman zidan erreduraren ondorioak arintzeko, eta nik medikuari partea egiteko eskatu nion, baina parte ofiziala hartzeko. "Ofiziala" egiteko errepikatu nion nik, baliorik gabeko paper ziztrin berde bat ikusi niolako esku artean. Berak baietz esan zidan, parte ofiziala emango zuela. Eta ondotik alde egin zuen.

Gaua heldu zen. Ni bakarrik nengoen *transito* edo pasadizoko galerian. Halako batean, leihotik begira nengoela, ahotsak entzun nituen. Hura ustekabea! Nire lagunen ahotsak ziren. Haiek beste modulu baten zeuden. Ahotsak entzundakoan, oihuka hasi nintzen, baina ez zidaten entzuten. Kartzeleroek, nire oihuak entzutean, interfonotik isiltzeko agindua eman zidaten. Dena den, nik ez nien kasurik egin, eta haiek, orduan, irainka hasi ziren. Haiek lehenengo, neu ere gero. Eta azkenean, denok irainka. Kristoren istilua sortu zen... eta nik gelako interfonoa txikitu egin nuen, istiluak berak eta sortutako zarata ika-

ragarriak urduritasun handia eragin zidalako. Neure kideek non nengoen jakin zezaten nahi nuen nik eta, azkenean, lortu egin nuen, lasaitu handia hartuta. Gelako interfonoa apurtzeagatik zortzi hilabetez dirurik gabe egon nintzen, kartzelako kontua blokeatu baitzidaten, epailearen aginduz. Dena den, senideek, ahal zutenean, dirua sartzen zidaten beste preso baten izenean. Oinarrizko materiala erosi ahal izateko: zigiluak, gutun azalak, laboreak... Hiru helegite egin behar izan nituen, hartu beharreko diru guztia lortzeko. Epaileari esan nion kartzeleroek interfono guztiak martxan ipintzen zituztela zenbaketa guztietan, gelan ni bakarrik egonda. Gainera, kartzeleroak, nor zen jakin barik, irainak botatzen zizkidala interfono bidez. Horregatik, nire asmoa zela interfonoa deskonektatzea, lasaitasunagatik.

Isolatuta egotea oso gogorra izan zen; izan ere, bakar-bakarrik egon nintzen hiru hilabetez, inoren aurpegia ikusi barik… Nire aurpegia baino ezin nuen ikusi, gelako ispiluan. Askotan, nik nezeserrean gordeta neukan ispilu txikian ikusten nuen neure burua, eta berarekin egiten nuen berba, baita hausnartu ere.

Niri ezarri zidaten bakartze-neurriak nire senideei ere eragin zien. Zeldan bakartu ninduten eta hurrengo asteburuan gurasoak, beti legez, autobusez etorri ziren. Kartzeleroek, espetxeko atean bertan, bisita-egunak aste barrura pasatu zituztela esan zioten aitari. Orduan, autobusez joan ziren beste senideek, elkartasun modura, uko egin nahi izan zioten euren senide presoei bisita egiteari. Baina aitak esan zien bidaia aprobetxatu behar zutela bisita egiteko. Handik aurrera, astegunetan ez zegoenez ez bisitarik ez autobusik, hegazkinez joan behar zuten Sevillaraino.

Beraz, presook ez ginen izan zigortu bakarrak; senideek ere zigorrak jaso zituzten, eta jarrera eskas hori garai eta kartzela guztietan izan da horrela. Esate baterako, urte batzuk lehena-

go, Madrileko Alcala-Meco espetxean nengoela, aita ni ikusi gabe zigortu zuten hiru hilabetez. Bisita egun baten, kartzeleroa gure mintzalekura etorri, atea zabaldu eta aitari irteteko keinua egin zion. Aitak bazekien bisita amaitu zela, eta hala esan zion kartzeleroari, berak ere bazituela eskuak atea zabaltzeko. Hura izan zen guztia, baina badirudi kartzeleroari ez zitzaiola erantzun hura gustatu eta zenbait egun geroago jakinarazi zidaten aitari parte bat egin ziotela. Partean gezurra jarri zuen kartzeleroak. Lokutoriotik azkena irteten izan zela eta euren bisita-sistema atzeratu zuela leporatu zion aitari. Parte horren ondorioz etorri zen zigorra: hiru hilabete ni ikusi gabe. Egun batzuk geroago Herrerako kartzelara eraman baninduten ere, han zigorra betearazten jarraitu zuten. Nik helegitea jarri nuen, epaileak niri arrazoia eman eta zigorra kendu zion aitari... zigorra ia beteta zegoenean; izan ere, hilabete bi eta erdi igarota jaso nuen epailearen erantzuna.

# X

Granadako espetxeak sei garita zeuzkan, alde bitan banatuta; hiru, alde baten, eta beste hiru beste aldean. Garita bakoitzak zenbakia zeukan: 1, 2 eta 3 zenbakidunak alde batean, eta 4, 5 eta 6 zenbakidunak beste aldean. Alde bakoitzeko gariten arteko distantzia 56 metrokoa zen, eta guztira, lehenengo garitatik hirugarreneraino, 112 metrokoa, kartzelaren luzera. Baina erdiko garitetan oso guardia gutxi egiten zituzten, alarmaren bat-edo zegoenean baino ez; beraz, hortixe igarotzeko asmoa neukan nik, 2 zenbakidun garitatik, hain zuzen ere. Gertuen zegoen guardia zibila 56 metrora neukan.

Moduluan bakarrik egon nintzen denboraldi hartan beste lagun bat heldu zen nire gelara, Kepa Miner Aldabalde *Txalaka*, Cartagenako kartzelatik ekarria. Aspaldiko ezaguna nuen, bera 1984an sartu zenean, ni Alacala Mecon nengoen eta. Eta ondoren ere beste zenbait kartzelatan egonak ginen elkarrekin. Oso pozgarria da aspaldi ikusi gabeko lagunak berriro ikustea, zer esanik ez lagun horiek hainbat egoera latz partekatutakoak direnean. Enkontru benetan betegarriak izaten dira, elkarrengandik aldentzean sortzen den hutsunearen alderantzizkoak, hain zuzen. Beti espero duzu barruko lagunak berriro nonbaiten ikustea, kartzeleroak ez bezala, espetxea ez bezala. Egon zaren kartzela sekula gehiago ez ikustea espero duzu, baina mundu honetan inoiz ez da espero duzuna gertatzen, eta askotan nazka-nazka egin zaituen lekura itzuliko zara.

Puerto Iera iritsi ginenetik ia urte bi eta erdi igarota, 1983ko azaroaren 15ean, hain zuzen, atzean utzi genuen kartzela gorria, Herrera de la Mancharako bidea hartuta. Andaluziako bazter hura ahazteko moduko denbora igarota... uler dadila, baina, denbora hori pasatzea ez baita kartzela hura ahaztea. Edonola ere, ondo gogoratzeko bigarren aukera bat eduki

nuen. Hamabi urte joan ziren eta 1995eko abenduaren 13an, Sevilla II espetxean nengoela, nire gauzak biltzeko esan zidaten. Nora eramango ninduten galdetu nien, ez zidatela erantzungo banekien arren, baina luze gabe, ehun bat kilometrora, adreilu gorrizko kartzela haren txapeltzarra nire aurrean agertu zenean jakin nuen nire helmuga. Ez ninduten bertara sartu, ordea, ondoko eraikinera baizik, Puerto IIra, hain zuzen. Hura ere ez nuen ezezaguna, urte asko lehenago Puerto Ieko leiho batetik ikusita baikenuen eraikitzen hasi zirenean. Kartzela hura ikusita, berriro ere hango jana, edo bazka, gogora etorri zitzaidan atoan. Oso eskasa izaten zen, oso koipetsua. Talgoaren gantza zela esaten genuen. Batzuetan, oilasko hankak uretan pasatu beharra zegoen, koipe apur bat kentzeko. Bakartze moduluan egonda, are okerrago izaten zen, janari hotza eta ez asetzeko nahikoa. Horregatik ekonomatura –kartzela barruko dendatxora– eta kaleko demandaderora eskatzen genituen jaki batzuk, batez ere hestebeteak, latak eta fruta. Demandaderoa kartzelako ekonomatuan ez zeuden produktuak kalean erosten zituen kartzeleroa zen, zuzendariak produktu horiek erosteko baimena emanda, jakina. Esan bezala, jan eskasa hangoa, baina Puerto II kartzelakoa ez zen askoz hobea. Ikusita nago bertan, bisitatik bueltan, egun horretako janari pila bat bakartze moduluko zaborrontzira botata. Egia esateko, beste edozein kartzelatako jana ere ez da hura baino askoz hobea izaten.

Puerto IIan egon nintzen denbora guztia bakartuta eman nuen, ia sei urte eta erdi. 2002ko martxoaren 1ean Jaen IIra ekarri ninduten arte, eta kartzela honetako denbora ere bakartze moduluan eman dut lerro hauek idazten ari naizen momentu honetara arte. Gauzak ondo bidean, aurten libre irteten banaiz, bederatzi urte pasa gehiago izango dira bakartuta emango dudan denbora, ez baitut uste zigor zeldetatik aterako nautenik. Beraz, ia 16 urte jarraian bakartuta.

Hamasei urte bakarrik, hamasei aldiz zoriondu duzu zeure burua urtebetetze egunean. Urteren batean patiotik leihoetara begira, lagunen bat topatu izan duzu, eta pentsatu duzu egun batzuk lehenago izan balitz, zeure urtebetetze eguna dela esateko aukera izango zenuela; beste batzuetan inguruko zeldetan lagun batzuk egoten ziren, eta beste leiho batetik heltzen zen besarkada. Batzuetan patioko ordu eskasetan elkarrekin topo eginez gero. Baina zuk ez duzu ez eguna ez patioa aukeratzen. Ezta eguneroko lagun duzun tristura ere. Edonola ere, azken urte hauek baino lehenago ere denboraldi ugari pasatuta nengoen bakartuta. Egun osoa bakarrik, bakarrik gosaldu, bazkaldu eta afaldu. Eguna eta gaua zeure buruarekin bakarrean, egun osoan, aste osoan, inorekin berba egin barik, ahotsa ahuldu eta ia galdu arte. Izan ere, behin baino gehiagotan bisitara joan eta kostata entzunarazi izan dut neure ahotsa, eta bisitariek afoniko nagoela esan izan didate. Horrela denbora luzea eman ondoren, egun osoan zehar lantzean behin kartzeleroaz beste gizakirik ikusi barik, lagunekin elkartzean urduritasuna nabari da, jendearekin egoteko ohitura galduta eta ahots kordak ahulduta bezala, eta ez berba asko egiteagatik edo oihu egiteagatik, hain zuzen, guztiz kontrakoagatik baizik.

Ez dakit denera zenbat denbora egon naizen bakartuta, Puerton eta Jaenen jarraian zeldan bakartuta emandako urte hauek baino lehenago, askotan sartu izan bainaute zigor zeldetara, batzuetan egun batzuetarako, beste batzuetan hilabete batzuetarako, euren nahierara. Eta moduluetako zeldetan ere denboraldi luzeak eman izan ditugu; esate baterako, txapeoetan.

# XI

Beste modulu aldaketa bat egitera behartu gintuzten kartzeleroek. Fran hirugarren modulura eroan zuten, zeldan zeuzkan gauza guztiekin; beste horrenbeste egin zuten Rubixorekin eta Josebarekin, hauek lehen modulura eroanda; Txalaka gazteen modulura, 60 urte zituen arren, eta ni bigarren modulura joatera behartu ninduten. Han, Kroke izan nuen lagun. Gela berean bizi ginen biok. Gehienetan, gutako bi sartzen gintuzten.

Krokeri neure asmoa azaldu nion, zer egin nahi nuen. Eztabaidatu egiten genuen, bakoitzari burutik etortzen zitzaionaren gainean, baina Kroke beti laguntzeko gertu zegoen. Kartzeleroak aterik ate etortzen ziren, nahi bagenuen telebista ikustera irten ahal ginela esatera. Iluntzean irten eta ilundu arte egoten ginen, eskolako jolas-orduen antzera erabiltzen zen hango astia. Telebista gelak gazteen modulura ematen zuen. Hara joanda ere, film gutxi ikusten nuen. Komuneko leihoa zulodun txapa batekin sendotuta zegoen; sarritan joaten nintzen leiho hartara, bete-betean ikusten bainuen guardia zibilen garita, bertan zegoena normalean erretzen ari zela. Pare-parean, Granadako futbol zelaia zegoen, eta bertan, partiduez gain, jaialdiak egiten zituzten. Behin, Isabel Pantojari zuzenean abesten entzun nion, ordaindu barik, eta behartuta. Ondoko leiho batetik, egunez, Sierra Nevada eta hango mendikateak ikusten nituen. Baina euts diezaiodan lehengo hariari. Berri bat jakin nuen: gauean guardia zibilak ez zuela hango garitan zaintzarik egiten, hain zuzen.

Badiotsat Krokeri:

–Bertatik, garitatik irten beharko dugu.

Eta Krokek:

–Zelan zeharkatuko dugu errezintoa?

–Ganbaratik pasatzen den argindar kablea erabiliko dugu –nik erantzun diot.

Ihesa irudikatzen nuen orduko. Niretzat premia zen. Ez zen lehenengo saioa eta jakin ere banekien huts egin nezakeela, baina ez nuen horretaz pentsatzen. Bestalde batetik, argi neukan borroka molde bat ere bazela, bai kanpora, bai barrura begira. Hemen ez duzu aukeratzeko borroka mota ugari, baina ihes egitea, edo saiatzea bera ere, haietako bat da. Izan ere, zeure burua kartzelara egokitzen baduzu, etsita zaude, etsaiak garaitu egin zaitu.

Kartzelako erregimenari eta kartzeleroen probokazioei erantzuteko borrokak ez ezik, egoera politikoaren araberako borrokak ere egin izan ditugu hasieratik. Borroka mota gutxi, baina borroka mordoa, beraz. Puerton, esate baterako, 1980ko hamarkada hasierako gose grebak ez ezik beste motatako borroka ugari egin genituen, bizi baldintzak ez ziren samurrak eta. Egun osoa patioan eman behar genuen, iluntzera arte. Orduan gela handi batera sartzen ginen, beste inora joan ezinik. Gela hartan, egunero egiten zizkiguten araketak, guztiz biluzik, kokoriko ipinita eta batzuetan flexioak egitera derrigortuz.

Segurtasun neurriak zirela zioten kartzeleroek, baina umiliatzeko jokaera baino ez zen. Haien barreak ikusi besterik ez zegoen. Iñaki Ojeda *Txapeli* miaketa egiteko eraman zuten batean nabarmena izan zen kartzeleroen jarrera eskasa, eta haien poza mikaztu egin beharra zegoela pentsatu nuen. Lagun bati jostorratz bat eskatu eta aulki baten jarleku barrubigunean ipini nuen. Lagun batek kartzeleroaren aulkia kendu eta haren ordez nik prestatutakoa jarri nuen. Txapeli miaketa egin zioten hiru kartzeleroak barre batean agertu ziren. Ni handik urrundu nintzen, telebista zegoen bazterrerantz. Atzera begiratu eta *Kaxkagorri* ikusi nuen, hiru kartzeleroetan harroputzena, eta

berehala jesarri zen aulki hartan. Min edo susto keinua egin zuen, baina ez zen berehalakoan altxatu. Gorri-gorri ipini zen, alde guztietara begira eta aurpegian sumina gero eta nabarmenago. Telebistan Malvinetako gerraren berri ematen ari ziren, baina nik, egia esateko, ez nion kasu handirik egin. Geroxeago, zeldetara igo ahala, ilaran, Kaxkagorri, ehiza txakurra legez paradan, aurpegira begiratzen zigun, erruduntasun arrastoren bat topatuko zuelakoan edo. Behin zeldetan itxita, lagun batzuk bakartze modulura eraman zituzten. Handik egun bira lagun horiek kartzelako Erregimen Batzordea delakotik igaro ostean, modulura bidali eta Enri –aulkia aldatu zuen laguna– eta biok zigor zeldetara eraman gintuzten. Beharbada kontrol kameran zerbait susmagarri ikusi zuten, auskalo. Biharamunean, Erregimen Batzordera deklaratzera joango ginen biok. Bertan leporatzen zigutena ukatu genuen eta ez genituen egun asko bakartuta eman. Tira, pasadizo bat, beste hainbesteren artean.

Iñaki Ojeda *Txapel* lagunak ez zuen barruan denbora luzea egin, baina kalean ere gutxi iraungo zuen. 1983ko ekainean irten zen Puertotik, eta 1984ko otsailaren 16an Polizia Nazionaleko GEO talde berezikoek balaz bete zioten gorputza bai Iñakiri, bai haren kide biei. Iñaki hil eta Juan Manuel Piris *Mungi* eta Imanol Gonzalez *Beltza* larri zauritu zituzten. Barakaldoko pisu batean gordeta zeuden eta konturatzerako poliziak gainean zituzten tiroka. Gu ordurako Herrerako kartzelan geunde; han egin genuen txapeo luzean, zeldetan bakartuta geundela, jakin genuen sarraski haren berri.

Kolpe latza izan zen.

# XII

Kroke eta biok ez genuen material askorik gure gelako ganbara zulatzeko. Gainera, geunden moduluan ezin zen zarata asko egin. Han arin konturatuko ziren norbait zerbait prestatzen zebilela. Geure gelako leihoan soldatuta zegoen pletina bat kendu genuen. Lanak eman zizkigun soldadura libratzea, oso gogor zegoen eta. Izerdi patsetan amaitu genuen biok. Eta zeldaren goiko aldea zulatzen hasi ginen. Horretarako, litera bi, bata bestearen gainean, mahai bat eta aulki bat erabili genituen aldamio gisa. Hori guztia ganbarara hurbiltzeko. Altuera handiaz aparte, olatuen antzeko forma zuen hango ganbarako sabaiak. Zulatzen hasi ginenean, teila gorrien zatiak edo antzekoak erortzen ziren, baina zertxobait gorago, oso gogorra zegoen, eta indarra egitean zarata ateratzen genuen. Dirudienez, goiko alde guztiak zementua zuen eta ondo sendotuta zegoen, gutxienez lehen eta bigarren moduluetan. Geroago jakin nuen aspaldian Granadako kartzelako presoek mutin asko egiten zituztela eta, hori zela eta, zementua jarri zuten goiko aldean. Horrenbestez, lan horiek uztea erabaki genuen. Beraz, igeltsu antzeko masa prestatu eta ibili ginen lekuan jarri genuen. Sabaiaren kolorea eta igeltsuarenak batak bestearen antzik ere ez zeukaten. Gela zuria zen, eta itxura bat eman eta disimulatzeko, haginak garbitzeko pastarekin partxeatu genuen.

Bertan izan ei ziren mutinak trantsizioa delako garai hartan izango zirela iruditu zitzaidan niri, Granadan bezala beste kartzela askotan ere preso sozialek borroka ugari eta gogorrak egin zituztelako. Garai hartan nahiko antolatuta zeuden, Carabanchelgo espetxean hasi eta hedatzen joan zen COPEL koordinakundearen bitartez (Borrokako Presoen Koordinakundea). 1976tik aurrera, zenbait urtez, hainbat gose greba, beren burua zauritzeak, mutinak... izan ziren. 80an, ni sartu nintzenean,

baziren COPELekoak izandako lagun batzuk. Estatuaren erantzuna, zer esanik ez, errepresioa izan zen, eta zigorra. Hainbat preso hil ziren eta beste hainbat torturatu egin zituzten. Kasu batzuk tribunaletara iritsi ziren, baina Espainiako Justiziak ez du galtzeko denborarik, nonbait, batez ere berak gizartetik baztertzen dituenekin. Hurrengo urteetan neurri berriak, gero eta gogorragoak hartuko zituzten kartzeletan, horietako bat FIES delakoa sortzea (Jarraipen Bereziko Presoen Fitxategia). Jakina, preso politikook *fies* horietakoak gara, jarraipen berezia egin beharreko jendea garenez gero. Ondoren egoera horretan, kartzeletako bakartze moduluetan zeuden preso sozialek APRE elkartea sortuko zuten (Erregimen Bereziko Presoen Elkartea), jasaten zuten egoera bortitza salatzeko.

Guk ere mutinen batzuk eginda gaude, hainbat protesta eta borroka artean. Ondoen gogoratzen dudana Carabanchelgoa izan zen, bertan parte hartu nuelako. Epaiketa batera eraman ninduten Puertotik. 1983a zen. 1981eko uztailean Andaluziako kartzela hartara eraman gintuztenetik gure borrokak biderkatu egin ziren, gose grebak, plantoak eta oro har desobedientzia ekintzak, epaileari helegiteak euskaraz bidaltzen genizkion... Beste kartzeletan ere gose grebetan eta beste hainbat borrokatan bat egiten zuten gurekin. Beraz, Puertotik Madrilera joaten ginenean, han ere topatzen genuen borroka giroa.

Carabanchelgo kartzelan egun batzuk eman ostean, halako batean, goizean goiz, hainbat laguni gauzak batzeko esan ziguten, Puertora gindoazela. Kuadrilla ederra ginen, autobus bat betetzeko bestekoa. Zeldetatik irten eta berehala adostu genuen protesta egin behar genuela, Puertoko egoera salatzeko. Hirugarren galeriako hirugarren solairuan geunden gu. Behera jaitsi ginen baten batzuk, bosten bat, kartzeleroen susmoak ez pizteko. Txakurtegira –kartzeleroak egoten diren lekura– hurbildu ginen. Gutako batek atea jo zuen, beti itxita egoten bai-

tzen, eta han zegoenak uste zuen zerbaiten berri ematera joan ginela. Zabaldu zuenean, bostok sartu ginen tximista lez, han zeuden giltza guztiak hartu eta kartzeleroari galeriatik alde egiteko esan genion. Garitan bertan bazegoen irteera, eta kartzeleroa bota genuenean, galeriako ateak itxi eta gure jende guztia behera jaitsi zen. Galeriako burdinazko atetzarraren kontra metro bateko altuerako zaborrontzi pila bat ipini genuen; gero, somierrak eta koltxoiren batzuk ere eraman genituen, barrikada galanta osatu arte.

Handik ordu erdi batera, zerbait igarri genuen ateaz bestaldean. Soplete bat zen, sarraila ingurua mozten hasi ziren. Sopletearen suak berehala zeharkatu zuen burdina, baita zaborrontzi bat sutan jarri ere, eta apurka-apurka su hura barrikada osora zabaldu zen eta galeria osoa ke beltzez bete zen. Berehala, preso sozialen zeldetako ateak zabaldu genituen, ito ez zitezen, eta zeldetako leiho guztiak ere zabaldu, haietara hurbildu eta arnasa hartzeko. Ke gehiena goian zegoen, jakina, gure galerian, eta kartzelaren pareko kanposantuaren atzeko errepidean autoak gelditu egiten ziren kartzelara begira. Zeruan, berriz, Poliziaren helikopteroa bueltaka zebilen.

Halako batean galeriako atea zabaldu zuten, baina kosta egingo zitzaien sartzea, baten batek burua agertu orduko goiko solairutik harrapatzen genuen guztia botatzen genuen-eta; esate baterako, komuneko azulejuak eta komunontzi bera ere bai. Ondoren suhiltzaileak ere agertu ziren, zaborrontzi birrindu eta ia urtuetan irauten zuen sua amatatzeko. Eta haien atzetik istiluen kontrako polizia, kaskoa buruan, ezkutua besoan, gomazko pelotak jaurtiz. Kezko poteak ere bota zituzten, eta ateko barrikadatik sortzen zen kea ia iraungita bazegoen ere, kezko poteek eragindako itolarria bueltatu zen berriro. Guk, hirugarren pisuko barandaren kontra somierrak jarri genituen, polizien pilotetatik babesteko.

Eguerdi aldera, zeldetara sartu ginen eta poliziak gure bila igo ziren. Zeldetatik ateratzean borrakadaren bat eta ostikoren bat jaso genuen, baina okerrena tentsioak eta keak eragindako buruko mina izan zen. Geunden bezala, autobusera atera gintuzten, lehenago sekulako araketa jasan ondoren. Kartzelako korridore guztietan ura zegoen, sua amatatzeko erabilitakoa, jakina. Arroparik ez ezer hartu gabe, aurpegia, kamiseta eta prakak belztuta eta hauts eginda, Puertorako bidean geunden.

Gauerako Puerton ginen. Hara heldu eta zuzen bakartze modulura eraman gintuzten, zigortuta. Akorduan dut nola utzi nuen almohada lehenengo gauean, ikatza lez. Moduluetako lagunek bertan geundela jakin zutenean, euren arropak bidali zizkiguten, eta, gutako bakoitzaren neurriak gutxi gorabehera jakinda, baikoitzari neurrikoak.

# XIII

Ostera ere heldu zitzaigun modulu aldaketa eta, geure gauzak batuta, beste leku batzuetara joan behar izan genuen. Rubixo bigarren modulura, Txalaka eta Fran lehenbizikora, Joseba isolamendura eta Kroke eta biok hirugarren modulura. Patiora irten ginenean, bertan beste lagun bat geneukala konturatu ginen: Manu Azkarate Ramos, espetxe hartara eraman berria eta erizaindegian sartu zutena. Lagun alaia hauxe ere. Galdetu diot:

–Zer moduz zaude?

–Ondo esan beharko dugu, ez? –berak.

–Eguzkia faltan botatzen duzu, ala?

–Isilik egon zaitez –erantzun dit–, Carabanchelgo ospitale uher horretan gauzak gaizki jarri dira, gero! Dena itxi dute, inor patiora ez irteteko.

–Noiz etorri zara hona? –galdetu diot.

–Orain dela hiru ordu edo.

–Ba, gu oraintsu aldatu gara galeriaz. Oraindik ez ditugu gauzen erdiak ere ziegan egokitu.

–Non dago zuen ziega? –galdetu du Manuk.

–Ikusten duzu leiho batean Euskal Selekzioaren kamiseta bat? –seinalatu diot.

–A, orduan, galeriaren erdi aldean zaudete.

–Bai, hortxe-hortxe.

Beste euskal aldarrikapen asko bezala, Euskal Selekzioarena ere Estatu espainoleko kartzela askotan dago, gure buruan eta soinean. Kaleko lagunek oparitu zidaten niri Selekzioaren kamiseta. Euskaldunon aldarrikapena ez ezik, herrira hurbiltzen gaituen zerbait ere bada. Etxetik mila kilometrora, kamiseta bat, liburu bat, gauza txiki asko ere baliatzen dituzu urrutiko lur hari heltzeko. Izan ere, horretara gogoan duzun hori, ikutu ezin den hori baino gehiago da zure herria.

Manuk gaixotasun larria zeukan, zain esofagalak, horregatik zegoen erizaindegian. Carabancheleko erizaindegitik lekualdatu zuten Granadakora. Izan ere, Madrileko Auzitegiko epaile Manuela Carmenak askatasuna ematea erabaki zuenez, Espetxeetako Erakundeek beste probintzia batera lekualdatu zuten, Madrileko erabakia bertan behera uzteko. Horrela, Manuren askatasuna atzeratzen joaten ziren. Izan ere, lurralde epaileen ebazpenak oso ezberdinak izan zitezkeen kasu berberari dagokionez; Manuren kasuak erakutsi zuen bezala. Esate baterako, zigorra laburtzeari dagokionez, antzeko kasuen aurrean, urteetako aldea gerta zitekeen kartzela batetik bestera, epaileen interpretazio desberdinak zirela eta. Ondoren, lurralde epaileen erabakiak bateratzeko, Madrilgo Auzitegi Nazionalean ipini zuten Espetxe Zaintza Epaitegi bakarra, eta gaur egun epaile bakar batek erabakitzen du euskal preso guztion askatasuna. Haren eginkizuna zigorrak ahalik eta luzeena jotzea da. Euskaldunoi, apaltzen ez denari, ahalik eta zigorrik luzeena ezartzea, horixe da etsaiaren eta haren egitura errepresibo guztien helburua. Zigorrik luzeena eta gogorrena.

Horregatik, helburu horren aurkako borrokak ere latzak dira ezinbestean. Gose grebarekin batera, txapeoa da borroka tresna bakanetako bat. Eta gose grebak bezala, txapeo asko eginda gaude gu. Batzuk laburrak, besteak luzeak, oso luzeak. Luzeena, hain zuzen, 1984an Herreran egin genuen hura izan zen.

Otsaileko egun batean, goizeko zortzietan kartzelako bozgorailuek esnatu gintuztenean, ez ginen ohetik altxatu ere egin. Ordu horretan kartzeleroek lehenengo kontaketa egiten zuten eta guk zeldako hormaren parean zutik egon behar genuen. Kartzeleroak, galeria bakoitzeko lehenengo zeldako lagunaren jarrera ikusi, mehatxu egin eta zeldan itxita utzi ondoren, bigarrenekoak gauza bera egin zuela ikusi zuen, eta hirugarrenekoak berdin, eta denek, hiru moduluetan.

Hala, zeldan itxita, igaroko genituen hurrengo 10 hilabeteak, hasierako hirurak patiora ere irten gabe. Ondoren, ordubetez ateratzen hasi ginen, eta zeldara bueltatzeko banan-banan igotzera behartu nahi gintuztenez, guk planto egiten genuen, Guardia Zibila etorri arte. Zeldetarainoko korridore bat osatzen zuten guardia zibilek eta guk erditik pasatu behar izaten genuen egunero, borrakada bat ez bazen, ostikoren bat jasota. Ez genuen inolako agindurik onartzen, miaketa egin nahi zigutenean, uko egiten genuen, nahiz eta batzuetan indarrez eta arropak urratuz biluzten gintuzten, eta zeldako miaketa egiten zutenean dena hankaz gora uzten zuten. Hilabete horiek guztiak bisitarik gabe ere igaro genituen. Gutunen zentsura genuen, eta oro har komunikazioak kontrolpean. Senideen gutunak baino ez zizkiguten baimentzen, eta igorlea jarri barik heltzen ziren gutunak ez genituen jasotzen. Atxikiak gelditzen zirela zioen jakinarazpena ematen ziguten.

Kartzeleroekiko enfrentamendua gero eta handiagoa zen. Euren probokazioei guk ahal genuen moduan erantzuten genien; esate baterako, orduero hiru moduluetako zelda guztietan ate joka. Zeldetan sortzen zen burrundara ikaragarria zen. Hala sumatzen genuen zeldetatik, eta zeldetatik kanpo, korridoreetan, askoz ikaragarriagoa izan behar zuen.

Esan bezala, denbora hartan guztian ez genuen bisitarik eduki; hala ere, senideak hara joaten ziren astero. Eta euren adore oihuak entzuten genituen barrutik. Kanpoaldera ematen zuten zeldetako leihoetan izaraz egindako pankartak eta ikurrak jartzen genituen senideak inguruko zelaietan ziren bitartean. Eurek gure izenak oihukatzen zituzten, eta alde egin behar zutenean, agur moduan, autobusetako klaxontzarra jotzen zuten. Horrela hasi ziren Herrerako martxak.

# XIV

Egunak joan, egunak etorri, hor gabiltza hara eta hona, gure patioko ibilerak egiten, Manu, Kroke eta hirurok. Kalerantz zuzen begiratzen bazenuen, patiotik hurbil ikusten zenuen ospitalea. Ordurako bagenekien Granadako espetxe probintzialaren kokapenaren berri. N-323 errepidean dago, hiriburu barnean. Espetxearen mugak hauexek dira: iparraldean, Ribera del Beiro kalea dauka; hegoaldean, Concepción Arenal kalea; ekialdean, Poliziaren Parke Mobila, eta mendebaldean, Madrilera doan N-323 errepidea dago. Gazteen moduluan bezala, guardia zibilen garitak gure patioaren erdi-erdira ematen zuen eta gau gutxitan egoten zen han inor. Ez zen berdin gertatzen bazterretako garitetan, haietan iraunkor zeuden eta. Kartzelak gutxienez errepideko puntu bi ukitzen zituen, nik ikusi nuenaren arabera, askotan entzun bainuen autoen eta motorren burrunba, baita ibilgailu horiek ikusi ere, eta adin guztietako jendea kartzela aurretik pasatzen zenean, oinezko horien ahotsa entzuten nuen. Zarata horiek, ahots horiek entzutean konturatzen zara askatasuna zein hurbil dagoen eta noraino urratu dizuten. Hori gogoratzean, hain hurbil sumatzen duzun askatasun hori gero eta urrunago dagoela pentsatzen duzu, badakizu. Hamahiru urte igaroak ziren ordurako 1980ko uztailaren 8ko gau hartatik. Hamahiru urte, askatasuna gero eta urrunago eta aldi berean, egun haiek gogoan, oso hurbil, ahaztu ezineko moduan.

Gaueko ordu txikitan Poliziaren danbatekoek esnatu ninduten. Etxeko atea zulatu eta trumilka sartu ziren. Ikaraz bete zuten ingurua. Pentsa aitak eta amak zer igarriko zuten. Ia arropak janzten utzi barik ere, kalera atera ninduten, baina arinago amak niri zamarra bat soinean ipini zidan, harekin batera bere babes eta maitasun guztia eroatea nahi balu bezala. Agurtu egin nituen gurasoak, modu arinean, halabeharrez. Etxea ez

zuten arakatu. Atarian bertan konturatu nintzen taldeko beste kide bat ere atxilotuta zeukatela, kalean, eta kalera irtenda, bertan ikusten ziren autoetan lagun gehiago zeudela ohartu nintzen. Ni beste auto batera sartu ninduten eta beste kide baten etxe ondora joan ginen denok. Handik, infernura: Indautxuko komisariara. Bidean, bihotz taupaden tarrapata gero eta arinago igartzen nuen.

Komisariara sartu orduko, lehenengo eskailerak igotzean, polizia batek barrabiletatik heldu eta sekulako txatxamurkada sentitu nuenean jakin nuen zer helduko zen atoan, baina ez noraino. Berehala izan zen lehenengo galdeketa, gela batean, bospasei txakurren erdian. Paper bat eman zidaten ETArekin nituen harremanen berri bertan idazteko. Nik ukatu egin nituen harreman horiek eta berba egiten amaitu baino lehen kolpe zaparrada jausi zitzaidan gainera, ukabilkadak eta ostikoak, sabela eta barrabilak guztiz minduta, arnasestuka gelditu arte. Ondo gogoan ditut haietako batzuen zaldiz ibiltzeko botak eta batez ere haiekin saihets-hezurretan jo zizkidaten kolpeak. Eta ez zidaten berehalakoan atsedenik emango, atoan abdominalak egitera, kokoriko ibiltzera eta ariketa fisiko latzak egitera behartzen ninduten eta. Bitartean, gorputz osoan ukabilkadak jotzen eta era guztietako bihurrituak egiten zizkidaten. Behin, zakila atera zidaten eta bakailaoa zatitzeko tresnaren antzeko batean ipini nahi izan zidaten: «Xerrak egingo ditugu zure zakilarekin», esaten zidaten, tresnatzar harekin ebakitzeko plantak egiten zituzten bitartean. Ez dauzkat ahaztuta euren barreak.

Galdeketen ostean, ziega zikin batera eroaten ninduten, ugerra eta odol orbanak gelako hormetan zehar zabaltzen ziren bertako dekoratua balira bezala. Batek daki noren arrastoa ziren: eskale batenak? Prostituta batenak? Kide batenak? Hainbat jenderenak... Ziegan argia amatatu barik uzten zuten beti. Laster

galdu nuen denboraren nozioa zementuzko ohe hartan. Eman zidaten manta ziztrin bat ere kendu egin zidaten.

Hurrengo galdeketetan bainuontzia ere egingo zidatela esan zidaten, baita barratik eskegi eta *potro* esaten zioten beste astakeriaren bat egingo zidatela ere; izan ere, mehatxuak etengabeak eta mota guztietakoak ziren. Badirudi arreta gehien ematen duena tortura fisikoa dela, baina psikologikoak arrasto luzeagoa uzten du: umiliazioek, sorrarazten saiatzen zaizkigun erruduntasun sentimenduek... Horretarako inkomunikazio egoera oso aproposa da, zure familiaren aurkako mehatxuak egiteko, atxilotutako lagunen arteko kontuak korapilatzeko, batek esandakoaren gaineko gezurrak zabalduz eta elkarren arteko mesfidantza sorrarazten saiatuz.

# XV

Patioko ibilaldian eta solasaldian geundela, hala esan zidan Manuk:

–Erizaindegitik, bertan daukazu kalea, etorri nahi duzunean eta ikusiko duzu zein hurbil dagoen dena.

Baina beldur nintzen, zeren galeria hartan zegoen kartzeleroa konturatzen bazen, nire asmoa bertan behera gera zitekeen. Beraz, galdetu nion:

–Nor bizi da azkenengo gelan, leihoan haizagailua ipinita daukan horretan?

Ez zekiela esan zidan, ez zuela gure galeria ezagutzen.

Hurrengo egunean, galeriako ate guztiak zabaltzen ari zirenean, azkenengo zeldara hurbildu nintzen, haizagailua zuen hartara, hain zuzen. Bertan zeuden bi lagunak zeldatik ateratzear zeuden eta azken txoko hura garbitzen zebiltzan. Euren azentuagatik, hegoamerikarrak zirela pentsatu nuen. Esan nien:

–Nire ama agurtzeko baimena emango didazue? Hemendik agurtzen saiatuko nintzela esan diot.

Eta beraiek esan zidaten:

–Bai, mutil, sartu zeldara eta agurtu zeure ama.

Leiho hartatik zer ikusi ahal zen jakin nahi nuen, batez ere errezintoaren neurriak sumatzeko. Harritu egin ninduen hain distantzia laburra egotea, eta hala esan nien Kroke eta Manuri, patioan eurekin topatu nintzenean.

Beren zeldako leihotik begiratzen utzi zidaten presoei esandako gezurrak amaren bisitak ekarri zizkidaten gogora. Beti pozik etortzen zen, eta ez zitzaion tristurarik igartzen, triste agertzeko motiborik falta ez zeukan arren. Denbora luzean ez nuen atzera ikusiko. Hobe denak ere berriro ikusiko ez bagenitu. Zenbat txakurkeria egin diguten, bai aurrez, beren boterea eta indarra baliatuz, bai atzetik ere, beren izaera eskasa erakutsiz. Eta guk gure baliabide urriekin erantzun behar. Batzuetan zuzen, beste batzuetan ez hainbeste, baina betiere, oro har, kalte handiena jasanda, kalte fisikoa eta emozionala. Zenbat borroka egin ditugun, zenbat planto eta zenbat txapeo luze. Zenbat barau egun eta zenbat gose greba amaigabe.

Askotan galdetu izan didate zenbat gose greba egin dudan, nik kartzela urte dezente neramatzala, lagun sartu berriren batek, edo elkarrizketak egin izan dizkidatenean. Nik gutxi gorabeherako kopuru bat ematearren, hamahiru inguru erantzun izan dut. Luzeenen kopurua hor nonbait ibiliko da. Baina laburrenak kontatuta, askoz gehiago dira, batzuk kolektibo osoak eginda eta beste batzuk Puertoko edo Herrerako bakartze moduluetan eta sakabanaketaz gero kartzela bakoitzean egiten zirenak. Gogoan dut, beharbada hasierakoak direlako, 1981ean eta 1982an Puerto Iean egin genituenak. Horiek baino lehen, Soriako espetxean, astebeteko bat egin genuen Tomas Linazaren estradizio mehatxuaren aurka. Urte hartan Carabanchelera eraman ninduten, epaiketa batera, eta handik, ehunetik gora lagunekin batera, Puerto Iera, artean Andaluziako herri hartan zegoen bakarrera, alegia, presondegi zaharra ordurako itxita zegoelako. Hurrengo urteetan Puerto II eta Puerto III ere eraikiko zituzten.

Uda hartan, Puerton, 26 eguneko gose greba egin genuen. Oker ez banago, irailean bukatu genuen, eta abenduan beste bat hasi genuen, 1982ko urtarrilera arte; 36 egun iraun zue-

na. 1982. urtean bertan beste bat egin genuen, irail edo urri aldera. Beste 34 egun baraurik, gorputzean ura besterik sartu barik. Kontuak aterata, urtebete pasatxoko epean egunen laurden batean baino gehiagoan jan barik egon ginen. Egun osoa patioan itxita ematen genuen, inongo gelatara sartzeko aukera barik, baita gose greban geundenean ere. Negu gorrian komunera sartzen ginen hotzetik babesteko, baina berehala agertzen ziren kartzeleroak handik botatzeko. Gose greban askoz gogorragoa da hotza, gorputza kaloria faltan dagoelako. Kaloria, bitamina, kaltzio eta elementu guztien faltan. Nik haginetan nabaritu nuen, puska batzuk jausi zitzaizkidanean. Gogoan dut 36 eguneko gose greba amaitzear genuela, senideen bisitaren bezperan, dutxara sartu eta ur beroa kendu zigutela. Urtarrila zen, eta gure protesta gorabehera, matxuraren bat izango zela esan ziguten aitzakia modura. Kasualitate galanta. Hurrengo egunean bisitara etorri ziren senideak gure itxura ikusita ikaratuta itzuli ziren Euskal Herrira.

Lehenengo gose greba egin nuenean, baten batek esan zidan hirugarren egunetik aurrera ez dela goserik sentitzen. Ni gose greba batzuk eginda nago eta lehen egunetik amaitu arte eta ostean ere gose ikaragarria pasatu izan dut beti, gero eta handiagoa. Gosea, antsia eta obsesioa. Kalean nengoela, jateko oso mizkina nintzen, baina gose grebetan janarekin amestu ostean milikeria joan zitzaidan. Sekula ere ez naiz jatuna izan, ez dut gustuko izan samaraino betetzea, ezta hurrik eman ere, baina gose grebetan etengabe etortzen zitzaizkidan gogora etxean erdizka utzitako dilista edo patata plater haiek. «Zelan utziko duzu hori?», esaten zidan amak. Nik, gose grebako hirugarren egunerako, neure artean esaten nuen: «Orain harrapatuko banu...!», burua txipiroiz edo are azalorez beteta. Aldizkarietako errezetak irakurtzen genituen eta amets egiten genuen haiekin, itzarrik ere.

Gose greba luzea denean egun batetik bestera ahultasuna areagotzen igartzen da. Eskailera batzuk igotzea bera esfortzu itzela da. Egunaren arabera, zorabioak ere ohikoak dira. Ur asko edatea oso garrantzitsua da, giltzurrunak martxan edukitzeko, baina azkenean gorputzak ez du onartzen eta behartuta edaten dugu. Lagun batzuek hasieratik izaten zuten arazo hori, eta besteok haien atzetik ibiltzen ginen edateko esaka. Esan bezala, gosea ez da desagertzen jaten hasita.

Gose greba amaitu berritan ez da komeni asko jatea, baina kantitate handia sartuta ere, berehala itzultzen da gosea. Behin, gose greba bat bukatu genuen gauean, zeldan, lo geratu nintzen eta gauerdian esnatu nintzen, ezpain ertzetik adurra zeriola. Nire ametsean gose grebak jarraitzen zuen, eta esnatzean pentsatu nuen noiz arraio bukatuko ote zen, ordu batzuk lehenago bukatua zela konturatu nintzen arte. Ohetik jaiki eta mahai gainean nuen esne kondentsatu potea zabaltzera joan nintzen, baina ez nuen irekitzekorik. Mahaia burdinazkoa zen, zoruan finkatua. Esne potea hartu eta ertzeko puntan kolpeka hasi nintzen, zulo bat egin arte. Sekulako zalaparta sortu nuen gaueko ordu txikitan, baina antsietatea baretu egin nuen.

Astakeria galantak egin izan ditugu gose greben ostean. Kartzelako ekonomatuan ez zegoen egoera horretarako elikagai egokirik, eta zegoena erosten genuen: sardina, berdela edo hestebete latak, ali-oli saltsa litroka egiten genuen... eta berehala nabaritzen genuen hura gorputzean, egun gutxian ikaragarri gizenduta. Garai hartan artean janariak sartzen uzten ziguten. Behin, gose greba osteko lehenengo bisitan, amak paketean beste hainbat jakirekin batera ezkailuak eraman zizkidan plastikozko ontzitxo batean. Paketeak miatzen zituen kartzeleroak esan zion: *«¿Son boquerones, señora?».* Amak baietz esan zion, eta pentsatu zuen zerbait gehiago ikasi zuela egun hartan: antxoak ere errekan ibiltzen direla.

## XVI

Granadako espetxean, espetxe guztietan bezala, "merkatua" zegoen, eta bertan denetik saltzen zen. Presoek, gauzatxoak salduz diru apur bat eskuratzen zuten gauza horien salmentarekin. Ganibetak ere saltzen zirela jakin genuen guk eta, orduan, ihesaldi baterako ondo etorriko litzaizkigukeela pentsatuta, erosi ala ez eztabaidatu ondoren, erostea erabaki genuen; gutako batek erosi zuen bat, erabilera anitzekoa, hau da, askotariko tresnak dituen horietakoa. Botiletako kortxoa ateratzekoa ere bazeukan, besteak beste. Gero, nik gorde nuen, ez baitzen oso handia eta ihesaldirako baliagarria izango baitzitzaigun.

Egia esateko, ganibet hura Manuk guri interesatzen zitzaigun galdetu ostean lortu zuen. Baietz esan genion guk, horrelako tresnak ez daudela sekula soberan, are gutxiago zeure burua epe laburrean harresiaz bestaldean ikusteko asmoz bazabiltza. Baina Manu laster eramango zuten Badajozera. Izan ere, bere gaixotasun larria zela-eta dantzan ibili zuten kartzela batetik bestera. Denbora bat igarota, Manuk bere eskaera egin ostean Granadako epaileak askatasuna eman baino lehenago, Badajozera eraman zuten. Kartzelatik atera baino lehen, gurekin harreman ona zuen preso sozial bati esan zion non zegoen ganibeta, guri jakinarazteko. Horrela eskuratu nuen.

Berriro ere, modulu aldaketa datorkigu. Modulu aldaketak baino ez ditut kontatu; galeria aldaketak –modulutik irten barik– astero izaten ziren-eta garai hartan. Oraingoan, Joseba lehen modulura doa, baita Txalaka ere, Fran hirugarrenera, Kroke bigarrenera, Rubixo isolamendura eta niri gazteen modulura noala diostate. Hala izanda, nire begien aurrean izango nuen kontrolatu behar nuen guztia. Puntu horretara helduta, gauza biren arteko hautua egin behar nuen: dena utzi eta behin betiko ahaztu ala aurrera egin. Zirt edo zarteko erabakia har-

tu behar nuen. Nire kartzelaldia laster hamahiru urtera helduko zen, eta ordurako urte asko kendu zizkidatela pentsatu nuen. Bestalde batetik, otu zitzaidan dena ondo irteten bazen, neure bizi osoa klandestinitatean eman beharko nuela. Beraz, nituen aukera biak latzak ziren. Kartzela ezagutzen nuen eta ondo nekien zertan den bertako bizimodua, baina erbestea ez, eta neure errespetu osoa diet bizimodu horretan dabiltzanei. Dena ondo hausnartu ondoren, zalantza txikerren bat etorri zitzaidan burura, hala nola Guardia Zibilak edo Poliziak harrapatuz gero desagerraraz nintzaketela, edo "ezbeharren" bat gerta zitekeela. Burua makina bat da, dena prozesatzen du eta zenbat gauza kontuan eduki behar dituzun ohartarazten zaitu.

Diodan hau ez da neure kontaketari film baten antza emateko, ezta hurrik eman ere. Lasa eta Zabalaren kasua ez zen asmakizuna izan, ezta Popo Larrerena, Joxe Migel Etxeberria *Naparra*rena edo Eduardo Moreno Bergaretxe *Pertur*rena ere. Horiek frankismoaren osteko kasuak dira edo, nahiago bada, «demokraziakoak». Aurrekoak ehunka konta daitezke, batez ere 36ko gerratik aurrera. Gaur egun gorpu asko agertzen dira hainbat zulotan, eta bere buruari demokratikoa esaten dion Estatuak, lan horiek erraztu beharrean, oztopatu egiten ditu... Gerra garaian, zenbat presori libre irtengo zirela esan eta behin kartzelako atea zeharkatuta, tirokatu edo areka batean fusilatu ez zituzten, ba? Gainera, legearen gerizpean egiten zituzten erailketa haiek, *Ley de fugas* delakoa aplikatuta; preso haiei askatasuna ematen zietela esan, eta haiek hil ostean ihes egiten harrapatu zituztela esaten zuten jendaurrean. Gelditzeko aginduari jaramonik egiten ez zuen presoa tirokatzea baimentzen zuen lege hark.

Ezkaba mendiko San Kristobal gotorlekuan zeuden ia 800 presok benetan egin zuten ihes; beraz, errazago izan zuten faxistek *Ley de fugas* famatua aplikatzea, gogotsu aplikatu ere: 585

harrapatu egin zituzten, eta 187 erail lege haren izenean, kartzelako egoera latzaren ondorioz ahul, ihesean ezer jan barik, gaizki jantzita eta arma barik.

Denboran hurbilago, 1976ko apirilean, Franco hil ostean, Segoviako kartzelatik 29 presok ihes egin zuten. Gehien-gehienak euskaldunak, ETAkoak, hain zuzen. Haietako gehienak ere harrapatu zituen Guardia Zibilak muga inguruetan sakabanatuta, eta bat, Oriol Sole katalana, erail. Espainiako historia iluneko trantsizio garaiaren hasiera zen.

# XVII

Gaualdian txiza egitera altxatzen nintzenean, kartzeleroen eta guardia zibilen garitari begiratzen nion. Konturatu nintzen patioko kamera nire ziegarantz begira edukitzen zutela; beraz, ziegako barroteak mozten banituen, ikusiko nindutela pentsatu nuen. Artean nire aukera bien arteko zuzenena zein izango zen hausnartzen jarraitzen nuen. Eta gogoeta luzearen ondoren, bigarren aukerari eutsi nion. Aurrera egingo nuen, aspalditik ia atsedenik hartu barik ninduen asmoari bide emanda. Atsedenik hartu gabe jarraitzeko prest nengoen, loari orduak osten, eguneroko bizimoduari arreta kentzen, buruan ia beste ezer kabitu ezinda. Sortu zitzaidan egonezina ikaragarria zen.

Patiotik begiratuz konturatu nintzen nire ziega sabai-leihoaren azpi-azpian zegoela. Uso piloa sartu eta irteten ziren; usategia zen. Sabaileihoak kristala zuen, kristal alanbreduna, eta argia sartu behar zuen ganbara hartara. Hala eta guztiz ere, hori egiaztatzeko baten batek sabaia apurtu beharko zuen, eta sabairaino igotzeko nahiko komedia egin behar ziren.

Norberaren ziegan gauza gutxi zegoen, baina horiekin moldatu behar. Ohe gainean zeldako burdinazko armairutxoa jarri eta eskuak luzatuta hurbildu nintzen sabaira. Eta oparitu zidaten labanak zituen funtzio guztiak erabiltzen hasi nintzen. Laster hasi ziren ganbarako teila koloreko babesgarrien zatiak erortzen, eta gero baita igeltsua eta adreiluak ere. Ez zen nik uste nuen bezain gogorra. Oso erraz egin nuen zulo txikia, eta behin zuloa eginda, sabaileihotik argia sartzen zela ikusi nuen, baina burdina borobil bat ere bazegoen. Ahal bezain arin, eskumako eskua sartu nuen zulotik, burdina ukitzeko eta, horretara, han zer zegoen jakiteko. Bultza egin nuen, baina burdina ez zen mugitzen. Ez zen oso lodia, zortzi milimetrokoa, gutxi gorabehera. Zulo txikia zarratu egin nuen ostera ere, gau horretan ez bai-

nuen irten behar; hartara, berriro igeltsu eta ur apur batekin masa egin eta zuloa estali nuen. Handik egun bira aitak etorri behar zuen aurrez aurrekoa egitera eta hura ikusteko gogo handia nuen.

Hamabost egunean behin izaten nuen nik senideen bisita. Beti astegunetan etortzen ziren; lineako autobusa hartu eta geldialdi ugari izaten zuten bidean. Euskal Herritik arratsaldeko 17:00etan irteten ziren eta Granadara goizaldeko 05:00etan heltzen. Ordu horietan, jakina, tabernak-eta itxita zeuden; beraz, bisitara arte kale gorrian egon behar izaten zuten.

Espetxeko mintzategiak alde bitan banatuta zeuden; gutxi batzuk bakartuta zegoen jendearentzat ziren, bakartze gunearen aldean; beste batzuk, berriz, gune orokorrean zeuden. Mintzategi gutxi zegoen, eta bisitak astean zehar egiteko zeuden antolatuta.

Aurrez aurreko bisitetarako, berriz, gela bi erabiltzen ziren, biak ezker-eskuma zeudela. Gelek ohe, dutxa eta komoda bana zeukaten. Horietan egiten ziren aurrez aurreko guztiak, baita gurasoekin ere. Esaten genuena entzuteko mikrofonorik ez zuten behar; izan ere, leiho bat zegoen, eta bertatik ia dena entzuten zen.

Etorri zen aita bere anaia batekin. Tio Pedro zen, oso maite nuen osaba, eta han egon nintzen eurekin mintzatzen. Aitari neure erlojua eman nion, pila aldatu behar zuela esanez. Berak zeukana eman nahi zidan, baina ez nion hartu. Ez nuen haren beharrik eta pentsatu nuen berak nik baino gehiago beharko zuela. Etengabe begiratzen nion aitari, haren irudia nirekin eramateko. Ez nekien zer gertatuko zen nire ihes saioarekin. Gogorra egiten zitzaidan aitari ez kontatzea, beti lagun arteko konfiantza izan dugu eta. Berak beti esaten zidan egin beharre-

koa egiteko; horregatik, ziur naiz, orduan ezer esan ez bazidan ere, haren elkartasuna beti egon dela nire ondoan. Ematen zuen aitak eta osabak ez zidatela ezer berezirik igarri. Hartarako neure ahalegin guztiak egin nituen, eurak ardura barik joan zitezen etxera.

Aitak ikusten ninduen bakoitzean, benetako jaia izaten zen berarentzat. Askotan egiten dut neure artean gurasoak zer gauza gutxirekin konformatzen diren, eta hala da. Lagun batzuek, hainbat motibo direla eta, ez dute gurasoak ikusteko aukerarik, eta ez gara heltzen euren larruan ipintzera, ezta heldu nahi ere. Eta zenbat gauza ez ote dira haien burutik pasatuko. Ez dugu konformistak izan behar. Horregatik, neure ametsetatik ere ez nuen baztertzen kartzelatik alde egitea. Denek ez dituzte aukera berdinak izaten eta hori ere ulertu egin behar da. Zailtasun itzelak ipintzen dizkigute urteetan zehar. Beraz, izan nuen aukera txikerrenean aurrera egin nuen, nire bizitza gogorragoa non izango zen jakin barik, espetxean ala kanpoan. Baina zementuzko kutxatzar hartatik irtetera behartuta sentitu nintzen.

Erakundera sartzen zarenean badakizu hiru aukera dituzula, lehenago edo geroago iritsiko direnak: alde egitea, urte luzetako kartzelaldia edo heriotza. Ez dute atzera bueltarik. Nik ordu arte emandako urteak ere hala ziren, eta kartzela ondo ezagutzeko nahiko eta larregi. Erabakita neukan ahal izanez gero hanka egitea. Horrek ez zuen esan nahi, baina, bizimodu eder eta lasaia izango nuela. Izan ere, iheslariena ere ez da bizimodu samurra, eta askoren kasuan, heriotzaren aukera ere badago. Dozenaka lagun gelditu dira bidean urte hauetan. Denak ditut gogoan, haietako batzuk betiko adiskideak.

Ondo akordatzen naiz *Gogor* herriko lagun minaren heriotzaren berri izan nuenean. Urte asko joan dira ordutik, baina atzo bertan izan balitz bezala daukat gogoan. 1981eko urriaren

21ean izan zen. Puertora iritsi eta hiru hilabete igarota, telebistak erakutsi zuen haren argazkia eta mandarri batek bezala kolpatu gintuen berria eman: Andres Izagirre Gogorza eta Josetxo Jauregi hil zituzten Guardia Zibilaren kontrol batean, Orereta inguruan.

Urte berean, otsailean, etsaiaren segada batetik ihes egitea lortu zuen Madrilen. Segada berean haren lagun Joxe Arregi harrapatu zuten. Tortura eta kartzela ziurtatuta zituen. Izan ere, espero izatekoa zen moduan, torturatu egin zuten, kartzelara sartu eta berehala hiltzeraino torturatu ere. Ordutik, otsailaren 13a Torturaren Aurkako Eguna da.

Ipar Euskal Herrira ihes egin zuenean ezagutu nuen nik Gogor, herrian akaso inoiz ikusita neukan laguna, 77ko Amnistia Legea baino lehen. Lege hura gorabehera, ez zen herrira itzuli, eta ez zen itzuliko bere gorpua guardia zibilez inguratuta eraman zuten arte. Aukera nuenean, bisita egitera joaten nintzen Ipar Euskal Herrira, eta atxilotu nindutenean ez nuen imajinatu ere egin ez nuela gehiago ikusiko. Nirekin daukat 25 urte geroago, nik 26 kartzela urte bete nitueneko ekitaldi batean Zornotzan irakurri zuten idatzia:

«Gogor maitea, lagun hurkoa!

Pasioz natorkizu batu garen hitzordu honetara. Iraganera buelta eginda, paper honetan berba batzuk ipintzera jarri naiz. Aldi batean, zenbatetan ikusten genuen elkar! Zure urtebetetzean, beti, Ipar Euskal Herrian, Hendaiako hondartza ondoko etxean, iheslari zinela. Han esan zenidan: 'Gura duzunean, behar duzunerako, hemen daukazu etxea'. Neurri bako eskerrak, lagun.

Puerto de Santa Mariako kartzelan preso nengoela, ezustean hartu ninduen Donostiako bideko autopistan hildako bi izan

zirela entzuteak. Guardia Zibilak ipinitako kontrol batean hil zituzten lagunetako bat zu izan zinela jakitea kolpe latza izan zen niretzat. Zugaz batera hil zuten Josetxo Jauregi ere gogoan daukat, zelan ez.

Jakinean nengoen aspalditik kartzelaren eta torturaren bortizkeria ezagun zenituela, etsaiaren erpeetan egun mingotsak igarota zeundela.

Kartzelako lehenengo urteetan, Carabanchelgo espetxean nengoela, zure neska-lagunak eskutitz bat idatzi zidan, baina ez nuen erantzuteko adorerik izan. Oso denbora laburra pasatu zen zuena gertatu zenetik. Dena dela, astindua gainditzen zebilela esan zidan, hori emakume adoretsua!

Ez dakit zelan dagoen zure ama Pakita, hainbeste laztan eman zizkizuna. Ez dakit ezer ez, laster kartzelan 26 urte beteko ditut eta. Zure anaia-arrebekin egon nintzen, bisitan etorri zitzaizkidanean. Gogo handia daukat eurekin egoteko.

Amaituko ditut berba hauek, Andres, gure ondotik ez zarela, ez zaretela aldendu jakinaraziz. Zuen zintzotasuna gugan gelditu da. Gustuko zenituen berbekin esango dut: aurrera eta garaipena lortu arte!

Zure betiko laguna».

# XVIII

Beste garai batera eraman ninduten pentsamenduak alboratu eta logura kentzen zidan kontu horri heldu nion atzera. Zein kartzelerok egiten zuen kontaketa begiratu behar nuen. Ihesaren egunean Herrera de la Manchan ezagututakoetako bat egongo zela uste nuen, Mezquino, alegia. Aurreko egunean bera egon zenez, egun horretan ere bera etorriko zela pentsatzen nuen. Gau horretan bera etortzea nahi nuen; hartara, nik espetxetik alde egitea lortzen banuen, berari espediente bat egingo baitzioten. Kontaketa nork egiten zuen begiratu eta ez zen bera, kartzelero lodi bat baizik. Eztarria gero eta lehorrago neukan, eta alkoholik gabeko hainbat garagardo edan arren, ez nuen egarria asetzen.

Azken aldiz jarri nuen armairua ohe gainean. Kanpora irteteko asmoarekin, goiko igeltsuzko enplastua kendu nuen eta konturatu nintzen aurretik ikusitako burdin borobila beste burdin batzuekin gurutzatuta zegoela. Eraikuntzan zementu gainean jartzen diren sareak bezalakoa zen, karratua, baina burdinak ez zeuden alanbrearekin lotuta, baizik eta gurutzatzen ziren tokietan soldadurak zeuzkan. Haren luzera eta zabalera folio arrunt batenak ziren gutxi gorabehera. Handik ez zen inor pasatuko.

Gelako mahaia mozten hasi nintzen, haren burdin handi bat goiko burdin soldatuak askatzeko palanka modura erabiltzeko, baina denborak aurrera egiten zuen eta utzi egin nuen zeregin hori. Mahaiaren egiturak "U" itxura zuenez, formikazko ohola kendu eta hormatik askatzea erabaki nuen. Berehalaxe egin nuen.

Gora igo eta mahaiaren burdinarekin goiko burdinan palanka egiten hasi nintzen, indar handiz bultza eginez, soldadurak askatzeko. Soldadura bakoitza askatzean, ikaragarrizko danbatekoa

entzuten zen, eta ondoko zeldako gazteek zertan ari nintzen susmatuko zuten, baina isilik geratu ziren. Beti errespetatu izan naute. Zenbait burdina libratu eta burua sartu nuen, ozta-ozta. Hain estu ezen belarrian neukan arrakada han galdu nuen. Handik burua sartuta, goiko ganbara ikusi nuen. Baina beste burdin bat askatu beharko nuen ondo pasatzeko. Goiko sabaia gainera eroriko zitzaidala pentsatu nuen. Ez nengoen oker. Beste burdina bat askatu behar nuen arazo barik ganbarara igotzeko, eta ostera ere mahaiaren burdinarekin indar egiten hasi nintzenean, han jausi zen jaustekoa; adreiluak, igeltsu zatiak, zementua... denetarik. Ohe gainera erortzen zenaren zarata moteldu egiten zen, baina ohetik kanpo jausten zenak zarata ikaragarria egiten zuen. Edozelan ere hango gazteak bizitasun handikoak ziren eta edozein ordutan egiten zuten jolasa eta zarata. Horrek salbatu ninduen, horregatik ez baitzen kartzelero bakar bat ere azaldu. Izan ere, bigarren burdinak zuen soldadura askatzean atera zen zarata izugarria izan zen, gau isilaren erdian are izugarriago.

Horren ondoren, kartzelako usategira heldu nintzen. Uste nuen kable gehiago egongo zela, baina argi instalakuntzarako konexioa paraleloan eginda zegoen; alegia, ez zeuden kable guztiak tutu berean sartuta. Edonola ere, argi fluoreszenteari lotuta zeuden tokitik moztu nituen eta haiekin txirikorda bat egin nuen, ahal izan nuen gehien indartuta. Burdinazko kako bat egin nuen, harategietan okelak zintzilikatzeko erabiltzen dituztenak baino handiagoa, eta haga batean jarrita, indarrez tiratu nuen, ea nire pisuari eutsiko zion probatzeko. Eta eutsiko ziola uste nuen, han ez baitzen inondik inora askatzen. Proba hura egin ondoren konfiantza hartuta, trankil gelditu nintzen.

Gero eta garbiago ikusten nuen denbora laburraren buruan gure senide eta lagunek preso bat gutxiago bisitatu beharko zutela. Izan ere, bageunden, eta bagaude, gure lagunekin aste-

ro Espainia eta Frantziako errepideak betetzeko beste. Zenbat kilometro egin ote dituzte denen artean? Batek daki, milioika eta milioika, batzuetan presoa ikusi barik itzultzeko ere, kartzeleroen jarreragatik edo gure borrokaren bat dela eta. Esate baterako, 1984ko *txapeo* luzeak iraun zuen bitartean. Hamar hilabetez zeldetan itxita, ez genuen bisitarik eduki; hala ere, senideak eta lagunak astero joaten ziren Herrerako eremu hartara.

Itxialdia amaitu ostean ere eutsi egin zieten Herrerako kartzelara egiten zituzten martxa haiei, urtero gutxienez bat eginez. Euskal Herri osotik dozenaka autobus joaten ziren, baita Estatu osotik ere: Katalunia, Andaluzia, Murtzia, Gaztela eta beste hainbat lekutatik. Urtean baino urtean jende gehiago. Harik eta, 1989ko udan sakabanatzea orokortu zenean, presook kartzela askotan barreiatuta, Herrerako martxa ez egitea erabaki zen arte. Azken martxan ehunetik gora autobus bildu ziren Manchako basamortu hartan, 10.000tik gora lagun beren etxetik ehunka kilometrora euskal preso politikooi elkartasuna erakusteko. Ikaragarria, benetan eskertzekoa.

Ni kartzelara sartu aurretik ere egin zituzten beste martxa batzuk. Gogoan dut Soriako bat, bertan Polizia kartzela esparrutik ateratzeko 34 eguneko gose greba egin zutenean. Han zeuden lagun batzuek zainak moztu zituzten, hain zen latza jasaten zuten egoera. Azkenean, lortu zuten Polizia kartzelaren kanpoaldean geratzea eta gure jendea urte batzuk geroago handik eraman zuten arte lasaitasun apur bat lortu zuten, Poliziak gauero kontaketak egitera sartzen jarraitu zuen arren. Miaketak ere, kartzeleroekin batera, poliziek egiten zituzten.

Esandako moduan, Herrerako martxak sakabanatzea orokorra abiatu zutenean amaitu ziren, Herrera guretzat kartzela bat gehiago bezala geratu zenean, alegia. Edonola ere, martxa

gehiago, askoz gehiago, egingo ziren kartzela guztietara. Edozeinetara egiten dira, bateko egoera txarra dela-eta, besteko lagun baten egoera larria edo norbaiten kartzelaldiaren urtemuga potoloa dela eta... Azken urteotan Jaengo espetxe honetan izan dira horietako batzuk. Kartzela honek Zornotzako batukadak eta zanpantzarrak ezagutzeko aukera izan du. Gure herrian eta beste leku askotan zanpantzar esaten diete joaldunei. Berba batzuk prestatu nituen martxa haietako baterako, hona etorri zirenentzat, herriko jaien bezperak ziren aitzakian:

«Txalo beroak Zornotzatik Jaengo espetxe honetara etorri zareten espediziokideei. Elkartasun esanahia oso goian ipini duzue jarleku bakoitzean. Kartzelako harresiari, mugarri horri begira, elkar ikusi ezinik, zeharo igartzen dut arrotza naizela lurralde honetan, urruntasunak bereiztuta. Zuentzat nire esker ona betiko. Elkartasun bidean borondatez sartuta zintzo dabilenari berdin diotsat. Atzenengo garaian askatasunaren aldarrikapena ugaritu egin da Euskal Herri osoan. Bertan gaur egun *apartheid* moduko bat dago indarrean. Instituzioetatik bultzatzen duten egoera hau, baina, ziur nago arteztuko dugula noizbait. Bitartean, fin ibiliko gara bide horretan.

Amaitzeko, berton dauzkagu Zornotzako jaiak, karmenak. Gustatuko litzaidake topa osasuntsu bat egitea nirekin dauden lagun itzelen eta nire partez. Eskubide guztiak lortu arte, jo eta ke. Jaiak bai, borroka ere bai. Beti arte».

# XIX

Ganibeta galdu nuen goiko ganbaran. Badakit ondoan utzi nuela, baina berriro hartu nahi izan nuenean, ez nuen aurkitu. Ez nuen txiskeroa piztu nahi, gauez argia urrunetik ikusten da eta. Nahikoa zen kableak moztean ateratzen ziren txinpartak, astinduren bat ere jasan nuen, hala eta banan bana denak moztu arte. Txizagura etorri zitzaidan eta ganbaran bertan egin nuen. Ia hamahiru urtean beti ere komunean txiza eginda, han egitean askatasun sentsazioa sentitu nuen. Han, barruan egonda ere, nahi nuen lekurantz mugitzean bezala.

Aparteko gauzak ziren horiek niretzat. Dena prestatu ondoren, nire zeldara jaitsi nintzen berriro, dutxatzeko gogoz. Arropa guztiak kendu eta baldekada batzuk ur hotz bota nituen burutik behera, garbitu eta bizkortzeko. On egin zidaten. Ondo lehortu ondoren, txandal pare bat jantzi nuen, bata bestearen gainean, kolore desberdinetakoak, irtetean gainean eramango nuena kanpoan aldatzeko asmoz.

Ondoren, denbora igarotzen utzi nuen gelan. Arriskutsua iruditzen zitzaidan ordu txikitan irtetea, ihesaz konturatuz gero, Granadako kaleak atoan itxiko zituztela uste bainuen.

Pareko ziegan zeuden presoak oso gazteak ziren, 18 eta 21 urte bitartekoak, bakoitza bere “harrikadarekin”, baina errespetatu egiten ninduten; izan ere, ni neuretara ibiltzen nintzen, eta ez nintzen euren mugidetan sartzen. Askotan gertatzen den bezala, begiek esaten dute pertsona zelakoa den. Gainera, espetxean bizikidetza garrantzitsua da.

Irteteko momentua heldu zen. Kalean erabiltzen zen dirua, benetakoa, sakelan sartu nuen, 23.000 pezeta. Garrantzi handia zuen diru hark niretzat. Espetxean ezin nuen diru asko aldean

izan, araketetan harrapatu ahal zigutelako. Beraz, dirua ondo tolestuta gorde behar zen, fardel txiki bat eginda. Pentsatzen nuen diru asko ez nuela beharko, ihesaldia kontu nahiko laburra izango zelako. Nortasun agiri baten kopia ere gorde nuen, nik baino ile dezente gutxiago zeukan lagun batena, lagunen bisita baimena eskatzeko agiriaren kopia eskatzen ziguten eta. Lagun horrek ez zekien ezertxo ere horretaz, jakina.

Ordu bakan batzuk baino ez zitzaizkidan geratzen barru hartan. Edo beharbada urte mordo bat, ordu arte eman nituenak baino gehiago, zapaltzeko kartzela gehiago.

Zenbat kartzela izan ditugun bizileku edo, hobeto esanda, zigor-leku! Zein baino zen kaskarragoa, zein baino zein urrunagoa.

Euskal Herrikoak ere ezagutu ditugu, baina normalean bisita laburrak izan dira, batzuetan albiste on baten ondorioz eta gehienetan albiste txar batengatik.

Basauriko kartzelan astebete baino ez nuen eman, baina sikiera amama Paula azken aldiz ikusteko aukera eduki nuen. Hilzorian zegoela eraman ninduten. Kartzelatik haren etxera eraman ninduten, Basaurin bertan, nire izeko baten etxean zegoen eta. Amabitxia nuen amama Paula, eta poz itzela hartu zuen espero gabeko bisita harengatik. Ni ikusita hiltzea ez zitzaiola ardura esan zidan azken agurra egitean.

Kartzelara bueltan, biluztu nahi izan ninduten eta nik uko egin nuen. Aitzakia horrekin, eduki behar nituen familiarekiko bisita bereziak kendu zizkidaten. Bisita eta aurrez aurrekoa espero nituen, eta senideak eta lagunak joan egin ziren baina, niri ezer esan gabe ere, sartzea galarazi zieten. Pentsa zer amorru eta inpotentzia sentitu nuen hura jakindakoan, ordurako beste kartzela batean nengoela. Beste alde batetik, baina, horrelako

kontuak ez dira salbuespen bat, beti dabiltza aitzakiaren baten bila presoa estutu eta zigortzeko. Presoa eta senideak ere bai.

Alcala Mecon aita hiru hilabetez bisita barik zigortu zuten hartan bezala. Asteburuan bisita egin eta handik egun batzuk barru, zigor-parte bat ekarri zidaten. Irakurri nuenean, nire izenaren ordez aitarena agertzen zela konturatu nintzen, eta kartzeleroari esan nion txarto zegoela, ni Jose Mari naizela. Berak ezetz esan zidan, Santos zela zigortua. Eta nik: «baina hori nire aita da...!». Kartzeleroak esan zidan aitarentzat zela, hain zuzen ere. Hainbestetan bezala, gezur bat asmatu zuten familiari min emateko. Nik ez nuen kartzelero hura ezagutzen, baina lagun batek esan zidanez, sarritan mozkortuta ibiltzen zen. Aita, zigorraren berri edukita ere, nik abisatu nuelako, hurrengo bisitara etorri zen, eta kartzelako atean geratu behar izan zuen.

Beste behin, Puerto Ilan nengoela, aurrez aurreko bisita eskatu nuen aitarekin eta Idoia lehengusinarekin. Onartu zidaten. Bisita egunean, lehengusina bakarrik heldu zen, aita ezin izan baitzen joan, eta ez zioten sartzen utzi nire aitarekin ez zihoalako. Lehengusina ez zen adin txikikoa, 36 urte zituen eta, baina aitarekin joan behar izan zuela esan zioten eta, aurrez aurreko bisitaren ordez mintzalekuan, kristala tartean, zergatik ez zen sartuko azaltzeko minutu bakan batzuetako aukera baino ez zioten eman.

# XX

Ihesa eguna argitzean gauzatzea hobe nuela uste nuen. Oso ordu ona iruditzen zitzaidan goizeko zazpiak, kaleko jendearekin nahasteko. Gelan denbora ematen nengoela, isilik, alboko gelatik bi presoren arteko solasa entzun nuen.

–Irtengo zen hori honez gero?

Ez zegoen erantzunik. Ez ninduen harritu gazte haiek nire asmoaren berri jakiteak, ordu askotako loa kendu bainien ganbara zulatzeko lanetan sortutako astrapalarekin.

Handik gutxira, goiko sabaira igo nintzen. Mahaiaren burdina goian neukanez, sabai leihoko alanbredun kristala arrakalatu arte presionatu nuen. Gero, ateratako kristal apurtuaren zatiekin mozketa txiki bat egin nuen eskuan, eta konturatu nintzen odol arrastoa uzten ari nintzela. Baina libratu nuen sabai leihoa ni pasatzeko modukoa zen. Kakoa eta hari lotutako kablea hartu eta teilatura irten nintzen.

Gaur balitz bezala gogoratzen dut zelan zirimiria egiten hasia zegoen, baita haizea ere. Bete-betean jotzen ninduen Alpujarrako haizeak. Haize garbi eta zuzena, ez baitzuen kartzelaren inongo harresirik jotzen. Aske egonda dakizu haize hori egiazkoa dela.

Teilatutik aurrerantz nindoan eta bat-batean ginarra baten kirtena zapaldu nuen, nahi barik; norbaitek botako zuen egunen batean teilatu gainera, eta handik goitik biraka hasi zen beherantz, patioko zorua jo arte. Zarata atera zuen zerbitzu buruaren bulegoaren ondoan. Hango leihoa apur bat zabalik zegoenez, zerbitzu burua altxatu eta ate handia zabaldu zuen. Patiora ematen zuen ateko sarrailaren zaratagatik konturatu nintzen bazetorrela, eta linterna batekin leihoak argiztatzen ikusi nuen.

Ni etzan egin nintzen teilatuan, berak ikus ez nintzan. Antza denez, orduan ez zuen aparteko gauzarik ikusi, eta ostera ere itzuli zen bere bulegora. Ate handiaren sarrailaren zaratak entzuteari utzi nionean, aurrera segitu nuen, teilatu osoa zeharkatuta.

Eskumatara jo behar nuen, kartzela barruko aldean dagoen bigarren harresitik, guardia zibilaren garitaren parean jarri arte. Han nengoela, ahotsak entzun nituen, kartzelako esparrutik niganantz zetozela, gero eta hurbilago. Nire azpitik bi bikote guardia zibil pasatu ziren. Ez dakit zelan ez ziren konturatu ni harresi gainean nengoela. Han bazeuden zutoin handi batzuk eta sare metalikoa, kanpotik kartzela barrura sartzea zailagoa izateko, eta ni hain justu zutoin batean bermaturik nengoen. Kableak kartzelako esparruko zorua jotzen zuen. Txanda aldaketa ikusi nuenez, itxaron egin nuen handik lasterrera guardia zibilak itzuli arte. Espero izandako moduan, beste bi guardia zibil igaro ziren nire azpitik. Bitartean, lau ardatzeko kamioi bat, Pegaso bat, eta MG Morris granate antzeko bat pasatu ziren futbol zelai ondoko bidetik.

Guardia zibilen garitaren gaineko txarrantxara bota nuen kakotxa eta bertan lotu zen. Ahalik eta tenkatuena jarri nuen kablea. Pentsatu nuen hala behar zuela nire pisuari eusteko baina baita garitarantz erraz eta arin egiteko ere. Garitan zegoen barandara heldu nahi nuen, eta hiru metrora edukita, ez zitzaidan hainbesteko distantzia iruditzen. Kartzelako esparrua guztira bost metro zabal zen, baina horietatik ia metro bi kendu behar ziren, guardia zibilen garitak, barrualdean egonda, distantzia laburtzen zuen.

Salto egin aurretiko denbora labur horretan zenbat pentsamendu pilatu zitzaizkidan buruan, iraganekoak eta etorkizun zeharo ziurgabearen gainekoak.

1993ko martxoaren 6a zen. Momentu hartan nork esango zidan zazpi urte geroago, halako egunez, Langraizko kartzelan egongo nintzela, pozak zoratzen. Izan ere, Basaurin eman nuen aste hartaz gainera, beste hiru aste eman nituen Euskal Herriko kartzela batean, martxo hasieran helduta. Hantxe nengoen 2000ko martxoaren 6an, Goiztiri jaio zen egun berean. Aste batzuk lehenago, Puerto IIn nengoela, familia lotura delakoagatik Euskal Herrira gerturatzea eskatuta neukan, eta Langraizera eraman ninduten. Ospitalera joateko aukera eman zidaten, baina erditzea ondo joan zela eta ama-alabak laster etxean izango zirela jakinda, etxera nahiago nuela esan nien. Eta etxera eraman ninduten martxoaren 10ean.

Zenbat emozio batu zitzaizkidan egun hartan, denbora gutxian! Ordurako banituen 20 urte kartzelan, 20 urte herria ikusi barik. Dena oso aldatuta topatu nuen; hala ere, ez nintzen oso kontzientea. Herriko jendea etxe ingurura hurbildu zen, pankartaren bat eta euskal presoen aldeko banderak ikusi nituen. Lagun batzuek etxera igotzea lortu zuten, ni agurtzeko. Gogoan dut etxeko atarira sartu nintzen momentua, eta batez ere Goiztiri ikusi nuenekoa. Besoetan hartu nuen zirrararen eta beldurraren artean, haren burua alde guztietara mugitzen baitzen eta nik ez bainekien nola heldu. Ondo gogoan ditut, halaber, umetxoaren atzamar txikiak, lau eguneko umearen atzamartxoak.

Etxera igo ziren lagunetako bat Jon Idigoras izan zen. Jaengo espetxe honetan bertan nengoen 2005eko ekainaren 3an hil zela jakin nuenean. Egun batzuk geroago, Zornotzan nire kartzelaldiaren 25. urteurrena zela-eta egin zuten ekitaldian nire idazkitxo hau irakurri zuten:

«Jon Idigorasi:

Lehenengo bider elkar ikusi genuenean irabazi zenuen nire sinpatia. Zornotzarra izan arren, Donibane Lohizunen bizi zinen elkar ezagutu genuenean. Noizean behin hara joatea gogoko nuen, zu bezalako borrokalarien ondoan egotearren.

Amnistiaren ostean, Zornotzara etorri zinen berriro, eta laster igarri zenuen nire ibiliak norantz bideratuta zeuden. Hainbat bider espetxean izan zara, baita ihesean ere. Bide latzak ezagun zenituen, sekula ere borroka eta konpromisoa laga barik. Horregatik, eredua zara guztiontzat.

Akorduan daukat Herrera de la Manchako espetxera bisitan joan zinenekoa. Baikor eta alai egon ginen biok. Bisita amaieran ukabila gora agur egin zenidan.

Goiztiri jaio zenean, etxean egoteko aukera eduki nuen, momentu laburra izan bazen ere. Hara joan zinen zu, eta gogoan dauzkat gure besarkada eta bosteko sendoak. Bertan egindako argazkia betiko daukat.

Iaz, *Gara* egunkariko Jo Puntuan, zutabe bat idatzi zenidan. Bertan herriaren sentimenduak, baita zeureak ere, azalarazten zenituen. Amaieran hala zeniostan: 'Besoak zabal-zabalik, zure zain gagoz Zornotzan!'.

Jakinaren gainean egon naiz gaixorik zeundela. Eta gaixorik ere, hor ikusi zaitut beti, lehenengo lerroan, besteak beste nire askatasuna eskatzen, prentsaurrekoetan eta kalean, mahaiburuan edo atrilean. Jaso nuen ospitaletik bidali zenidan mezua. Ni irten arte bizirik iraungo zenuela esan zenidan, baina zoritxarrez ez da hala gertatu. Edonola ere, nahinon, zauden lekuan, badakizu uztailean nire kartzelaldiaren 25. urtemuga dela, eta badakit zu ere antolatu duten ekitaldian egongo zarela.

Hor, zauden lekuan, hartu egizu besarkada iraultzaile bat Jaengo espetxetik, zuk gustuko duzun esaldiagaz: Gora Euskal Herria Askatua!

Betiko, zure laguna».

Kontxak inoiz kontatu zidan Jonek gure alaba ikusten zuenean, «gudari txikia» esaten ziola, baita Goiztirik erantzun ere: «zu, gudari handia».

Etxetik irten eta ertzainen auto kamuflatura sartutakoan jendeak animoa ematen zidan, batzuek autoa jotzen zuten. Ertzain batek, haserre, esan zidan: «gu zurekin ondo portatu gara eta begira zer gertatzen den...», egurtu balituzte bezala. Nik esan nion kexarako motibo handiagoa nuela nik, 20 kartzela urte beteta, kalean beharko nukeen eta. Autoa arrankatu eta ziztu bizian abiatu ziren errepide nagusirantz, stop seinalean geratu barik ere. Ni, hala ere, lasai eta pozik nengoen, zer ospatua banuen eta; gainera, ondo gosalduta eta baita apur bat edanda ere, familiak prest zeukan xanpain botila zabaldu eta topa egin genuen eta.

Etxean ordu biko bisita egin ostean, Langraizera itzuli nintzen. Ordurako, zegozkidan bisita normal eta berezi guztiak eskatuta neuzkan, banekien-eta edozein momentutan Andaluziara bidean jarriko nindutela. Izan ere, handik egun gutxira, aurrez aurreko bisita batetik irten eta bertan zegoen kartzeleroak esan zidan: «Zu Jose Mari Sagardui zara, ezta? Badakizu bihar Puertora zoazela». Nik ez nekien ezer, baina espero nuen. Kontua da kartzeleroak itxaron zuela eramango nindutela esateko Kontxak Goiztirirekin alde egin arte, eta nik ezin izan nituen abisatu. Hartara, Puertora iritsi arte zenbait egunez Penintsulako kartzeletan zehar ibiliko nintzen, edo ibiliko nindutela jakinda, Juantxo Tobalinari, Langraizen zegoen lagun bati, etxeko telefono zenbakia eman eta abisatzeko esan nion. Hala egin

zuen lagunak, eta berria era lasai batean emateko asmoa zuen arren, Kontxak telefonoa hartu bezain laster esan zion: «Badakit zertarako deitu duzun».

Halako batean Puertora heldu eta handik lasterrera Zornotzan emandako ordu haiek gogoan, gutun bat bidali nien lagunei:

«Aupa, lagunok!

Sentitu nituen zuen elkartasuna eta berotasuna sekulakoak izan ziren, nire etxean eta etxe ondoan batuta ikusi zintuztedanean. Adierazi ere ezin dut egin zelako poztasuna eman zidan neure alaba jaiotzeak. Horri esker ikusi gara. Badakit beste lagun batzuek gura baina ezin izan izan zirela han egon egun hartan. Beraientzat ere eskerrak bidali gura ditut. Ikaragarri gustatu zitzaidan etxean egindako argazkiak bildutako albumean zuen sinadurak ikustea. Akorduan ditut herriko parkearen ondoan zeuden bi pankarta dotoreak ere, ederrak! Gure etxera bidalitako loreak ere aukerakoak ziren, eta jaio berri daukadan alabari oparitutako jantziak, aproposenak. Beraz, borondaterik onenarekin egin duzuen hori guztia bihotzez eskertzen dizuet.

Puerto de Santa Mariatik egindako joan-etorriko bidaia luzea, gogorra eta astuna izan da, baina ostera ere egingo nuke halako gertaera batengatik. Baita zuekin egoteagatik ere, jakina. Noizbait izango da hori, eta orduan astia edukiko dugu urte hauetako hutsunea betetzeko. Ea ba, laster ikusten dugun elkar. Eta zuri ere, Goiztiri, antzeko gauza diotsut, nahiz eta momentu honetan neuri baino amaren bularrari kasu gehiago egingo diozun.

Hurrengora arte eta besarkada handi bana».

# XXI

Askatasun egarria mugarik gabea zen, hain zegoen hurbil kalea. Esaldi horrek topikoa eman lezake, baina halaxe zen, sentsazio fisikoa ere bazen, ahoa lehor-lehorra neukan eta. Segundoetako, dezimetako kontua zen. Kartzelaren eta harresiaren arteko esparrua zeharkatu baino ez zitzaidan geratzen kartzela atzean uzteko.

Neure uste osoan erabakia hartuta, kabletik zintzilikatu nintzen estu eta gogor helduta.

Eta huts egin zidan berehalaxe. Neure pisua airean askatzean ez nintzen konturatu zer gertatu zen, baina bai sentitu nuen zelan jausten ari nintzen bospasei metro inguruko tarte horretan, eta gorputzak airean hartu zuen abiadurak eragin zidan inpresioa. Gogoan dut orduko astindu itzela, ikaragarria. Uste nuen bihotza bular-kaiolatik irtengo zitzaidala.

Biriketan aire barik geratu nintzen lurrean kolpea jo ondoren, belaunekin paparrean jo nuen eta. Segundo batzuk arnasa hartu ezinda egon nintzen, eta behin arnasa apur bat hartu nuenean, elbarri geratu nintzela pentsatu nuen. Ez nuen lurretik altxatzeko ere indarrik eduki. Saiatu nintzen bakoitzean, gorputzak ez zien erantzuten buruko aginduei. Indarra egiten nuenean, eskuaren dardara ikusten nuen, baita hankena ere. Eskumuturra nire besotik kanpo zegoen, hankekin eta besoekin nahikoa moteldu nuen kolpea; hala ere, belaunekin paparra jotzean, atzerantz egin nuen eta ipurdi gaineko hezurraren zati bat ere zartatu zitzaidan. Azalpen hauek guztiak ospitalean emango zizkidaten ondoren, eskanerra egindakoan; edonola ere, momentu hartan onik ez nengoela sumatzen nuen.

Kartzelako esparruko lurzoruan botata nengoela, guardia zibil bi etorri ziren niregana. Batek pistola nire burura apuntatzen, gero eta distantzia laburragotik, metro erdira baino gutxiagotik azkenean. Momentu batetik bestera katua sakatzeko zain nengoen. Gero galderak egiten hasi ziren.

–Nor zara zu?

Ez nien erantzun.

–Nondik irten zara?

Erantzunik ez, beharbada neukan minari garrantzi handiagoa ematen niolako.

Handik gutxira, kartzelero bi etorri ziren, haietako bat zerbitzu burua. Honek, bere onetik aterata, badio:

–Entzuten nituen nik, ba, zaratak, eta begira zer zen...

*El Búho* esaten genion, eramaten zituen antiojoek hontz itxura ematen ziotelako. Beste kartzeleroa Herrera de la Manchatik ezaguna nuen, *Caramula* goitizena zeukan, halako aurpegia zeukan eta.

Azkenean, guardia zibil batek badiotse kartzeleroei:

–Nor da hau?

Eta kartzeleroek:

–Hau horietariko bat da.

Besoetatik heldu eta eskuak atzeko alderantz bihurritu zizkidaten. Zutunik jarri ninduten, inolako kopla barik, eta eurek markatzen zuten pauso arinean esparrutik isolamendurantz eraman ninduten. Hain zuzen isolamenduko bidea hartu ge-

nuenean, guardia zibilek kartzeleroen eskuetan utzi ninduten. Eta zerbitzu burua ni jotzen hasi zen, aurpegian txaloak batez ere, eta ukabilarekin. Aldi berean, esan zidan:

–Zertarako nahi zenuen kalera joan? Gero ni akabatzeko, ez?

Ni, erorikoagatik eta minagatik, biraoka nenbilen etengabe.

Eta Caramulak badio:

–Gainera birao batean dabil.

Isolamenduko zelda batean utzi ninduten. Egoera animikoaz ez arduratzerainoko mina sentitu nuen han, bakartuta. Askatasuna, bizia bera galduta neukala pentsatzen nuen, eta nire ardura bakarra mina desagertzea zen.

Orain, egoera hura gogoratzean, berehala lotzen dut urte bi geroagoko beste batekin, Puerto II kartzelan bizi izandako batekin, hain zuzen. Hura ere Andaluzian, beraz, eta eskerrak ematen ditut orduan bertan egoteagatik.

Ordurako hamabost urte pasa nituen giltzapean. Ez zen nire garairik onena. Urte asko barruan eta kalerako esperantza lausotzen hasita, etengabe burua betetzen zidaten pentsamenduen korapiloak etsipenaren mugarantz eraman ninduen. Itsasontzi matxuratu bat nintzen itsas zabalean. Hala da kartzela, hala da bizitza. Olatuz betea, gorabeheraz betea. Batzuetan leun eta bare, beste batzuetan zakar eta haserre. Eta iluntasuna besterik ez dagoenean estimatzen da gehien argia, ondo asko dakit nik hala dela, halako batean argi izpia heldu zitzaidan eta.

Nork esango zidan niri Cadizko elkartasun talde bateko neska bat iluntasun hartatik aterako ninduen eguzki errainua eta nire alabaren ama izango zela. Talde hark munduko borroka askorekiko elkartasuna zuen helburu, besteak beste Sahara, Palesti-

na eta euskal presoekikoa. Bestetik, mugimendu andaluzistako kide ere bazen. Luze hitz egin nuen, sarritan, neska harekin, Kontxarekin. Gogoan dut lehenengo bisitan agertu zenekoa, lagun bat eta biok bakartze modulutik eraman gintuzten mintzalekuetara eta nire kabina aurretik pasatzen ikusi nuen, ni non nengoen jakin gabe. Berehala esan zion nire lagunak eta mintzalekura sartu zen. Jaka eta praka bakeroak jantzita zegoen, kirolari itxura zuen, eta ondoren jakingo nuen, izan ere, kirola egiten zuela. Modu atseginean mintzatzen hasi zen lehen momentutik. Nik, ostera, ez nekien zer esan. Aurrerago esango zidan nire begietan tristura sumatu zuela. Azkarra da gero, gure *Cañaílla*. Horrela esaten diete San Fernandoko bizilagunei, eta bertakoa da Kontxa. *Cañaílla* itsas kuskuiluaren forma duen moluskua da, hango kostan ugari dena.

Kontxaren bisitak gero eta ugariagoak ziren, baita elkarren gutunak ere, eta gure arteko harremana sendotuz joan zen eta jitoan zegoen itsasontziak joera arteza hartu zuen, behe-lainoa eta olatuak gorabehera norabideari eusteko ilusio berriarekin. Nire beharrak eta nahiak bete zituen, eta nire egoera ez zen traba izan bere etorkizuna nirearekin batzeko erabakitzeko orduan. Ez zen erabaki erraza izango. Nirekin ardura handia zeukan, lanean arazoak ez zituen falta izaten eta Euskal Herritik kanpo euskal preso batekin harremanak dituenak topatzen dituen zailtasun guztiei aurre egin beharra, eta arazo horiek ez dira gutxi gero!

1997ko udaberrian, aurrez aurreko bisita eskatu nuen. Horretarako, bizikidetza agiri bat eskatu genuen, herriko alkateak sinatua. Kartzeletako zuzendaritzek eskatzen zuten formalitate burokratiko bat, espetxe arauan halako betebeharrik agertzen ez bazen ere. Gure harremana soberan erakutsita zegoen asteroko bisita eta gutunekin. Hori guztia Puertoko zuzendariari, antza denez, gutxi iruditu eta ukatu egin zigun bisita mota hori.

Nik, atoan, kexa-errekurtso bat aurkeztu nion, eta gauzak apur bat nahastu ziren. Alde batetik, nire aitak eta zenbait lagunek Kontxaren eta bion harremanaren lekukotasuna eman zuten udaltzainen aurrean eta haiek epaileari bidali zioten lekukotasun hura, baina epaileak Zornotzako Udalera bidali zuen ofizio batean, alkateak esan zuen berak ez zuela gure bizikidetza agiririk sinatu. Ahaztuta edukiko zuen, edo auskalo. Horri dagokionez, epaileak esan zuen dokumentu faltsutze delitu bat izan zitekeela eta espedientea guardiako epaitegira bidaliko zuela. Edozelan ere, bere horretan geratu zen kontu hori, artxibatuta edo hautsez beteta. Beste alde batetik, baina, albiste ona ere bazekarren epailearen autoak. Kontxaren eta bion arteko harremana ondo frogatuta zegoela zioen eta, horrenbestez, aurrez aurreko bisitak bazegozkigula.

Auzia ez zen horrela gelditu, baina. Fiskalak errekurritu egin zuen. Alferrik, gure arrazoia hain argia izanda, epaileak ez baitzuen Fiskaltzaren helegitea onartu. Tira, ez horren alferrik, fiskalak horretara atzeratu egin baitzuen gure aurrez aurreko lehen bisita.

Urte bi-edo igarota, Kontxa Euskal Herrira joan zen bizitzera, lehenengo Santurtzira. Han bertako lagunen babesa izan zuen. Ondoren, pisu bat alokatu eta lanean hasi zen. Beste erabaki zail bat hartuko zuen gero edo, hobeto esateko, hartuko genuen. Ume bat edukitzea. Haurdun geratu zenean, Zornotzara joan zen, gure etxera, eta herrian, eta Euskal Herri osoan nire ahotsa zen bera. Euskaraz ikasten hasi zen, denbora galdu barik, gaur egun oso ondo moldatzen da eta. Hurrengo urtean Goiztiri jaio zenean, gure bizipoza biderkatu egin zen. Jakina, gure alaba hain urrun izateak ezintasuna sortzen zidan. Eta pentsa Kontxarentzat zer zen alabaren ardura eta bikotekidea mila kilometrora edukitzea, baina bere gaitasun itzela erakutsi zuen. Zama hura gutxi balitz bezala, nahigabe latza izan zuen.

Haren aita gaixotu eta hil zen 2004ko otsailaren 5ean. Aita hil baino lehenago Kontxa Cadizera joan zen hura bizirik ikustera. Hara abiatu baino lehen, Goiztirik zerbait arraro sumatu zuen amaren aurpegian, nahiz eta hark ez zion ezer esan. Ez zekien zer, baina bazekien zerbait larria gertatzen zitzaiola. Gerora konturatuko zen hainbeste maite zuen aitona barik gelditu zela. Azken hatsa eman arte egon zen Kontxa aitaren ondoan.

Ez dakit nondik ateratzen zuen hainbesteko indarra, umea hazi, hezi eta aurrera ateratzeko, zaintzeaz gainera ikasketetan laguntza handia ematen zion eta. Edonola ere, Goiztirik oztopo guztiak gainditzeko indarra ematen zigun, eta hirurok elkartzen ginenean, atsekabe guztiak ahazten genituen atoan. Hainbeste urte giltzapean, noiz irtengo nintzen arrastorik ere eduki gabe, eta zorte handia neukala pentsatzen nuen. Hala zen eta.

# XXII

Bakartze moduloko beste zelda batean Rubixo zegoen. Galdezka hasi zitzaidan:

–Zer gertatu zaizu?

–Errezintora jausi naiz.

–Zelan zaude?

–Uste dut eskua eta hankak hautsi ditudala.

–Minik daukazu?

–Bai.

Hura jakinda, Rubixo bere gelako atea gogor, indar handiz jotzen hasi zen, lehenbailehen medikuren bat etortzeko eskatzearekin batera. Baina medikua baino lehenago zuzendariordea etorri zen, eta agindu zidan:

–Kendu zapatilak!

Nik kendu egin nituen, motel, oso mantso. Nire hankak ikusi zituenean, esan zuen:

–Ematen du hanka honetan zartadura daukazula, eta bestea apurtuta.

Igarri egin zuen.

Sendagilea etorri arte denbora luzea itxaron behar izan nuen, bi ordu beharbada. Bitartean, karneta eta bizar-aitzurra komunetik behera bota eta burdina moztekoa desagerrarazi nuen. Rubixo pazientzia galtzen ari zen, ni lasaitzen saiatzen nintzen arren. Sendagilea heldu zenean, kaleko ospitalera atera beharko nindutela esan zidan. Furgoneta arrunt bat prestatu zuten.

Ordurako hankak handitzen eta gorputza hozten hasita nituen. Oinez ibiltzeko arazo handiak nituen, ezin nuen pausorik eman eta, gainera, furgonetatik irteteko gorriak eta beltzak ikusi nituen. Ospitalea ez zegoen urrun, kartzelatik ikusten zen ospitale hartara eraman ninduten eta.

Hasieran eskanerra egin zidaten, gero X izpiak eta, hori dena ikusi ondoren, sendaketak egiten hasi zitzaizkidan. Hanka bietan eta beso batean igeltsu irekiak ipini zizkidaten. Eskaiola irekiak kolpearen ondoriozko handituak jaitsi arte jartzen dituzte. Mina arintzeko, injekzio lasaigarria ipini zidaten. Eta hura guztia behin-behinekoa zela jakinarazi zidaten. Izan ere, handik Carabanchelgo ospitalera eramango ninduten. Bidaia luzea nuen aurretik.

Ospitaletik irteteko itxaron egin behar izan nuen denboratxo batez, eta bitarte horretan, txizagura nintzenez, non egin nezakeen galdetuta, ontzi bat ekarri zidaten, baina intimitatea gordetzeko, izkinara eramateko eskatu nuen. Ez zidaten kasurik egin. Polizia nazionalak erantzun zidan segurtasun neurriak zirela-eta ez nindutela handik mugituko. Ezinezkoa zen hainbeste poliziaren aurrean txiza egitea. Ez gaude ohituta jendea ondotik pasatzen ikusten, eta norbera halako trantzean.

Ospitaleko irteeran dena ziren telebista kamerak eta argazkien flashak. Neure buruari galdetzen nion zenbat polizia zeuden argazki makinen eta telebista kameren atzeko aldean. Handik irtenda, bertako espetxera eraman ninduten, anbulantzia batean. Sartze-galerian ordu batzuk eman nituen, eta egun berean Madrilgo espetxe ospitalera bidean jarri ninduten. Abiatu baino lehen, galeria hartan bertan, Caraniñoren anaia ikusi nuen, zerbitzuburu bat, niri begira matrailezurra estutzen, nigana sentitzen zuen gorrotoa adieraziz. Anbulantzian nirekin esku-ohearen ondoan zetorren kartzeleroak galdetu zidan:

–Nora joateko asmoa zenuen?

–Ez gaude alde berean –erantzun nion nik.

–Ulertzen zaitut –esan zidan berak–. Goizean kartzelara nentorrela, polizia asko zegoenez, pentsatu dut zerbait gertatu dela. Orain, zerbitzu hau eginda, zuzendariak hiru jai egun emango dizkit.

Ez zen kartzelan hartu nuen lehenengo jipoia. Txikiena ere ez, baina izan ziren gehiago, eta ni ez naiz jipoitu bakarra izan.

1980ko ekainean, ni Soriara iritsi baino bi hilabete lehenago, miaketa batean gure zenbait kideren irratiak apurtu zituzten poliziek. Probokazio hura ikusita, gure kideek kartzelako telebista bi bota zituzten eskailera batetik behera. Txakurrak berehala sartu ziren moduluetara, zoro lez. Haien burua, ez dakit kapitain edo komandantea zen, aizto handi bat eskuan eta besteak distantzia laburretik gomazko pilotak jaurtitzen eta egurra banatzen. Sarraski haren arrasto batzuk ikusi nituen nik, hara heldu nintzenean. Txorik hortz bat apurtuta zeukan, Tomax Karrerak bertatik bertara botatako pilotakada baten marka itzela erakutsi zidan bizkarrean, saihets aldean. Galeria batzuetako lagun guztiak ondo egurtuta geratu ziren egun hartan.

Zenbait hilabete igarota, 1981eko otsailaren 23an, Guardia Zibila Madrilgo Kongresura sartu zen tiroka. Irratiz entzun genuen estatu-kolpearen trazak zituen haren berri. Zenbait lekutako militarrek tankeak kalera atera ei zituzten. Soriako kartzelan zeuden polizien oihu eta txaloak ere entzuten genituen. Kolpistak goraipatzen zituzten, eta Franco gogoratzen. Guri, ohiko irainez gainera, zenbait mezu jakinarazi zizkiguten. Labur esanda, laster ikusiko genuela elkar, gu hormaren kontra, jakina. Tentsio ikaragarria nabari zen; hala ere, umorea ere ez zen falta gure artean. Tentsio hari irtenbide bat emateko modua izango zen, nonbait.

## XXIII

Madrilerantz gindoazela, anbulantzian, lokartzen nintzenean, berehala esnatzen nintzen bat-batean salto batez, erorikoa inkontzientera etortzen zitzaidan eta. Hiru bider itzartu nintzen horrela, ordura arte sekula ez zitzaidan halakorik gertatu. Orduan pentsatu nuen kronikoa izango zela, baina ez, denborarekin hori ere ahazten duzu. Txizagura sartu zitzaidan, baina gure atzean Guardia Zibilaren Nissan Patrola zetorrenez, ezin nuen egin. Anbulantziako txoferra eta haren laguntzailea konturatu ziren hartaz, eta gasolindegi batean sartu eta bertan aparkatu zuten anbulantzia, ea lasaitzen nintzen eta txiza egitea lortzen nuen, baina hala eta guztiz ere, ezin izan nuen.

Guardia Zibilaren Nissan Patrola atzean zetorren, Despeñaperrostik behera, barruan nire gelan utzi nituen gauza guztiak zekartzala, erdiak araketan kartzeleroek apurtuta. Madrilera heldu baino lehen, anbulantziako txoferrak irratiz deitu zuen, Poliziak bidea zabaltzeko, eta polizia munizipalen motorrak aurrean genituela heldu ginen Carabanchelgo ospitalera. Han zeuden sendagileak, nire zain. Nik txizalarriak jarraitzen nuen, eta neska erizain batek galdetu zidan, txantxetan, ea prostatako arazorik nuen. Nik esan nien neure gelara joan nahi nuela hamar minutuz, eta han bai, lasai-lasai egitea lortu nuen.

Sekula baino goseago nintzen eta zerbait jan nahi nuen. Jatea debekatu zidaten, ordea, zeren ebakuntza egiteko jan barik egon behar nuen, anestesiaren kontuak direla-eta. Ondoren, indarrez tiraka eskua bere tokian ipini zidaten. Injekzio antikoagulatzaileak ere jarri zizkidaten, hamabost bat, sabeleko eta hanketako odol ubeldurak kentzeko.

Kartzela batetik besterako hamaika bidaia eginda nengoen ordurako. Bidaia luze, aspergarri eta nazkagarriak, tentsioz be-

teak, behin baino gehiagotan ostikadak eta zaplaztekoak hartuta. Ospitalerainoko hura, baina, denetan latzena izan zen. Edonola ere, oraindik bidaia ugari egin beharko nituen beste espetxe batzuetara. Baina ez gure senideek beste. Horiek astero-astero egin behar dituzte bidaia latzak, gureak bezain luzeak edo luzeagoak, oso erakargarria ez den helmuga batera. Gazte batentzat gogorra bada, pentsa adineko jendearentzat eta, zer esanik ez, ume txiki batentzat.

Laster hasiko zen Goiztiri ere bidaia luzeak egiten, lehenengo Puertora eta 2002ko martxotik aurrera, Jaen II espetxe honetara. Puertora joaten zenean, Cadizko aitona-amonak kartzelara hurbiltzen ziren beren alaba eta iloba ikustera. Zenbait urtetan oporrak San Fernandon pasatu izan zituen Goiztirik, han bizi baitziren aitona-amonak. Ederto pasatzen zuen Kontxaren gurasoekin, osaba-izekoekin, lehengusu-lehengusinekin eta Hugo txakurrarekin. Barrabaskeria ugari egingo zizkion txakur hari, baina beti zain eta zaindari edukiko zuen Hugo. Familia maitagarria zen, eta are gehiago poztu nintzen aitona errepublikanoa zela jakin nuenean.

Familiaz gainera, beste lagun askok ere laguntzen zieten Kontxari eta Goiztiriri, kartzelara joateko autoa utziz eta baita eurek eramanez ere. Eta, ahal izatera, bisitara sartzeko aukera ez zuten galduko. Halako kasuetan, alabak gustuko zuen gidari egitea, sartu arteko denbora kontrolatuz, edo bisitakoa antolatuz eta nahi zituzten azalpen guztiak emanez. Batzuetan bisitari berriari arreta osoa ematen nion eta Goiztiriren ilusioa nolabait apalduta sumatzen nuen egiten zuen aurpegiagatik. Baina zelan azaldu ume bati, nahiz eta berak arreta guztia merezi, besteei ere jaramon egin behar zaiela? Berak uste zuen nire berben eta begiraden helmuga zela, eta halaxe zen, bisitan eta bisita ostean ere, eguneroko pentsamenduak betetzen zituena.

Goiztiri koskortzen hasi zenean egiten genituen jolasek eman diote titulua kontaketa honi. Alaba koltxa batean jesarrita narras eroaten nuen nik, baina denborak aurrera egin ahala jolas berriak ekartzen zituen denbora labur hartan egiteko. Ikastolan futbolean egiten zuen, eta bisean bisetan ere egin behar izaten genuen partidutxo bat, eta berdin esku-pilotan ere, umeentzat prestatuta zegoen patio txiki batean. Batzuetan berak irabazten zuen, beste batzuetan utzi egiten nion irabazten, baina lantzean behin egurra ematen nion, galtzen ere ikasi behar zuela pentsatuta. Behin, Jaengo kartzelan, ezin ninduela gainditu ikusita, trikimailuak egiten hasi zen, eta nik esan nion horrela ez nintzela jolastuko. Berak arin erantzun zidan hiruzpalau urteko umeen hizkuntza bitxi baina ondo ulergarrian: «horretarako egin dut nik zortzi orduko bidaia?». Barregura eman zidan haren ateraldiak, baina esan nion egia zela zortzi orduko eta gehiagoko bidaia egin zuela, eta itzultzeko beste horrenbeste egin behar zituela, baina gauza batek ez duela bestea kentzen, eta galtzen ere jakin behar zuela.

Aurrez aurreko bisita haietan erabat baretzen nintzen eta aldi berean nekea igartzen nuen, baina ez Goiztirirekin egiten nituen jolasen ondorioz, bisita aurretik pilatutako tentsioagatik baizik. Bisita ostean tentsio bera jabetuko zen nitaz, ama-alabak etxean zirela jakin artean.

Bisean biseko patio hartako hormak txarrantxaz inguratuta zeuden; Goiztirik behin galdetu zidan ea txarrantxa haiek zertarako ziren, eta nik erantzun nion txoriak pausatzeko zirela. Handik gutxira baina, neuk ekarri nituen txarrantxak hizpidera eta berak atzera galdetu zidanean zertarako ziren, egia esan behar niola pentsatu eta presoak handik ez alde egiteko jarri zituztela esan nion. Bera txarrantxei begira geratu zen tarte batez, pentsakor, baina ez zidan horretaz ezer gehiago esan.

Beste batean, Kontxak kontatu zidan nola kartzelako sarreran Goiztirik esan zion: «heldu behar diegu kartzeleroei, zuk bati eta nik besteari, hala aitatxok ihes egingo du».

Ume-umetatik poz handiak eta dezepzioak ere ezagutu ditu alabak. Ikastolan denetariko umeak zeuden, batzuk ertzainen seme-alabak, eta gehienek bazekiten gainerakoen gurasoen berri. Noiz edo noiz esan zioten bere aita, ni, alegia, kartzelan zegoela hiltzailea zelako. Berak niri batzuetan galdetu zidan ea inor hil dudan. Nik azaldu nion Euskal Herriaren aldeko borrokak eraman ninduela kartzelara.

Behin, ikastolan, andereño batek zerbait igarri zion, kezka, tristura edo biak batera. Andereñoak ere bazekien ni kartzelan nengoela eta denen aurrean esan zuen bere alabaren aita, bere gizona, alegia, espetxean egon zela. «Zurea bezala», esan zion Goiztiri. Zalantza barik, alabaren autoestimua altxatu zuen andereño hark. Eta nik oraindik ere bene-benetan eskertzen diot. Horrelako jende miragarria zegoen eta dago, preso politikoon haurrekin edo egoera zailean dauden beste hainbatekin sentsibilitate berezia daukatenak. Besteak beste, Pirritx, Porrotx eta Marimotots datozkit gogora, beren ikuskizun batean Goiztiri zegoela jakin zutenean aipamen maitekor bat egin zioten eta.

Urte haietan, Juan Luis Mugertza idazle elgoibartarrak Jaengo espetxera egin zituen bidaietan oinarritutako nobela bat idatzi eta argitaratu zuen Ataramiñeren eskutik, "Lunaren Goiztiri". Izenburuak berak adierazten duenez, euskal presoon senideen bizipenak islatu zituen bertan. Gogoz eskertzen ditut lan hori eta gure senideen ardurak ezagutarazten dituztenak, benetan txalogarria da Mugertzak eta beste batzuek, hala nola Ataramiñe Literatura Koadernoak argitaletxeak egiten duten ahalegina.

Jaengo azken urte hauetan, kaskartu egin da bizimodua. Senideekiko bisean bisetan areagotu egin dira araketa umiliagarriak. Normala denez, senideek uko egiten diote miaketa mota horri, eta kartzeleroek ez diete sartzen uzten. Horrenbestez, komunikazio asko galdu ditugu, duintasunari eustea garesti ordainduta. Batzuetan Kontxa Goiztirirekin etorri eta miaketari uko egiteagatik alaba bakarrik sartzen zen, eta beste batzuetan alaba ere ez zen sartzen, hura ere arakatu nahi zutenean, alegia. Zenbat bisean biseko bisita galdu ote ditudan, batez ere Kontxarekin.

Bisitetan ere ez da arazorik falta izaten. Orain aspaldi ez dela Zornotzako gazte batzuk etorri zitzaizkidan bisitan. Sartu gintuzten mintzalekuan ez zegoen elkarri entzuterik; beraz, beste batera aldatu ginen. Txakurrak beste mintzategi batean geundela ikusi zutenean, nire bisita amaituta zegoela esan zidan. Nirekin isolamendutik bisitara joan ziren lagunek galdetu zidaten zer gertatzen zen, eta azaldu nienean, eurek ere bisita amaitutzat eman zuten, nahiz eta kartzeleroak esan eurekin ez zeukala ezer.

# XXIV

1993ko apirilaren 6an iritsi nintzen Carabanchelgo espetxe ospitalera, eta biharamunean gurasoek bisita egin zidaten Carabanchelen, Granadatik bueltan, haraino joan baitziren bertan nengoelakoan. Moja batek ospitaleko egonaldian lagun izango nuen gurpil-aulkia gidatu zuen mintzategiraino. Gezurra ematen badu ere, gurpil-aulkia ez zen sartzen mintzategiko atetik eta, orduan, aulkia korridorean utzi, neu bakarrik altxatu eta oinez joan behar izan nuen mintzategi barrura. Hanketan jarrita neuzkan igeltsuak beren lekutik mugitu ziren guztiz. Ondoren, itxaroten ez nuen bisita bat ere heldu zitzaidan, abokatuena, hain zuzen, eta gurpil-aulkia mintzategiko atetik barrurantz pasatzerik ez zegoenez, ostera ere altxatu nintzen kabinara hurbiltzeko. Horren kontura, sendagileak, biharamunean, igeltsuaren egoera kaxkarra ikusi zuenean, ez zuen sinisten ikusten zuen hura. Kristoren eztabaida gogorra eduki nuen berarekin igeltsua izorratu nuelako.

Gure amak dendan lanean zegoela hartu zuen ezusteko albistea, herriko neska batek haren berri eman zionean. Hala kontatu zidan berak ospitalean.

–Entzun dut irratia, Begoña.

–Zer, ba...? –esan zion amak.

–Ez dakizu? Semea zaurituta daukazu.

–Ez da egia izango! –amak.

Eta baietz, berretsi zion berria eraman zionak.

Berehala, amak aitari deitu eta Sondikara joan ziren biak taxi batean. Sondikako aireportuan, hegazkin batera igo eta Malagara abiatu ziren. Hegazkin berean Athleticeko jokalariak

zihoazen, eta elkarrekin joan ziren Malagaraino, baina Bilboko taldeko futbolariek berba egiten bazieten ere, amak ez zuen berbetarako gogorik.

Malagatik Granadara joan zirenean, kartzelero batzuek esaten zieten bertan nengoela eta beste batzuek Madrilen nengoela. Amak txarto nengoela baino ez zuen pentsatzen. Azkenean, espetxeko zuzendariak esan zien Madrilen, Carabanchelgo ospitalean, nengoela, eta haraino joan ziren gurasoak. Han, ostera ere, eztabaida izan zuten kartzeleroekin. Ospitaleko sarreran nitaz galdetu zutenean, kartzeleroek, zakar, esan zieten:

–Mañana verán a su hijo.

–Hoy –esan zien amak han zegoen harri handi batean jesarrita–, si no, no me muevo de esta piedra. Aunque sea, cinco minutos.

Azkenean, kartzeleroek baietz esan zioten:

–Señora, le tomamos la palabra: cinco minutos.

Eta bost minutuz ikusi nituen aita eta ama.

Zailtasun handiak nituen gurpil-aulkiarekin ibiltzeko. Esku batez eragin behar nion gurpilari, beste eskua apurtuta neukan eta. Ospitalean ere bazeuden segurtasun zeldak, eta ni haietako bitan jarri ninduten. Uste dut bi haiek bakarrik zeukatela karramarroa. Hala esaten diogu zeldako bigarren ateari, barrotez eginda dagoenari. Kanpoko atearen eta bigarren horren artean metro bat baino apur bat gehiago zegoen, eta bigarrena albotik zabaltzen zen. Gurpil aulkiarekin, hamarren bat minutu ematen nituen handik irteteko.

Hezurrak kaltzio faltan nituen, hainbat gose grebaren eta elikadura eskasaren ondorioz. Hartara, ezin konta ahala kaltzio

konprimitu hartu nituen han, harik eta sendagileak nahiko pilula zirela esan zidan arte, bestela, artikulazioak atrofiatzeko arriskua omen zegoen.

Egunak joan ahala, hanketako handitua jaisten zihoan eta sendagileek igeltsu irekiak kendu eta finkoak jarri behar zituzten. Ez dakit zenbat ordu egon behar nuen geldirik, dena ondo gogortu arte. Sendagileek tratu eskasa eman zidaten han egondako egun haietan. Akordatzen naiz nola sendagile batek beste bati esan zion, ozen, nik entzuteko moduan eta niri begira, bere koinatua polizia nazionala zela, nire erreakzioa ikusteko edo.

Espetxeko sendagileen artean ere denetik dago, bere lana egitera mugatzen denetik kartzelerorik zitalenaren pareko jarrera daukaneraino. Horietako batzuek, esate baterako, jipoi bat hartzen duzunean, eta hori ez da oso zaila izaten, ez dizute lesioen edo ubelduren txostenik egingo. Lotuta bazaude, ez dira gauza kartzeleroari eskuburdinak kentzeko esateko ere. Gorago aipatu dut Sevilla IIko sendagilea, *Corcuera* esaten geniona, eta gogoan dut, hala berean, Puerto Iekoari *Mengele* esaten geniola.

Medikua bezala, dentista ere bazegoen kartzela guztietan. Haginetako arazoren bat genuenean, harengana joaten ginen, eta gaitz guztietarako erremedio berbera zuen, azkarra eta bakarra: haginak ateratzea. Kontua zen haginetako mina kentzea, baina txantxarra edukita, esate baterako, ez zegoen hagina enpastatzeko aukerarik. Guk enpasteak ordaintzeko prest geunden, baina Espetxe Erakundeak ez zuen baimenik ematen. Zenbat hagin galdu ote genituen Espainiako kartzeletan.

Urteak joan ahala zenbait kartzelatan lortu genuen enpaste bat edo beste egitea, geuk ordainduta, jakina. Eta maiz Euskal Herriko haginlariak etorri ziren hainbat kartzelatara lagun askori ahoa konpontzera, modu altruistan. Jende miresgarria,

kartzeletara sartu ahal izateko baimena lortzeko borroka handia egin ondoren, sarritan bide judiziala muturrera eramanda ere, beren opor egunak elkartasun lan horiek egiteko baliatzen zituena. Euskal Herriko haginlari solidario horiek bezala askotariko medikuak ere etortzen ziren eta etortzen dira, ahal zuten neurrian kartzelak eragindako gaitz fisikoak eta psikikoak arintzearren. Laguntza bera eskaintzen diete askatasuna berreskuratzen duten lagunei, urte askoan txilindro ikaragarri horren pisuaren ondorioak jasan ostean.

Ospitalean botikak ekartzen zizkidan neska hara heldu nintzenean ea prostatako arazorik nuen galdetu zidan bera zen. Egun batean, neska hark medikazioa ekarri zuen aldi berean, garbiketarako tresnak banatzen ari ziren: orrazia, xaboia, bizarra kentzeko krema, komuneko papera, haginak garbitzeko eskuila, pasta eta kondoi batzuk zeuzkan poltsa. Halako batean, badiotsat nik:

–Nahi dituzu kondoiak? Nik soberan ditut.

Eta berak erantzun zidan:

–Mutilarekin ez ditut erabiltzen.

–Zer, ondorengoen bila zabiltzate orduan?

–Ez, nire mutila ganorabako hutsa da, basektomia eginda dauka.

Egun haietako batean, erradiografia bat egitera eraman ninduen mojak esan zidan ni bezala xehatuta edo xehatuago zegoen beste preso politiko bat igaro zela handik. Berehala etorri zitzaidan burura nor zen: Anton Arias Curto galegoa, Exército Guerrilheiro do Pobo Galego Ceive erakundekoa. 1988an, Po-

liziak harrapatu zuenean, ihes egiteko komisariako leihotik salto egin eta gorputz osoko hamaika hezur birrindu zituen.

Espetxe ospitale hartara heldu nintzenean, beste galego bat zegoen han: Sito Miñanco narkotrafikatzailea, hedabideetan askotan agertzen zena. Arreta eman zidan batzuon telefono deiak egiteko bost minutu eskasak nola luzatzen ziren hark deitzen zuenean. Zutik egonda nekatzen zenean, lurrean jesartzen zen, momentu oro telefonotik eskegita. Kartzeleroek harekin erakusten zuten eskuzabaltasuna besteokin zuten zekenkeria bezain zabala zen.

Hori ez zen ospitalean bakarrik gertatzen, jakina, kartzela guztietan baizik, guk 1987tik aurrera bertatik bertara Estatu espainoleko kartzela guztietan ikusi genuen bezala. Izan ere, euskal preso politikoak barreiatzeko prozesua 87an hasi zen. Urte hartako urtarrilaren 22an 12 bat lagun Herreratik atera eta Penintsulako hiru kartzelatara eraman zituzten. Herrerako modulo guztietako jendea zegoen haien artean; beraz, goizean goiz jakinaren gainean geunden denok. Erantzun bat eman behar genuen eta gauean, zeldetara igotzeko orduan, planto bat egitea erabaki genuen. Bederatzi eta erdiak aldera, gure lekuetatik ez ginela mugitzen ikusita, kartzeleroak etorri ziren, zeldetara igotzeko ateak aspaldi zabalik zeudela esanez. Ez ginela igoko esan genien, eta eurek modulutik alde egin zuten berehala. Gau osoa eman genuen bertan, lo egin gabe, batetik bestera, Guardia Zibila sartuko ote zen zain. Hurrengo egunean, inor ez zela agertzen ikusita, lagun batzuek koltxoi batzuk jaitsi zituzten zeldetatik. Luze gabe, ordea, kartzelako zuzendaritzak gure ordezkariei deitu zien, Madrilekin hitz egin zutela eta barreiatutako lagunen kontua konponbidean zegoela esateko, baina gure jarrera bertan behera utzi behar genuela. Hala egitea erabaki genuen guk, eta zeldetara igo baino lehen

dutxak zabaltzeko eskatu genien. Baietz esan ziguten. Garaipen erraza izan zela pentsatu genuen. Hala ere, dutxak zabaltzeko zain geundela, lagun batek abisatu zuen moduluen arteko gunean guardia zibil samalda bat zegoela, denak formazioan. Handik gutxira, modulurik modulu sartzen hasi ziren trumilka, borra-kolpeka, ostikoka... Zeldetan itxi gintuzten eta han jarraitu genuen lehenengo 14 eguneko zigorra bete arte, eta zeldetatik irten gabe ere, beste bost hilabete emango genituen itxita, beste itxialdi bati ekin genion eta.

Gure kolektiboa sakabanatzeak, baina, aurrekariak izan ditu; esate baterako, ihes saioren bat harrapatu ondoren edo istiluren batengatik ezarritako zigor moduan, Soriatik Burgosera edo Herrerako kartzela eraiki berrira eraman zituzten zenbait lagun 1980 baino lehen. Eta lehenago ere, frankismoan, penintsula osoan barreiatuta izan ziren euskal preso politikoak.

# XXV

Carabanchelgo ospitalean hamar bat egun eman nituen. Barra-barra gogoratzen nituen Manuk Granadako espetxean esandakoak, Carabanchelgo ospitalean zelako bizimodua egiten zuen kontatzen zuenean. Esan zidanez, dena itxita zegoen, eta halaxe zen; gainera, han eman zidaten pijama urdin bat eraman behar nuen egun osoan, uniformea balitz bezala. Pijamaren goiko poltsikoan Hospital Gregorio Marañon jartzen zuen, ni Carabanchelgo Espetxe Ospitalean nengoen arren. Oso erabilita zegoen, higatuta, eta nik neure buruari galdetzen nion zenbat lagun hilko ote ziren jantzi haren barruan. Atoan eskatu nien gurasoei pijama urdin argi bat eramateko, han ez baitzuten bestelakorik erabiltzen uzten. Lehenengo bisitan ni ikusteko bost minutu baino ez zizkieten utzi eta ez genuen gauza asko esateko astirik izan, baina ez zitzaidan ahaztu pijama ekartzeko eskatzea.

Espetxe ospitaleko zuzendaritza bulegora deitu zidaten. Han, Espetxe Erakundeetako inspektore bat zegoen. Berak kontatu zidan bere aita Soriako kartzelan zerbitzu buru zegoela, ni garai batean egondako kartzelan, alegia. Horrelako jendeak bere gremiokoak ere salatzeko kapaz dira beraiek gora egiteko. Bere burua aurkeztu eta galderak egiten hasi zen, ni gurpil-aulkian nengoela, eta bere jakinguran badiost:

–Granadako kartzelan, zenbat denbora eman zenuen goiko ganbarako zuloa egiteko?

–Ez naiz gogoratzen –erantzun diot nik.

–Alboetako geletakoak zarataz edo ezertaz konturatu ziren? –berak.

–Horrek ez dit ardura –esan diot–, oraintxe bertan hezurrak apurtu ditudala baino ez dut gogoan, eta horretaz bakarrik arduratuko naiz.

Bere aurpegiak irribarre bat erakutsi du, eta esan dit inor ez dela hango zarataz gogoratzen.

–Zure ondoko lagunek esan dute hilabete zeramatela lo egin barik, baina gau horretan oso ederto lo egin zutela –esan du, baita nik hari erantzun ere.

–Egindako guztia neure gain hartzen dut. Badakit mendekua hartzeko Salto del Negrora eramango nauzuela, baina berdin dit, prest nago zuen mendekuaren ondorioak jasotzeko –esan diot, aurrerantzean egin liezadakeenak ez nauela ustekabean hartuko jakin dezan.

Salto del Negro Las Palmas Kanaria Handian dago, Euskal Herritik urrunen. Garai hartan batez ere Penintsulan eta Hexagonoan ez ezik, hainbat uhartetan ere barreiatuta zegoen preso politikoon kolektiboa, baita Afrikako Ceutan eta Melillan ere. Niretzat ez zen berria izango uharte batera aldatzea. Palma Mallorcakoan egona nintzen, Balearretan. Hantxe, hain zuzen, lagun bik ihes saioa egin zuten ni handik atera eta gero, epaiketa batera eroan nindutenean. Lagun haiek ihes saioak huts egin zienean, bata Salto del Negrora eta bestea Tenerifera eroan zituzten. Horregatik adierazi nahi nion inspektore hari ni horrelako leku batera eroanez gero, ez nuela ikara handirik hartuko. Ondo genekien horrelako mendekuak ohikoak dituztela; are eskasagoak, gainera, kalte handiena gure senideentzat izango zela jakinda. Eta bagenekien guk joko hartan kartarik okerrenak tokatzeko aukera guztiak genituela.

Ahaztu barik daukat Palma de Mallorcako espetxera aldatu nindutenekoa. 1990eko urriaren 20a zen. Sevilla IItik atera, espetxez espetxe eraman ninduten furgoi zelularrean eta hamabost bat egunean Valentziaraino heldu nintzen. Gau baten, bertako kartzelatik portura eroan eta, trasladoa egiteko prest furgoi zelularrean nengoela, itsasontzi ikaragarri handia ikusi nuen bat-batean. Itsasontzi barrura sartzen ari zen kamioi-trailer bat oso-oso txikia ikusten zen haren aldean. Ni arranpatik bertatik sartu ninduten. Itsasontziaren konpainiaren izena irakurri ahal izan nuen barrura sartu orduko: "Transmediterránea". Sotoko gela batera sartu ninduten. Barrura sartutakoan, atzean lotuta nituen eskumuturrak aurrealdean lotu zizkidaten. Goizean, Palma de Mallorcara heldu nintzen. Urte erdi pasatxo eman nuen irla hartan beste bost kiderekin, kartzelako moduluetan zehar barreiatuta.

Preso sozialekin hartu-eman normalak genituen. Eurek beren bizimodua egiten zuten eta guk geurea. Bazegoen, baina, gurekin hitz egitea gogoko zuen bat, *Patxuli*. Ijito transexuala zen, eta zioenez, bere jendearen artean oso gaizki ikusia zegoen bere izaera sexuala. Hala ere, berak uste zuen ez zuela zertan ezer ezkutatu. Bazekien beste askok, ijito zein ijito ez direnek, horrelako hainbat kontu gorde eta besteak seinalatzen lehenak direla, beren buruaz lotsatu egiten dira eta den moduan agertzen dena lotsagarri agerrarazten saiatzen direla. Behin baino gehiagotan esan zidan: «Ez dakizu logela bateko ate ostean zer ezkutatzen den. Eta nor da okerrago, erakusten duena edo ezkutatzen duena?».

# XXVI

Apirilaren 15ean alta eman zidaten Carabancheleko ospitalean, eta biharamunean Sevilla IIra heldu nintzen. Tarte hori zauriak osatzen eman nuen. Sevillako espetxea urte eta erdi egon zen erakundeko presorik gabe. Beharbada, aurreko urtean izan zen Expo 92 han egiteak zerikusia izan zuen. Dena den, errebotatuta, zigortua-edo, ez dakit seguru, hara eraman ninduten Carabanchelgo espetxe ospitaletik, oraindik esku bateko igeltsua kendu barik, 1993ko apirilaren 16an. Gure arauari jarraitzea erabaki nuen; hau da, zenbaketetan zutik ez jartzea, araketetan jarrera pasiboa izatea… Horrela, bada, goizeko zenbaketan altxatu ez nintzenez, kartzelero bi etorri ziren, atea ireki, bien artean altxatu ninduten eta batek ahoan ukabilkada bat jo eta zauri txiki bat egin eta odola eragin zidan. Gainera, mehatxua bota zidan: «Badakizu zer gertatuko zaizun hurrengoan, zenbaketetan behar bezala jarri ezean». Lagun batek zerbitzu-buruari kontatu zion zer gertatu zen, eta bera, preso sozialek *Nazi* esaten zioten zerbitzu-buru hura, modulura etorri zen. Nik esan nion goizean zer gertatu zitzaidan, eta haren erantzuna hauxe izan zen: «Zu nahiko beteranoa zara, eta jakin beharko zenuke zelan jarri behar duzun zenbaketetan».

Epailearen aurrean salaketa jarri nuen, eta gurasoek ere beste salaketa bat jarri zuten Durangoko epaitegian. Handik hilabetera espetxetik atera ninduten Sevillako epaitegira joateko. Epaileak galdetu zidan ea odolaren arrastorik neukan, ea zerekin garbitu nuen odola… Nik *«con papel del tigre»* garbitu nuela erantzun nion, komuneko paperarekin, alegia. Salaketa, beraz, bertan behera geratu zen.

Ordurako ezaguna nuen epaitegi hura; izan ere, urte bi lehenago, Mallorcako espetxean nengoela, Sevillako Auzitegiaren dei bat jaso nuen epaiketa baterako, urte berean Sevilla II es-

petxean nengoela kartzeleroekin izan nuen liskar bat zela eta. Egun batean, miaketa egiteari uko egin nionean, kartzeleroek jipoi bat eman zidaten eta gainera nire kontrako salaketa bat egin zuten. Nik ere jarri nuen haien kontrako salaketa; baina, jakina, nireak ez zuen aurrera egin. Haren ondorioz, Mallorcako espetxera eroan ninduten, eta zazpi hilabetetsu geroago jaso nuen Sevillako Auzitegiaren deia. Eta Mallorcatik Sevillara eraman ninduten atzera, oraingoan Sevilla I espetxera.

Epaiketaren egunean, Auzitegira atera baino lehen, jipoia jaso nuenean jantzita neuzkan praka laburrak poltsiko baten sartu nituen, epaileak jipoiaren ondorioz zelan geratu ziren ikus zezan: praketako goma guztiz nasaituta, kartzeleroek emandako tirakaden ondorioz. Epaileak aintzat hartuko zuela esan zidan, baina oraindik ere ez dut haren berri eduki.

Epaiketan salaketa politikoa egin nuen, eta Rubixo eraman nuen nire aldeko lekuko bezala. Hura Sevilla II espetxean zegoen oraindik. Epai aretotik irtendakoan, nazionalek "laztantxoa" egin zioten, alboetako saihetsen arteko okelari eskuekin helduz eta gogor jiratuz, korapiloa egin nahi izan balute bezala. Ubeldura dezente handia egin zioten.

Aita ere joan zen epaiketara, eta saioa amaitutakoan, kanpo aldean, ezezagun batzuek txistua bota zioten aurpegira. Aita nazka-nazka eginda geratu zen. Epaiketaren ostean, nire abokatuak ea aita agurtu eta besarkatu ahal nuen galdetu zion epaileari, eta hark esan zigun berak ez zuela oztoporik jarriko, baina kontu hori Polizia Nazionalari zegokiola; beraz, azkenean, aita besarkatu gabe geratu nintzen.

Gutxi gorabehera hilabete bat geroago izan zen Sevilla I espetxearen aurkako ekintza, eta egun hartako gauean beste espetxe batzuetako bidean jarri gintuzten Sevillako espetxe bietan geunden lagun guztiok, batzuk ondo jipoituta.

Rubixo eta biok Granadan agertu ginen. Luze gabe, bertako espetxera eraman zidan Sevillako Auzitegiaren epaia aspaldiko ezagun batek, lehenago aipatu dudan Morakok, hain zuzen. Sei hilabete eta egun bateko presoaldi txikia eta, gainera, 100.000 pezetaren isuna ezarri zidaten kartzelero baten aurkako lesio--delitua egiteagatik. Ordaindu ez nuenez, 15 eguneko kartzela--zigorra gehitu zidaten.

# XXVII

Ihes saiotik hiru urte igarota, 1996ko apirilean, Jaengo espetxe hau ezagutu nuen Puerto IItik helduta, ihesaldi zapuztua epaitzeko data jarri zutenean. Heldu nintzenean, kartzela honetan ez zegoen giro; tira, kartzelan sekula santan ez da giro egoten, baina garai hartan kartzeleroak bereziki oilartuta zeuden, euren lankide bat bahituta zegoelako.

Beraz, Jaenen nengoela eraman ninduten Granadako Auzitegira epaitzeko. Bertan, ahal izan nuen guztia salatu nuen, euskal preso politikook epaiketa gehienetan egiten dugun bezala. Gaixorik zeuden presoen askatasuna eta, oro har, presoen eskubideak aldarrikatu nituen. Honelaxe esan nion Granadako Tribunalari: «Denok daukagu espetxetik alde egiteko eskubidea, eta are gehiago euskal preso politiko izanda, ehunetik gorak zigorraren hiru laurdenak beteta dauzkagu-eta. Bahituta gaude, beraz, eta gure eskubideak urratuta, sakabanatuta eta urrunduta». Ihes saioaren egunean nortzuek jipoitu ninduten ere esan nuen han, baina haiek ez ziren agertu, nahiz eta nire deklarazioetan beti agertzen zen zein kartzelero ziren. Guardia zibilak baino ez ziren agertu, eta babeski baten atzean gordetzen ziren, bertatik euren deklarazioak egiteko. Sakabanaketa ere salatu nuen, Euskal Herritik zenbat kilometrotara gauden esanez.

Ihes-ahaleginarengatik, hiru hilabeteko kartzela-zigorra eta ihesaldian egindako kalte materialengatik, 48.780 pezetaren kalte-ordaina ezarri zidaten. Gainera, ordutik zigor osoa bete arte espetxeko onurak kendu zizkidaten. Ihes-ahalegina baino lehenago izandako onurak baino ez nituen izango, alegia, erredentzio edo luditze apur batzuk. Beraz, askatzeko data 2009ko abuztuaren 30a izango zen. Data hori aspaldi joan zen eta nik

Jaengo espetxe honetan jarraitzen dut, Espainiako Auzitegi Gorenak 197/2006 legea jarri zuelako indarrean eta, ondorioz, askatzeko data atzeratu egin zait 2011ko apirilaren 13ra arte, epaitegiaren auto baten arabera.

Niri kartzelan ez zidaten auto horren berri eman, nik lege hura aplikatuko zidatela espero nuen arren, eta 2009ko abuztuaren 30ean, kartzelako zuzendaritzak aspaldi eman zidan irteera data iritsi zenean, hain zuzen ere, hala jasota zegoen dokumentua kartzelero bati eman nion, *Westinghouse* esaten genion bati. Familia kalean zain zegoela esan nion, eta berak erantzun zidan: *«Después de 30 años viene usted con prisas? Aquí no ha llegado ningún papel de la Audiencia»*. Nik banekien familia ez zegoela kartzela ondoan, ez etortzeko esan bainien. Kontxa Andaluzian zegoen Goiztirirekin, bere herrian, gurasoen etxean egun batzuk pasatzen; dena dela, nik esan nion egun hori helduta ere, ez etortzeko. Gauean, afalorduan, kartzeleroa etorri eta goizean nik emandako orria itzuli zidan nazka keinu bat eginda.

Hemengo zuzendaria ez dut sarritan ikusten, baina askotan akordatzen naiz Morritos zeneko garaiaz. Orduan, Herreran ginela, nahi baino maizago ikusten genituen haren ezpaintzarrak. Gaiztoa zen, oso gaiztoa. Plantoa edo bestelako protestaren bat egiten genuenean, Guardia Zibila moduluetara sartuz gero, bera haiekin joaten zen, eta zein kide jipoitu behar zituzten seinalatzen zien. Badakit nitaz esan duela ez dudala bide zuzena aukeratu, berak ez bezala, nonbait. Horrelako zerbait etsaiarengandik etortzea laudorioa da niretzat.

Nire kontaketa honetan hainbat kartzelero aipatu ditut, guztiak goitizenez. Izan ere, ohikoa zen kartzeleroei goitizena ipintzea. Batzuek gu kartzela batera iristerako bazeuzkaten, preso sozialek ipinita; esate baterako, Carabanchelen edo gure kolektiboa sakabanatu ondoren ipinita, alegia. Beste goitizen asko, Puerton

eta Herreran batez ere, geuk ipini genizkien, kartzela horietan, sakabanaketa arte, euskal preso politikoon kolektiboko kideak bakarrik geunden eta. Goitizenik ez zeukaten bakanak izendatzeko, edonola ere, ez zegoen arazorik, guztien izen orokorra zuten eta: *boqueras* edo *boqui*. Hala esaten zaie kartzelero espainiarrei. Frantziarrak, berriz, *matoiak* dira.

*Tragasables* Puerto I kartzelan ezagutu genuen. Lehenbiziko egunean bertan baten batek debekuak baino iragartzen ez zituen kartzelero haren gaineko iruzkinen bat egin zuen: «tragasables ostiori...!». Eta izen horrekin bataiatuta geratu zen. Zerbitzu burua zen, eta zenbait urte geroago, Salto del Negro kartzelan, zuzendari. Han, ustelkeriagatik kargugabetu zuten eta atzera berriro Puerto I kartzelara eraman.

*Espia* ere Puerto Ieko klasikoa da. Ez zen batere zaila izan haren goitizena asmatzea. Beti gure atzean zer entzun, zer topa ibiltzen zelako. Egia esateko, denek zeukaten espia bokazioa. Lagun biren arteko solasa edo patio erdiko batzarrean esaten genuena entzuteko ez zen belarri bat faltako leiho edo ate hurbilenean. Joseba Sarrionandiak ere bizi izan zuen eguneroko egoera itogarri hura eta ezin hobeto irudikatu zuen "Territorio librea" poeman:

*Funtzionarioak zelatan ditugu beti:*
*bazterretik jarraitzen digute patioan,*
*atzetik jarraitzen digute komunera,*
*aurretik jarraitzen digute bisitara,*
*ateko mirillatik zaintzen gaituzte zeldan*
*eta gure loa ere zelatatzen dute.*
*Ezin haiengandik alde egin ez patioan,*
*ez komunean, ez bisita*
*kabinan, ez zazpigarren loan.*
*Euskara da gure territorio*
*libre bakarra.*

*Euskaraz solasean hasiz gero*
*hara hor funtzionario bat berehala*
*ezkutuka gure ondora datorrela.*
*Ziur ez duela deus ulertzen,*
*baina bertan geratzen da zelatan,*
*espioi filmetako espioiaren moduan.*
*Dena dela, guk ez diogu euskarazko*
*lehen ikasgaia ere emanen.*
*Oharkabean bezala dio gutako batek:*
*'Emukatup tab kogaid erug naedlakezta*
*ae neztidnufnok nugud...'.*

*Buey*. Bisontea ere izan zitekeen bere itxuragatik, baina animalia klase hori bezatuta ez dagoenez, *Buey* egokiago iruditu zitzaion lagunen bati. Akordatzen zait zelan behin, afalorduan, jantokira sartu orduko sekulako hatsa igartzen zen. Txiza usain nabarmena. Afaria ekarri ohi zuten gurdia sartzeko atea zabaldu zutenean areagotu egin zen hatsa. Afariarekin batera ekarri zuten menu oharrean hauxe idatzita zegoen: *«Riñones al jerez»*. Segituan esan genion kartzelero bati hura handik eramateko lehenbailehen. Eta beste afari bat ekarri ezean, ez ginela handik mugituko. Kartzeleroak zerbitzu buruari deitu zion. Buey agertu zen. Afaria zegoen mahairaino joan zen artez, koilara bat hartu eta giltzurrunen saltsa probatu zuen. Hura nazka, txerrikeria hura ahora sartu zuenean sentitu genuena. Gozoak zeudela esan zuen, eta ez zegoela beste afaririk. Guk geure jarrerari eutsi genion, ez genuela presarik esanda, eta azkenean eraman egin zuten sats hura, eta handik ordu erdira-edo arrautza frijituak ekarri zizkiguten.

Txerri-jana ohikoa zen han. Sukaldetik jantokirainoko bidea egin baino lehenago igartzen genuen haren hatsa. Oso txarto prestatzen zuten, oso kalitate eskasekoa zen dena, baina hori

ez zen txarrena. Ez zituzten produktuak garbitzen, usainagatik ez ezik, itxura hutsagatik ere nabari zen. Egun bateko giltzurrunak aipatu ditut, baina beste hamaika konta nitzake. Esate baterako, egun batean afaria zerbitzatu genuen eta lagun batek platerean kristal zatiak topatu zituela esan zuen, eta atoan beste batek, eta beste hainbat gehiagok berdin. Dilistak zeudenean, noizbehinka harritxo bat topatu beharrean, galbahetik pasa beharreko guztia lapikora botatzen zuten. Batek daki jan ezinezko zenbat osagai zituen janari esaten zioten hark.

*Pikoloro* Herreran ezagutu genuen. Loro baten mokoaren itxurako sudurra zeukan. Beste bati *Perkins* esaten genion, diesel motor zahar haiek bezain motela zelako. *Intxaurraga* goitizenekoak Puerton sortu genuen aldizkari bati izenburua eman zion. Barregarri iruditzen zitzaigun nola ahoskatzen zuen Eibarko lagun baten deitura: *Inshaurraga*.

*Padrecito* ere elementu ederra zen. Beti gizon onberaren plantak eginda, atsegin antzera hitz egiten saiatzen zen... eta aukerarik txikienean, berdin zion lagun bat, kuadrilla bat edo modulu osoa, zigor zeldetara bidaltzeko prest. Beti zeukan eskura partea jartzeko orria.

*Tirillas* txiki eta estua bezain gaiztoa zen; izan ere, kartzelero arrunta izatetik zuzendari izatera iritsi zen Herreran, Morritos hemen bezala. Gauza jakina da horretarako zelako merituak egin behar diren. 88an apurka-apurka lagunak sakabanatzen jarraitzen zuten, eta Herreran zenbait planto eta txapeo egin genituen. Plantoak guardia zibilak moduluetara sartzen zirenean amaitzen ziren. Haietako batean, haien buruan Tirillas agertu zen, korrika, guardia zibilei nori jo seinalatzen, Morritosen antzeko bidea eginda, antzeko merituak, alegia.

Beste bati *Endañeta* esaten genion, eta barkatuko ahal digu harri-jasotzaile apartak. Kartzelero hark ez zuen, ez, haren itxurarik, guztiz kontrakoa baizik, eta ez dago esan beharrik goitizen hori ironikoa zela.

*Niveas*, *Konan*, *Bakero, Psikopata*... eta orain akorduan ez ditudan beste asko ziren fauna hartako beste elementu batzuk.

# XXVIII

Jon Idigoras hil zenean idatzi nuen testua Zornotzan irakurri zuten ekitaldiaren ostean, hedabideek nire aldeko omenaldia izan zela azpimarratu zuten. Kezka handiagoa ematen zien ekitaldi hark gainean nituen 25 kartzela urteek baino. Zenbait preso ohi eta ezker abertzaleko kideren bat auzipetu egin zituzten «omenaldian» parte hartzeagatik. «Terrorismoa goraipatzea» leporatuta Auzitegi Nazionalean epaitu zituztenean, Kontxa deklaratzera joan zen bertara, beste hainbatetan bezala. Hara zer esan zuen: «Ez dut nire mutil-lagunari zertan omenaldirik egin. Haren askatasuna eskatzeko ekitaldi politiko bat izan zen».

Jonen heriotza ez zen lagun maite baten gaineko albiste ezin txarrago bakarra izan Jaengo kartzela honetan. 2004ko uztailaren 16an Esther Azpuru aspaldiko lagun eta burkidea hil zen, eta hiru urte geroago, 2007ko maiatzaren 27an, haren senar Jabier Etxebarria. 1977ko harako amnistia baino lehen eta ondoren ere kartzela ezagutu zuten biek. Jabier hil zen urtean egin zidaten oroimenezko ekitaldirako biak herriaren gogoan izatea nahi nuen, eta berba hauek idatzi nituen:

«Zuek aldenduezin, sentikizun bizi batek astinduta, nire harrera xumea egin gura dizuet, zaila izan arren, bion heriotzak ekarri didan saminak barru-hondoak ikutu eta nahieza ipini dit eta, zuen joatea horren arina izan delako.

Behin ere ez dut ahaztuko bikote abertzale honek jasan zuena atxiloketen, torturen eta espetxearen ondorioz.Trantsizioko indultuarekin irten ziren espetxetik. Gogoan dut Esther, indar militar-polizialen bortizkeria zela-eta, samakoa ipinita irten zela, eta azken arnasa eman arte eduki zituen arazo latzak. Latzak izan baitziren jasan zituen torturak, bortxaketa barne.

Jabierrek ere behin baino gehiagotan jasan zituen Guardia Zibilaren izugarrikeriak. Behin batean, soka batez Land Roverrari lotu eta narrasean eroan zuten basoko estartetan zehar, sasi eta oteen gainetik. Nekez eta ibili ezinda, Carabanchelgo hirugarren galeriara sartu zuten. Hantxe osatu zituen, kostata, hanketan zituen zornez betetako zauriak eta gorputz osoko ubeldurak, lagunek zainduta.

Denbora aurrera joanda, Herrera Manchako kartzelan ikusi nuen Jabier, eskola esaten zioten gela batean. Ezin izan ginen elkarrekin luzaro egon, baina nahikoa izan zuen bere ardura bakarra emaztearengan zuela esateko. Ez pentsatu, inondik inora, zuekin ahaztu naizenik. Mosu eta igurtzi bana».

Nire testu hori herrian irakurri zutenetik egun batzuk baino ez ziren igaro antzeko albiste txarra heldu zitzaidan arte. Aspaldiko beste lagun baten heriotzarena, Sabin Euba *Pelopintxo* zornotzarrarena, hain zuzen. Batzuetan, horrelako egoeretan, hitzak agortuta daudela ematen du, baina sentimenduek norberaren barruan irauten dute eta zelanbait kanporatzea ere halako beharra da. Hauxe idatzi nuen Pelopintxo gogoan:

«Aldikada igazi da telefono soinua entzun nuen iluntze hartatik. Akorduan daukat. Burgosko La Brújula hoteletik berba egin zenidan enkargu hura egiteko. Atoan konturatu nintzen argi zure eskuzabaltasunaz. Ordutik denbora laburrera, Zornotzan bilatu eta aurkitu ninduzun. Oroipen polita dut zeure burua aurkeztu izana, hura aurrez aurre ikusi zintudan lehenbizikoa izan zen eta. Nabarmendu nahi dut erabakiak hartzeko zure gaitasuna, nortasunez eta kategoria miragarriz egiten zenekiela. Aparteko iraultzailea, goi mailako duintasuna zeneraman aldean. Errepresio zorrotza atzean jarraika zenuela, Ipar Euskal Herrirantz ihes egin zenuen derrigorrez. Ondoren, kartzela eta eragozpenez betetako erbestea bizi izana. Ez zait inola ere

burutik joan kartzelatu berri nengoela niregana etorri zinela behar nuenerako laguntza emateko prest. Beti erakutsi dituzun dotoretasunaren eta koherentziaren jabe eroan zaitu heriotzak. Neure barrua mingostasun sakon batek astinduta, beti arte, Pelopintxo, anaitasunez».

Aldameneko gelan Jagoba Terrones laguna daukat. Idatzi hau pasatu diot. Berak liburu bat ikusi du orriotan, eta iruzkin hau itzuli dit.

«Batzuetan, liburu bat liburu bat da soilik. Beste askotan, kontakizun eder batzuk, eta besteetan, testu honekin gertatu zaidan bezala, kontakizun baten atzean dauden sentimenduz beteriko bizipenak ere.

Gatzak, liburu hau nola egin duen, nolako buruhausteak eduki dituen ikusteko parada izan dut, eta bai esan dezakedala, esaldi bakoitzaren atzean, berak islatzen duen pentsamendu bakoitzaren atzean, sentimendu erraldoi bat egon badagoela. Zer dago "Zaldi berdea" hitzen barruan, kideak aipatzen dituen momentuetan, edota aitarekin gurutzatzen dituen begiradetan...? Gatza ezagututa eta berari entzunda ezagutu ahal dugu hori dena, eta seguru nago liburu hau irakurtzen dutenak nolabait hurbilduko direla Gatzaren pentsamenduetara, eta Gatza gatibu izan zuten ziegara.

Askatasunaren nahiak mugarik ez duela erakutsi digu Gatzak bere bizitzan, harriz harri, pausoz pauso joan da bere ametsa eraikitzen, liburu honekin egin duen bezalaxe.

Niretzat, liburu bat baino gehiago da Gatzak lan honekin eskaintzen diguna, eta nik bere alboan bizi izan dudan bezala, era berean irakurriko dut, berak etengabe erakutsitako duintasun eta adiskidetasun horiek presente edukita.

Jagoba Terrones Arrate»

Nik barru hauetan egitekoa eginda daukat. Hilabete gutxi barru harresi eternal hauek atzean uztea espero dut. Oraindik barruan dauden kide asko gogoan ditut. Agur bero bat bidali nahi diet Jaengo kideei, bakartze moduluan nirekin egunak partekatzen dituztenei, eta baita moduluetan dauden kideei ere. Euskal preso politiko guztiei.

Nire kontaketa hau etenda geratu zen duela 10 urte pasa. Hainbat urte lehenago, ihes saioaren ondorioz kartzela zigorra murrizteko aukera kendu zidaten; horrez gainera, baina, 197/2006 doktrina aplikatu eta ihesa baino lehen kartzela zigorra murrizteko onartuta neukan apurrak ere ez zidan ezertarako balio izan. Beste alde batetik, kartzelero batekin izandako istilu batengatik epaileak ezarritako sei hilabeteak eta ihesagatik ezarri zizkidaten hiru hilabeteak ere gehitu zizkidaten.

Giza Eskubideen Europako Auzitegiak indargabetu egin zuen 197/2006 doktrina, eta aplikatuta zeukaten hainbat euskal preso kaleratzeko agindu. Poztu egin nintzen, jakina, ebazpen horrek zenbait laguni zigorra laburtu zielako, batzuen kasuan egun bi besterik ez baziren ere. Niri, egia esateko, ez zidan mesede handirik egin, urtebete lehenago kalera irten nintzen eta. Hala, legez kartzelatik irten gabeko gehienezko denbora 30 urtekoa zen arren, nik ia 31 bete nituen.

Ziegan bakartuta hainbat urte eman ostean, uste izan nuen handik atera eta beste lagunekin batera egoteko aukera edukiko nuela. Eta hala izan zen denboraldi labur batean, baina ondoren moduluetan zehar barreiatu gintuzten, baten batzuk bakartze moduluan utzita. 2011ko apirilaren 13an, halako batean, ia 31 urtean antsiaz espero izan nuen eguna heldu zen. Neure bizitzako hesirik sendoenetako bat zeharkatu nuen, bizitza bat atzean utzi eta berri bati helduz.

Gauza asko aldatu ziren nire bizitzan, ez nik imajinatu nuen moduan. Ez dut esan nahi okerrago, ez hobeto, baizik eta desberdin. Gorabeheraz betetako bizitza hau ere ez da erraza, ezta hurrik eman ere; hala ere, beti moduan aurrera egin behar da. Maite dudan jendearekin harremanetan jarraitzen dut. Gurasoak utzi gintuzten, eta beste batzuk etorri. Goiztiri, dagoeneko koskortuta, ikasketak amaitzear; Kontxa neska-lagun ohia

eta lagunak hor daude gurasoen eta joan diren beste askoren hutsunea betetzen ahalegintzen. Kontxa eta biok banandu egin ginen; edozelan ere, bene-benetan diot orain hogeitaka urte bezala miresten dudala, eta gure arteko harremana ezin hobea dela. Behar izanez gero, laguntzeko prest dago beti. Berak ere, zelan ez, badaki ni ere horretarako nagoela.

Zornotzan, 2022ko ekainaren 23an

# XXIX

Irten aurretiko egunetan, amets nuen eguna hurbildu ahala, gero eta kontzienteagoa nintzen hainbestetan «egunen batean iritsiko» zela pentsatu izan nuen hura benetan gertatuko zela. Urte askoan urrun ikusi izan duzuna orain hurbiltzen sumatzen duzu eta, hala ere, sinisten zaila da.

Egun haren bezperan, kartzelara sartu berrien moduluan bakartu ninduten, ateratzerakoan lagunak agurtu ez nitzan. Hala ere, gure modulutik atera baino lehen, lagunen zeldetako ateetara hurbildu eta, ikusi ezin banituen ere, kolpe batzuk jo nituen. Ez zen besarkadarik egon, baina gure artean ez zen gehiegizko azalpenik behar. Aurretik ere gerta zitekeenaren jakitun geunden eta esan beharrekoak esanda eta bostekoak luzatuta zeuden. Aurreko egunetan lagun horiek eta beste moduluetakoek ere lerro batzuk bidali zizkidaten. Espainia eta Frantziako beste kartzela batzuetatik ere jaso nituen gutunak, inoiz ez ahazteko moduko agurrak.

Bezperako gauean lasai nengoen. Hamarrak aldera ohean etzanda nengoen, hausnarrean, eta lasai samar. Lokartu egin nintzen, baita zenbait aldiz esnatu ere, eta 2011ko apirilaren 13ko goiz hartan, egunsentia baino lehen, itzartuta nengoen atzera. Halako batean kaletik zetozen ahotsak entzuten hasi nintzen, baita bolanderen soinua ere. Senideak eta lagunak ziren, zenbait autotan eta autobus batean joan zirenak. Ez nekien zer ordutan aterako ninduten. Gosaria ekarri zidaten. Amaitu nuenean, kartzelero batek ziega zabaldu eta askatasuna sinatu behar nuela esan zidan. Nire bizitzaren zati gehieneko askatasuna sinatu gabe galdu ostean, berreskuratzeko sinatu egin behar nuen. Zeldatik atera nintzen azkenekoz, trasteak aldean. Kartzela sarrerako bulegoan nire dirua eman zidaten, eta kon-

tatzeko esan. Nik buruarekin baietz esaten nien, baina egia esateko, diru mota hura, euroak alegia, ikusten nituen lehen aldia zen, barruan plastikozko dirua edo txartel magnetikoa erabiltzen zen eta.

Kartzelatik irtetean, ez nuen aterik kontatu, ez nion inongo korridoreri erreparatu. Eraikinetik irten eta nire aurrean garita ondoko barrera altxatu zen. Jendea ikusten hasi nintzen, nire begiak Goiztiriren bila mugitzen ziren, lehenengo besarkada berarentzat zen eta. Hala izan zen, eta gero Kontxa, lagun guztiak... sentsazioak pilatu egiten zitzaizkidan. Berehala alde egin genuen handik, leku lasai baten bila. Ultraeskuindar talde bat zegoen inguruan, oihuka eta bere banderak astintzen. Kazetariak ere baziren, ugari. Gogoan dut Info7koak hurbildu zitzaizkidala, baita australiar bat ere. Jatorra iruditu zitzaidan. Grabatu egin zuen nire irteera, eta handik egun batzuk barrurako hitzordua ipini genuen elkarrizketa egiteko. Australiarra autobusean itzuli zen, herriko jendearekin. Ni, familiarekin, auto batean nindoan.

Handik irtenda, ez dakit artean Andaluzian geunden edo Gaztela-Mantxara sartuta, benta batean gelditu ginen, momentu hura gozatzeko asmoz. Ez genuen bidea bakarrik egin, gure atzetik kaleko jantzitako zenbait poliziak autoz bentaraino jarraitu ziguten eta. Hamaiketakoa egin genuen, xanpainaz bustita. Poliziak begira zeuden, baina gure giroa ez zen eurentzat egokiena. Hunkigarria izan zen jendearekin egotea gure artean kristalik eduki barik.

Ondoren Euskal Herrirako bidea hartu genuen eta Madrildik igaro ostean, Boceguillasen Guardia Zibilaren kontrol bat topatu genuen, edo hobeto esateko, eurek topatu gintuzten gu; izan ere, autobusa geldiarazi eta goitik behera miatu zuten, bertan zihoazen lagun guztiak identifikatu zituzten eta txoferrari 1.500 euroko isuna ezarri zioten, miaketan labana bi topatu zituzte-

lako; bat txoferrarena zen, eta bestea lagunen batek gazta eta ogia zatitzeko eraman zuena. Gure autoa ere geldiarazi zuten, baina dokumentazioa eskatu eta begiratu ostean, aurrera segitzen utzi ziguten.

Autobuseko lagunek, edonola ere, berri pozgarria hartu zuten bidean. Bertan Antton Troitiñoren loba Mattin zihoan, eta dei egin zioten Madrilerako bidea hartu behar zuela esanez, bere osaba kalean zelako. Berehala deitu ziguten guri albiste ona jakinarazteko. Kasualitatea, gero, hainbeste kartzelatan lagun izandakoak egun berean kalea zapaltzea.

# XXX

Zornotza ingurura heltzean, esan zidaten gurasoak Etxanon zeudela, lagun baten baserrian. Bertan nuen hurrengo geldialdia herriko plazara agertu aurretik, gurasoak besarkatzeko. Horrenbeste urteren ostean, adinduta, gero eta gutxiagotan joaten ziren bisitan, eta ez gogorik ez zeukatelako, hain zuzen. Hiru urtetik gora ziren ez nuela aita ikusten; hiru urte haren irribarrea, edo begirada kezkatsua, ikusi barik. Lehenago Mirentxinen furgonetan eramaten zuten noizik behin. Sekulako poztasuna hartzen zuen aitak Mirentxineko lagunekin, hitz onak besterik ez zituen eurentzat. Izan ere, lagun jator eta miresgarriak dira, sentsibilitate ikaragarrikoak eta elkartasun hitzari zentzu betea ematen diotenak. Gurasoen poza nabarmena zen, ia ez zuten berbarik egin, ez zuten asmatzen, baina haien gogobetetasuna ingurura zabaltzen zen, bizitzak ni kalean ikusteko beste iraungo zien zalantza uxatuta, neuk ere denbora luzean eduki nuen zalantza bera desagertuta. Egunero egunkaria zabaldu eta eurek ikusi nahi zuten albistea ikusi barik hainbeste urte igaro ondoren. Egun haietan hain gogoz irakurri zutena ez zen presorik gabeko kartzelak iragartzen zituena, eta nire askatasuna bezainbeste desio zutena, baina bai eurentzako bide ikaragarri luze bateko atseden nabarmena.

Poz-pozik... eta zahartuta topatu nituen, zahartuta eta oso makalduta. Isilik. Euren bizitza ez da samurra izan. Beti aldats gorakoa. Gazte-gaztetatik. Gerra garaian, umetan, inguruko bonbardaketak ikusi zituzten, ama Arrigorriagan eta aita Erletxe-Galdakaon jaio ziren eta. Gerra ostean ere gorriak ikusi zituzten, eta ondoren, diktadura amaitu baino lehen eta diktadura amaituta ere, beste gerra batek harrapatu zituen erdian, baina eurek argi zeukaten zein zen beren lekua, beti beren herriarekin, zapalduekin, sufritzen duenarekin, makurtzen ez denarekin. Urte luze eta gogorrak bizi izan dituzte. Asko sufri-

tu eta asko eman dute biek, ezer eskatu barik, eta horregatik daukate nire eta beste jende askoren betiko esker ona.

Gurasoak agurtu ostean, etxerantz joan ginen. Plazara iritsi ginenean, jendez lepo zegoen, gehien-gehienak niri ongi etorria egitera joanak. Ez denak, baina. Plaza Ertzaintzak hartuta zegoen, furgonetak plaza erdian. Debekatuta zegoen ongi etorria, debekatuta jendearen poza, inoren iraina balitz bezala hartuta. Ez dut ulertzen nor mindu dezakeen sentimendu garbi eta humano bat adierazteak. Autoan etxeko atariraino joan ginen, jendetzaren artean. Autotik irten nintzenean, baten batzuek ni zuzenean agurtzeko aukera eduki zuten; egia esan, ez dakit nortzuek, zurrunbilo haren erdian ez bainintzen oso kontzientea.

Beti ere ertzainen begiradapean, etxera igo ginen. Berehala, balkoira agertu ginen. Jendea oihuka, Ertzaintzaren furgonetetako sirenen argiak piztuta, ertzainen pilota-jaurtitzaileak guri bideratuta. Herritarrak agurtu nituen, baita haien presentzia eskertu ere. Xanpain botila atera eta euren aldeko topa egin genuen balkoian. Neure argazkia, balkoian eskegita zegoena, handik kendu eta balkoitik behera jaurti nuen txalo artean. Balkoian euskal presoak etxeratzeko aldarria duen banderatxoa bistan geratu zen. Agur labur bezain hunkigarria izan zen. Pankarta asko ikusten nituen, besteak beste "bizi arteko zigorrik ez" ziotenak. Jende ezaguna, barruan egondako lagun asko, Euskal Herri osotik etorriak... Denak ere jende ausarta, ertzainen aurrean erraz kikiltzen ez zirenak. Inguruko etxeetan jendeak lapikoak astintzen hasi zen, sekulako zarata sortuz, Ertzaintzaren jarreraren aurka protesta egiten. Giroa gero eta beroago zegoen. Goizean nire bila joan zen autobusa oraindik heldu gabe zegoen. Eurekin akordatu nintzen.

# XXXI

Bi egun geroago, herriko tabernan elkartu ginen. Hara sartzeko eskailera batzuk daude, egun horretan jendez beteta. Korridore bat zabaldu zuten ni pasatzeko. Sartu baino lehen, Goiztirik "Agurra" dantzatu zidan, nik buruan ongietorriaren txapela neukala. Alabak dantza amaitu zuenean, txapela ipini nion, eta berak nire burura bueltatu zuen. Barrura sartu eta nire argazkia, mostradore gainean eskegita zegoena, kendu egin nuen. Preso politikoen argazkien aurkako ofentsiba betean zeuden gobernuak eta auzitegiak; hala ere, jendea ez zen erraz kikiltzen eta ez zuen tabernan edo kalean argazkiak erakusteko aukerarik galtzen, eta hainbat lekutan ni irten arte ez zuten nire argazkia kendu. Goiztiriri eman nion argazkia, mutil gazte bat ageri zen argazki zahar hura, eta berak apurtu egin zuen negarrari emanda, zeharo hunkituta.

Apirilaren 15ean gaupasa egin nuen, aspaldi luzetik lehen aldiz. Izan ere, 16ko goizeko 5:00etan Korrika igaro zen Zornotzatik, eta neu izan nintzen herrian zehar lekukoa eraman zutenetako bat, beste zenbait preso ohirekin batera. Zapatua zen, Korrika Donostian amaitzeko bezpera.

Hurrengo domekan Aberri eguna zen, Gernikan. Hara bildu zen jendetzaren artean pasatu nuen eguna. Urte asko ziren horrelako ospakizun jendetsu batean parte hartzen ez nuela. Aspaldiko partez ikusi gabeko lagun asko ikusi eta agurtu nituen. Baita ezezagun asko ere, zorionak ematera hurbiltzen zirenak. Arratsaldean, Zornotzara bidean, telefono dei bat jaso nuen. Gernikatik bertatik, hain zuzen. Han zegoen lagun bat, Xabier Izaga, Kubatik iritsi berria, beste lagun baten berri eman nahi zidana. Joseba Sarrionandiaren berri eta haren oparitxo bat zekarren. Artean ez zen gauza ezaguna Joseba non bizi zen. Hurrengo domekan elkartu nintzen Xabierrekin. Atera nintzen

egunean Joseba nirekin akordatu eta enkargu hori eman ziola esan zidan. Joseba Herreratik Martutenera joan zen eguna etorri zitzaidan gogora. Herreran emango zuen azken eguna izan zen. Modulu berean geunden eta agurtzera etorri zitzaidan. Nora zihoan esan eta besarkada bat eman genion elkarri, baita musu bat ere. «Ea handik alde egiten duzun», esan nion. «Ez dut uste», erantzun zidan berak. Ez dakit zaila izan ote zen, baina lortu egin zuen. Berak bidalitako oparia etxean dago.

Lehenengo egun haietan ez nuen egoera berriaz pentsatzeko astirik ere eduki. Denbora guztia etxekoentzat zen, eta kalean lagun, ezagun eta ezezagunentzat: agurrak, besarkadak, opariak... Eta oraindik ez nuen neure bizitza egun batetik bestera aldatu zen kontzientzia. Kontua da herritik 22 urterekin eraman zuten mutil hark 53 zituela itzuli zenean. Eta topatu nuen herria ez zen 31 urte lehenago utzi nuena. Ez herria, ez jendea. Aurreikuspenak, asmoak, ilusioak, bizitza erdia baino dezente gehiago barruan eta bizirik atera izana, duintasuna, koherentzia... horri guztiari heltzeko ariketa luze eta nekeza egin ostean, kalean errazago izango zelako ustea egiaztatzeko momentua zen.

Kalean dena desberdina dela ikusten duzu. Batzuetan onerako, beste batzuetan txarrerako. Herria 31 urte geroago topatu duzu. Kalean egunik egun dagoenak apenas igartzen duen aldaketarik, bai itxurari dagokionez, bai jendearen bilakaerari dagokionez. Gehienek gogoan zaituzte, herriko preso guztiak bezala, baina zuk batzuen arrastoa galdu duzu urteen joanean. Batzuek eurekin bizi izandako pasadizoren bat gogoraraziko dizute, beste batzuen akordua denboragarrenean etorriko zaizu, baldin etortzen bada.

Beste mundu batetik zatoz. Mundu hartan, egunik egun, urterik urte, gorabeherarik gorabehera, zelan jokatu ikasi duzu, egoera bakoitzari, gogorrenari, latzenari ere, zelan aurre egin. Orain, gaztetan utzi zenuen beste mundu honi, irudi hari heldu behar diozula pentsatzen duzu, baina luze gabe konturatzen zara ez dela mundu bera eta mundu berri honetan bizitzen ikasi egin behar duzula ostera ere. Batzuetan kartzelan baino babesgabeago sentitzen zara, zenbait egoeratan ez dakizu zelan jokatu. Beste alde batetik, ez duzu topatu zuk buruan zeneukan gizartea, beharbada idealizatuta zeneukana. Ez dut esan nahi etsipenez ikusten dudala, baizik eta arlo batzuetan nabarmen aurrera egin duen bezala, beste batzuetan atzera eginda edo gutxienez trabatuta sumatzen dudala; esate baterako, balio batzuei dagokienez.

Esate baterako, barruan feminismoaren aurrerapausoak sumatzen nituen, jendartearen pentsaera aldaketa, eta nabarmena da aurrera egin dela, baina kalean ikusi dut ez dela hainbestekoa, zenbait arlotan behinik behin. Instituzioei asko falta zaie herri mugimenduen mailara heltzeko. Kirol arloan, adibide bat baino ez ipintzearren, arreta eman zidan gertakarik batek. Athleticen neskek San Mames zapaldu barik ere liga irabazi zutenean, ez zieten gabarra ateratzen utzi. Gizonezkoek baino meritu gutxiago ote dute? Beti bigarren planoan. Garrantzi handiagoa ematen diote gizonezkoen entrenamendu bati nesken edozein garaipeni baino. Eta hedabide gehienek horrela jasotzen dute. Kezkagarria iruditzen zait halaber oro har gazteen artean pentsaera aldaketa benetan izan ote den edo norainokoa... Horixe nuen buruan, besteak beste, balio batzuei dagokienez gizartea trabatuta sumatzen dudala esan dudanean.

Beti eta beti aldats gora bizi izan zara denbora luzean, eta inoiz pentsatuta zeneukan gero malda behera helduko zela eta, edozelan ere, aldatsen bat topatuz gero, beti gora eta gora ohituta, erraz asko gaindituko zenuela. Baina hemen ere ikasi beharra dago, hutsetik, hutsetik baino beheragotik, egunik egun, Xabier Leteren kantuak dioen bezala, sortuz eta sortuz norberaren aukerak.

Banekien gauza asko aldatuta topatuko nituela. Telebistan ikusita neuzkan sakelako telefonoak, azken urteetako kotxeak... Behin, kartzelako bisita batean, lagun batek bere autoko «giltza» erakutsi zidan, urrutiko aginte txiki bat, alegia. Baina buruan daukazun erreferentzia norberak ezagutu duena da. Betiko paisaia, betiko jendea topatzea espero duzu, baina zu betikoa ez zaren bezala, besteak ere ez dira betikoak. Esan dut sakelako telefonoak eta beste hamaika gauza berri telebistan ikusita neuzkala, baina inoiz horrelakorik erabiliko nuela burutik pasa ere barik. Eta egun batean poltsikoan daramazu bat, eta sakelakoaren soinua entzuten duzunean, ez dakizu zurea den edo beste batena, eta zurea dela konturatzen zarenean, ez duzu asmatzen zer botoi sakatu behar den, ezta baten bati deitu behar diozunean ere, edo oker egiten duzu. Dirua bera erabiltzen ere ikasi behar duzu. Espetxera sartu nindutenean pezetak erabiltzen ziren, baita kartzela barruan ere; ondoren kaleko dirua debekatu egin zuten eta kartoizko edo plastikozko txartelak jarri zituzten. Eta kalera irtendakoan euroak erabiltzen ziren. Kartzelatik irtetean, pekulioan neukan dirua eman zidatenean, ondo zegoela esan nien, baina egia esateko, ez nekien zenbat zen ere.

Itsasoa eta mendiak, horiek bai, betikoak ziren. Edo antzekoak behintzat, egia esateko, mendi batzuk errepideren batek edo batek baino gehiagok zeharkatuta topatu nituen eta.

Onerako aldaketa bat ere sumatu nuen. Herritik eraman nindutenean, Bizkaian ez zegoen sagardotegirik, nahiz eta baserrietan sagardoa egiten zen. Itzuli nintzenean, berriz, hainbat sagardotegi aurkitu nituen. Kartzelatik irten eta urtebetera, haietako batek, Uxarte sagardotegiak, denboraldiari hasiera ematera gonbidatu ninduen. «Sagardo ona, sagardo polito!» esan nuen txotx egitean, eta barruan zeuden guztiek hurrengo urtean nire esperientzia hura eduki zezaten aldarria egin nuen.

Eta txapel bat eman zidaten. Bigarrena, barruan nengoela beste bat bidali zidaten eta.

# XXXII

Lehenengo momentutik igarri nuen lagunen eta familiaren babesa. Tartean barruan egondako batzuena, eta hau diot oso garrantzitsua delako, eurek bizi izandako esperientzien berri jakitea ondorengoentzat baliagarria izan daitekeelako. Baliagarria delako. Hain zuzen ere, Harrera taldeak horretaz arduratzen dira azken urteotan, kalera irteten diren presoei kartzelaren ondorioak eramaten laguntzeko asmoz, batez ere hasieran. Orri batzuk eman zizkidaten aholku batzuk jasotzen zituztenak eta inguruan lagunak banituela jakin nezan. Lagunak edozertarako. Orri batzuk besterik ez ziren, baina benetan eskertu nituen, konturatu bainintzen oso ondo zekitela zertaz ari ziren. Zuzen-zuzenean asmatu zuten, nire kasuan behintzat, aurrean nituen askotariko arazoen gaineko kezkak deskribatzen, eta horiek gainditzeko eskaini zidaten laguntza guztiz sinesgarria zen. Irakurtzen hasi eta nire interesa piztu zen, benetan gustura irakurri nituen, nire hizkuntzan ari zirelako, nire erregistroan, alegia. Enpatia handiagoa daukate, badakitelako, antzeko sentsazioak bizi izan dituztelako. Eskertzeko moduko laguntza, inondik ere. Hura irakurrita, argi ikusi nuen arazo falta izango ez banuen ere, kartzelaren ondorioak gaindituko nituela. Laguntza gehiago ere eskaini zidaten, nik ezer eskatu gabe ere. Haiek adi eta begira zeuden. Ito gabe, baina beti hurbil.

Ez da inongo albistea esatea lan mundua ez dela erraza edonorentzat. Lantegietan makinak ugaritu egin dira; langileak, berriz, urritu. Anbulatorioko txanda hartzeko ere makinak daude. Eta horiek erabiltzen ikasten duzunean, aldatu egingo dizkizute. Berdin aparkalekuetan ere. Zapatuetan Gasteizera etortzen hasi nintzenean, ez nintzen ondo moldatzen; egia esateko, neure istorioak eduki nituen, esate baterako, dirua sartzen den zulotik tiketa sartu nuenean. Makinak jan egin zuen eta gero

hango arduradunari azalpenak eman behar izan nizkion. Zer pentsatuko zuen emakume hark. Eta zer pentsatuko zuen hurrengo astean ordaintzeko goizean hartutako tiketa ipini beharrean, gordeta neukan zahar bat ipini nuenean; jakina, gero irteerako barrera ez zen zabaltzen, eta emakumeak esan zidan: «apurtu tiket zahar guztiak».

Laster konturatu nintzen arlo guztietan bezala lan egiteko ere prestaketa beharko nuela. Lanbideko laguntza oso txikia da eta gainera berehala amaitzen da. Harrerako lagunak hor zeuden, jakina, eta norberak ezer esan gabe ere, badakite nor dagoen beharrean. Hala ere, oro har, inori ez zaio laguntzen menpe bizitzea gustatzen. Nik lan egin nahi nuen, jende gehienak moduan. Eta lana bilatzen ere Harrerako lagunek nire ondoan izan ziren.

Lehenengo gurasoen dendan ibili nintzen, baina ez zen, ez da, denda txikietarako garai onena, krisiak, merkataritza gune handiak eta azken aldian *online* erosketak merkatutik botatzen ari dira herriko dendak. Beraz, Harrerak proposatuta, autobideko ordainlekuetara jo nuen. Han ibili nintzen tarteka, deitzen zidatenean, alegia. Hura niretzat ez zen etorkizuneko plana, ezta hurrik eman ere, erabateko prekaritatean bizi nintzen eta. Esango nuke horixe dela gaur egungo lan munduko ezaugarri nagusia. Ez diot teknologia txarra denik, jakina, baina nik uste nuen jendartearen bizitza hobetzeko balio behar zuela, eta ikusi dut askotan okertu egiten duela, besterik gabe lanpostuak urritzea ez baita irtenbidea.

Gaur egun zerrategi batean lan egiten dut. Ez da munduko lanik onena, gogorra da, baina gutxienez jarraikortasuna duen lana da, soldata finko bat ematen didana. Karretilla erabiltzeko ikastaroa, sua amatatzekoa, garabia, kamioia gidatzeko baimena, lehenengo oinarrizkoa eta gero artikulatua... hamaika ikasta-

ro egin ditut lan munduan aukera zabalagoa edukitzeko, nahiz eta urtetan aurrera goazen. Edonola ere, zorionez osasuntsu gaude, gauzari heltzeko moduan. Hori bai, ibilitako bidean hartutako zama lepoan. Enpresako azterketa medikuan entzumen probak egitean beti sumatzen dute eskumako belarriko entzumena oso urrituta daukadala. Sakelako telefonoz berba egiterakoan ondo igartzen ditut neuk ere entzuteko zailtasunak. Eta horrelakoetan, 1990ean Sevilla II espetxean eman zidaten jipoiaz akordatzen naiz atoan, hilabete batez entzumena galduta eduki ninduenaz.

Barruan zaudela, zuk edozein egoeratan, gogorrenean ere, badakizu hobeto edo okerrago erantzuten, baina kalean hanka sartzeko beldurra daukazu etengabe, ez zara berehalakoan ohituko. Hori ere ikasi behar duzu. Eta edozer bideratzeko paperak lortu eta entregatu behar, leku batetik bestera ibilita... Horri guztiari aurre egiten laguntza gehien eman zidan lagunetako bat Joseba Marina *Obrerito* izan zen, baita haren emazte Josune Irakulisek ere. Joseba ere kartzelan egon zen 1960ko hamarkadan, baita handik ihes egin ere. 1969ko abenduaren 11n, beste 14 lagunekin Basauriko espetxetik alde egin zuen. 2019ko uztailaren 23an hil zen Etxanon, Zornotzako jaiak zirela.

# XXXIII

Ingurukoen babesa garrantzitsua bada ere, ihesbideak bilatu behar dira, barruan bezala. Izan ere, han, eguneko ordu gehienak ziega batean bakarrik zaudela, liburu bat esku artean, ordu luzeetako gogoetak egin eta handik kanpoko munduak sortzen dituzu. Eta ohitura horiek kanpoan ere irauten dute, urteetako bakardadea ohitura bihurtu da eta. Horregatik sarritan jende artean egonda, are gehiago zarata baldin badago –eta gaur egun edonon dago zarata ikaragarria–, leku bakarti, isil baten beharra sumatzen duzu. Ez naiz, ez, gaztetako hura, beti lagunekin, jende artean eta saltsa guztietan ibiltzen zen hura, urteetan bere buruarekin bakarrean bizi izan dena baizik. Ezinbestean bakarrik. Hainbeste denboran gogoz kontrakoa eta zigorra izan den egoera hori orain premia bihurtu da. Barruan lagunekin, norekin ibiltzen zaren kontrolatzen dute, zure gogoko ohiturak eta abar. Hori guztia erabili egingo dute zigortzeko, min emateko. Lagunengandik aldenduko zaituzte, eta beste lagun batzuekin gustura ikusten zaituztenean, atzera aldatuko zaituzte lekuz. Bakartu egingo zaituzte, esku-lanak egiteko tresnak kenduko dizkizute, are bizarra egiteko eta garbitzeko tresnak ere eta goizeko tarte batean baino ez dizute erabiltzen utziko... Harik eta momentu batean ez daukatela zuri ezer gehiago kentzeko, ez daukatela ezer gehiago debekatzerik konturatzen zaren arte. Orduan zeure buruaren jabe zara. Ez zaude haien menpe.

Eta nire kartzelaldian, nire bizitzan, azken batean, hain normala edo, hobeto esateko, hain ohikoa izan den bakardadearen falta sumatzen dut. Batzuetan haren bila ibiltzen naiz. Lasaitasun bila, beste lasaitasun baten bila. Barruan beti gogoan izan dudan lasaitasuna, haizeak, mendiak edo itsasoak ematen duten betetasun sentsazioa sentitzeko aukera, kalera irteteko eguna hurbildu ahala, gogoan gero eta biziago izan nuena. Orain zel-

dako bakardadean nuen burujabetza sentsazio hura sentitzen dut, han nengoela gogoan nuena ikusten eta ukitzen dudanean. Eta orduan bezala, edo argiago, askatasunak prezio handia daukala igartzen dut. Ez naiz ari telebistan saltzen duten askatasunaz, norberak gura duenaz eta behar duenaz baino. Garestia da gero! Barruan bezala kanpoan ere.

Itsasoa irudikatzen nuenetako batean, han barruan, gogoratu nintzen ez nekiela igerian. Ikasi egin beharko nuen. Eta ikasi nuen, irtendakoan. Bide batez, burua urpean sartzeak ematen zidan ikara galdu nuen. Ahal dudan guztietan itsas ertzera hurbiltzen naiz, noiz edo noiz arraunean ere egin izan dut, kostata, baina beti bueltatu izan gara, osorik bueltatu ere. Edo bizikleta hartu eta mendiren batean aldats gora plazer bihurtzen den nekearen bila joaten naiz. Badakit ez dela sentsazio berria; izan ere, baten batek nik baino lehenago igarri zuen: «gogoko aldapan, nekerik ez». Oraindik asko falta zait nire mendi ikerketa osatzeko: kobazulo ugari, esate baterako Baltzolakoa, Goiztiri hara joaten baitzen eskalatzera; halako tontorra, haragoko larrea, Belatxikietako beleen hegalaldia; Bizkargiko tontorra, 36ko gudan han jausitako lagunak eta ondoren jausitako beste batzuen errautsek inguratuta... Edo hain amestutako inguruetan zehar galtzeko hamaika bide, itsasora eta inguruko mendikateetara hainbat begirada, urte askoan irudikatu ditudan lekuak, batzuk poema batera bilduak:

## *Belatxikieta*

*Zubira heltzen naizenean*
*argitasuna den egunagaz*
*ikusten zaitut, mendia.*
*Goizeko hamarrak aldera*
*han zagoz, nire presentziari begira.*
*Lainoak eta edurrak*
*estaltzen deutsue tontorra.*
*Haitz sendoa zara,*
*horrenbeste aulki harri*
*eusteko, haizeak eta ekaitzak*
*albotik jotzen zaituenean.*
*Urak zabaltzen deutsuz*
*bideak eta tximurrak, untzi-errekak*
*topetan zoazenean.*
*Haitzuloetan altxor preminazkoak*
*gordeta dekozuz barruko bazterretan.*
*Zugaz irudi onenetakoak*
*koiu ninduan, konkor gainetik*
*gure herria urrunean ikusterakoan.*

# XXXIV

Kartzelatik irten osteko lehenengo egunetan, etengabe ibiltzen ziren kazetariak etxeko atariaren inguruan, nire argazkiren bat lortu nahian. Inoiz kotxe batetik saiatu izan ziren, baita ni eskuaz aurpegia estaltzen saiatu ere. Elkarrizketa bila ere etorri izan ziren, batez ere Estatu espainoletik, baina nik hemengo zenbait hedabiderekin baino ez nuen onartu, salbuespenenak salbuespen; esate baterako, Australiatik nirekin hitz egitera etorri zen kazetari bati onartu nion elkarrizketa. Kartzelako atean izan zen, herriko lagunekin batera autobusean joanda, eta ondoren zenbait egun eman zituen Zornotzan. Baina hedabide espainol ezagunei ez nien berbarik bat ere egin. Batzuetan etxetik irten eta baten bat agertzen zen ezkututik edo auto batetik argazkia egiten, batzuetan gezurretan hurbiltzen ziren etxeko atariraino kasu egin niezaien.

Edonola ere, ez nuen ondo ulertzen zer dela-eta niri egin nahi zizkidaten hainbeste elkarrizketa. Barruan urte gehien egin duen presoa nintzelako? Bai, baina badaude beste hainbat lagun antzeko kartzela-denbora egin dutenak. Badira nirearen antzeko egoera latza bizi izan duten beste asko. Izen bakan batzuk baino ez aipatzearren, Garratz Zabarte, Jon Agirre, Jon Bilbao Moro, Josu Diaz de Heredia, Joxerra Abetxuko, Jose Ramon Martinez de la Fuente *Txori*, Juan Jose Legorburu *Roki*, Pakito Lujanbio eta beste hainbatek 25 urtetik gora eman dituzte, batzuek 30 ere bai. Eta lerrook idazteko momentuan baita denbora hori gainditu dutenak ere: Jon eta Unai Parot, Jakes Esnal eta Frederik *Xistor* Haranburu.

Ez zait emakumeak aipatzea ahaztu; nahita utzi ditut geroko, aipamen berezia merezi dutelako. Izan ere, gizonezkoek besteko zigorrak bete dituzte, batzuek hogeitaka, baita 30en bueltan ere: Gotzone Lopez de Luzuriaga, Ines del Rio, Inma Noble, Joxepa Ernaga, Belen Gonzalez Peñalba eta beste asko, eta gizonezkoen bizi-baldintza berdinetan edo okerragoetan. Sakabanaketa berberean, baina gizonak baino askoz gutxiago izanda, haietako asko kartzela batean bakarrik egoten dira, alegia, berekin kolektiboko lagunik izan barik edo, onenean, modulu batean bakarrik.

# XXXV

Hainbeste urtean bizi izan zaren egoera atzean geratu da, baina ez da erraza burutik kentzea. Areago, lagun asko hainbeste gauetan errepikatzen zaidan amesgaizto horretan gau eta egun bizi direla jakinda. Lagun horiek, batzuk ezagunak eta beste batzuk ez, eguneroko hizpide eta kezka ditut. Berdin iheslariak eta deportatuak ere. Izan ere, hauek ere bizimodu nekeza daukate, batzuk hainbat hamarkadatan etxetik kanpo, baita Euskal Herritik urrun ere. Horietako bat, Tomas Linaza aspaldi luzeko laguna, bisitatzeko aukera eduki nuen. Betiko harremanari eutsi genion gutun bidez, eta kartzelatik irten aurretik buruan zebilkidan ateratakoan hura ikusteko Cabo Verdera joateko asmoa. Eta ahal bezain laster halaxe egin nuen.

Egun batean, Lemoako lagun batek Tomasi telefonoz deitu eta esan zion: «Itxaron apur bat, Tomas». Neuk hartu nuen telefonoa. «Zer dago, Tomas?», galdetu nion, eta berak beste galdera batekin erantzun zuen: «Nor zara zu?». «Gatza», nik. «Ez da egia izango!», harrituta, berak. Neure asmoaren berri eman nion eta berak momentuan hasiko zela etxea prestatzen esan zidan.

Horretara, kartzelatik irten nintzenetik sei bat hilabete igarota, pasaportea atera berritan, Loiuko aireportuan nengoen Kontxarekin, Goiztirirekin, Tomasen ama Iñaxirekin eta Lemoako lagun harekin, Lisboarako hegazkina hartzeko zain. Ez zen lehenengo aldia hegazkinez bidaiatzen nuena, soldaduskan nengoela behin baino gehiagotan egin bainuen Sondika eta Santiago de Compostela artekoa. Gogoan dut Kantabria eta Asturiasen gainetik igarotzean zelako bista ederrak zeuden: Europako mendiak. Lisboarainokoa luzeagoa izan zen, baina ez gehiegi. Hori bai, hango aireportuak ahoa bete hortz utzi ninduen, hain zen handia, Loiukoaren aldean behintzat. Han, zortzi ordu itxa-

ron behar izan genuen Cabo Verdera abiatzeko. Oso astuna izan zen itxaronaldia. Tomasen ama edadekoa, alaba eta denok aspertuta. Edozelan ere, hara joateko ilusioa ez zitzaigun erraz zapuztuko.

Halako batean hartu genuen Cabo Verdeko hegazkina. Gauez heldu ginen Santiago Uhartera. Praiako aireportuan hegazkinetik jaitsi orduko, alde guztietara begira hasi nintzen Tomas non agertuko eta, halako batean, aspaldi ikusitako argazki bateko irribarrea topatu nuen. Hantxe zegoen Tomas, gure zain. Hogeita hamar urtetik gora ikusi barik, ile gutxiagorekin, baina ez nuen hutsik egin, bera zen. Elkarrengana hurbildu eta aspaldi luzeko besarkada heldu zen. Guztiok agurtutakoan, autora sartu eta bere etxera eraman gintuen. Han, bere emaztea aurkeztu gintuen. Harrituta utzi ninduen zelan egiten zuen portugesez, zelako erraztasunez. Hamabost egun eman genituen Tomasen etxean, haren seme-alabak ezagutu genituen, irla osoan zehar eraman gintuzten bertako herriak eta paisaiak erakusten.

Gu autoz ibiltzen ginen, eta konturatu nintzen hango jendea, autobusetan barik, furgonetetan joaten zela leku batetik bestera. Furgoneta bete arte ez zen irteten; beraz, pazientzia handia eduki behar zuten norabait joan nahi zutenean. Oihuka betetzen zituzten furgonetak, bakoitza nora zihoan iragarriz. Bidaiatzeko modu hura ez zegoen guretzat egina, europar pazientzia gutxikoontzat. Oso trebeak ziren arrantzan, eta oinarri-oinarrizko metodo eta ekipamendua erabiltzen zituzten. Urpekari hegatsak eta betaurrekoak eta, zeukanak, neoprenozko jantzia soinean, sare bat hedatzen zuten uretan. Aurretik zihoanak, saretik tiraka, arrain multzoak bilatzen zituen, eta atzean beste batek sarearen atzealdeari helduta, flotagailu bat eramaten zuen, kamioi baten pneumatikoa, alegia. Eta barra-barra harrapatzen zituzten.

Cabo Verde hainbat irlak osatzen dute. Santiagon, Tomas bizi zen lekuan, bazeuden beste zenbait euskal errefuxiatu eta, jakina, haiek agurtzeko ere baliatu genuen bidaia. Urte batzuk lehenago hil zen baten alargunarekin ere egon ginen. Endika Iztueta santurtziarra Cabo Verden hildako hirugarren euskal deportatua izan zen; hura baino lehen, Juanra Aranburu eta Angel Letek ere han galdu zuten bizia.

# XXXVI

Nire kontaketa hau amaitu baino lehen, beti gogoan ditugun hildako lagunak ekarri nahi ditut lerrootara. Ugari dira, haietako asko kalean eta barruan ezagututako burkideak, benetako lagunak, muturreko egoeretan egondakoak. Haien heriotza bat-batekoa izan da batzuetan, eta beste batzuetan prozesu luze baten ondorio, bertatik bertara ezagutu ditugun iragarritako heriotzak.

Denentzat latza den egoera pentsa zer den osasunez makal dabilenarentzat, are gehiago gaixotasuna beharrezko arreta jaso barik eraman behar denean. Burura datorkit Josu Retolaza eibartarra, 1987an hila, askoz lehenago hasi bazen ere bere gaixotasunaren ondorioak igartzen. Izan ere, 1986. urtearen hasieran Carabanchelgo ospitalera eraman zuten bizkar aldean biopsia bat egiteko.

Garai hartan hamabost egun eman nituen nik Alcala Meco kartzelan, Carabanchelgo ospitalean sudurreko ebakuntza bat egiteko kontsulta neukalako. Egun haietako batean planto egin genuen gure gaineko kontrola areagotzeko egin zuten obra batzuengatik, modulu batean txakurtegi edo kartzeleroen garita berri bat egin zutelako, hain zuzen, eta gu modulu horretara pasatzera derrigortu nahi gintuztelako. Guk aginduari uko egin eta egun osoko plantoa egin genuen. Gauean, gure zeldetara sartu ginen eta kartzelero mordo bat etorri zen ateak ixtera. Halako batean Polizia Nazionala agertu zen moduluan. Zarata entzun nuenean, *«¿Qué pasa?»*, esan nuen nik, eta eurek: *«¿Qué pasa? Ahora verás lo que pasa»*. Geletako ateak zabaldu zituztenean, ferra hotsean sartu ziren, zoro lez oihuka. Gure bizkarrean euren borrak astindu eta garita berria zegoen modulura eraman gintuzten indarrez. Zeldetara sartu eta ateak itxi ostean, alde egin zuten. Nire ondoko zeldan Josu Retolaza

zegoen, Herretatik hara eraman baitzuten egun batzuk lehenago, esan bezala, Carabanchelgo ospitalean biopsia egiteko. Ospitalean aztertzeko egin zioten ebakia odoletan zeukan, poliziek zartako batez zabaldu zioten eta. Egun batzuk geroago minbizia zuela jakin zuen.

Josu Retolaza hiletsita irten zen kalera, bere gaixotasunak atzera-bueltarik ez zeukala argi zegoenean. Josu irten eta zenbait hilabete igarota, Herreran, beste itxialdi batean geundela, haren heriotzaren berri jaso genuen. 1987ko maiatzaren 19a zen. Ikaragarria, gero, barruan bezala kanpoan ere eta azken momentura arte zer duintasunez egin zion aurre bere egoera latzari.

Josu ez zen zerrenda beltz eta luze bateko lehenena izan. Ezta Herreran larri gaixotu zen bakarra ere. Urtebetetsu lehenago, Joseba Asensio Artaraz *Kirruli,* kartzelako medikuen arabera, «katarro» soil baten ondorioz hil zen 1986ko ekainaren 8an. Egia bakarra, egia latza, Josebaren heriotza da, katarro bat bezala tratatuta nekez osa daitekeen biriketako infekzio batek eragina.

Epailea kartzelara joan zenean, Kirruliren gorpua handik atera baino lehen, modulu guztietako lagunok azken agurra emateko aukera eskatu genuen. Ez zuten oztoporik ipini. Kartzelako korridore bateko sarreran ipini zuten gure lagunaren gorpua eta, txandaka, denok igaro ginen handik, batzuk "Eusko Gudariak" abestera, beste batzuk beren isiltasuna eskaintzera, denok begiak bustita, tristura erraldoi batek hartuta. Halako adinean aurrera goazenok ondo gogoan dauzkagu haren zerraldoaren irudiak, Bilboko kaleetan, senide eta lagunek babestuta eta inguruan txakurrak haien aurkako eraso bortitzean. Gure aita, beste hainbat senide bezala, nola ez, bertan izan zen, eta kaleko istilu haietan jaso zituen borra kolpeen ondorioz atzamar

bat apurtuta itzuli zen etxera. Oker geratu zitzaion betiko atzamar hura. Egurra latz banatu zuten, nori eta senideei, baita Kirrulirenei ere.

Esan bezala, Josu 1987ko maiatzean hil zen, eta hurrengo urtean, 1988ko martxoaren 2an, egunaren argiak beste berri goibel bat ekarri zigun Herrerako hirugarren modulutik beste moduluetara, Mikel Lopetegiren heriotzarena. Nork esango zuen, beti futbolean, elikadura zaintzen... eta egun batetik bestera jakin duzu ez duzula inoiz gehiago ikusiko. Zazpi urte zituen kartzelan, 1981eko martxoan Gasteizen tirokatu eta harrapatu baitzuten, zaurituta, bere taldekide Jose Manuel Ariztimuño *Pana* hil zuten segada berean.

Hiru hilabete geroago, Juan Karlos Alberdi Martirena *Krakas* hil zen kartzela berean. Hura ere kirolaria zen, eta beste diziplina askotan ere nabarmentzen zen, esate baterako hizkuntza kontuetan; izan ere, Euskal Filologia karrera barruan atera zuten lehenetakoa izan zen; gitarra jotzen zuen... Ekainaren 15ean bihotzak huts egin zion arte. Bertsio ofizialaren arabera, kausa naturalengatik hil zen. Ez zen azkena izango, eta txantxa beltz eta triste bat errepikatuko genuen aurrerago ere, kartzelan hiltzea naturala dela, alegia.

Garai hartan gurekin zegoen beste lagun bat ere, Kepa Miner *Txalaka*, zerrenda beltz hartara batuko zitzaien 18 urte geroago, kartzelaldi eta oinaze luzeen ostean. Hainbat espetxetan egon ginen elkarrekin: Alcalan, Herreran, Sevillan eta Granadan, patioetan nahiz bakartze moduluetan. Arnasestuka zebilen normalean, zenbait kartzelatan gehiago, hezetasuna zela-eta; Sevillan eta Granadan, esate baterako, hezetasuna ia Euskal Herrikoa bezainbestekoa da eta. Urte gogorrak eman zituen hauspoa libratu ezinik. Lagun bitxia, Txalaka. Gogoan dut ez zuela gustuko eskua luzatzea, berak azken agurrarekin

lotzen baitzuen keinu hori. Osoa eta sutsua zen, edozein erasok kikilduko ez zuena. Munduan zehar ibilitakoa, hainbat urtez Australian egurra mozten, zenbait itsaso zeharkatutakoa. 1999an irten zen, eta handik denbora laburrera oxigeno botila bizkarrean ibili beharko zuen. Barruko lagunak ez zituen sekula ahaztuko, baina. Haren gutun batzuk jaso nituen nik, harik eta 2004ko apirilaren 26an hil zen arte. Berak esaten zuen egun batean «hanka luzatu» egin behar zuela. Eta luzatu ere, normala denez, luzatu zuen hanka. Goizegi baina. Lagun bat goizegi hiltzen baita beti.

Antton Troitiño ere, 30 urte baino gehiagoko kartzelaldiaren ostean, barruan garatutako gaixotasun larriaren ondorioz hil zen 2021eko abenduaren 17an. Hainbat kartzelatan egon ginen batera. Ni aske atera nintzen egun berean atera zen bera ere, ezustean. Izan ere, haren loba Mattin Jaengo espetxera joan zen bertan niri ongietorria egitera. Handik Euskal Herrirantz gentozela, dei bat jaso zuen Mattinek, osaba Antton askatu egin zutela eta Madrilen elkartuko zirela harekin. Hura poza gazteak hartu zuena. Gau hartan bertan telefonoz deitu zidan Anttonek eta gogotik egin genuen barre. Gogoan dut biok Puerto II kartzelan geundela, aurrez aurreko bisita bat onartuta zeukala alaba Marrubirekin eta emazte ohiarekin. Emazte ohiak ezin joan eta Marrubi bakarrik joan zen; hori zela-eta, kartzeleroek ez zieten bisita egiten utzi, alaba adin txikikoa zela esanez. Adin txikikoa... Antton haren aita izango ez balitz bezala. Berriro kartzelatu ostean, iaz atera zen, gaixorik, hilzorian, eta duela denboratxo bat utzi gintuen gizon oso horrek.

Diktaduraz geroztik kartzelan hildako lehenengo preso politikoa Juan Jose Crespo Galende GRAPOko kidea izan zen; 1981eko ekainaren 18an hil zen Abantoko militantea, gose greban. Jose Ramon Goikoetxea izan zen hurrengoa, 1985eko ekainaren 26an, eta ordutik, aipatutakoez gainera, beste hain-

bat lagunek osatu zuten zerrenda luze eta mingarri hori: Mikel Zalakain, Jean Groix, Peio Mariñelarena, Javier Gorostiza, Juan Jose Etxabe, Jose Maria Aranzamendi, Juan Carlos Hernando, Jean Louis Maitia, Santi Diez Uriarte, Esteban Esteban Nieto *Kroma*, Ramon Gil Ostoaga, Oihane Errazkin, Joxe Angel Altzuguren, Igor Angulo, Roberto Sainz, Mikel Ibañez, Anjel Figeroa, Xabier Lopez Peña, Arkaitz Bellon, Josu Uribetxebarria, Kepa del Hoyo, Xabier Rey Urmeneta, Belen Gonzalez Peñalba, Juan Mari Mariezkurrena, Oier Gomez, Jose Angel Ochoa de Eribe eta Igor Gonzalez Sola.

Roberto Saiz *Baru* eta Igor Angulo bateratsu hil ziren, astebeteko epean, alegia, 2006. urtearen hasieran. Urte batzuk geroago ezagutuko nuen Igorren neska-laguna, Idoia, Bilboko manifestazio batean biok pankartari helduta. Oso neska atsegin eta osoa, borrokalari eta langilea.

Hildako lagunen zerrenda askoz luzeagoa da, baina. Dozenaka hil dira ihesean, batzuk ekinean, beste batzuk Estatu espainolak behin eta berriz erabili duen gerra zikinaren eraginez, beste hainbat gaixorik; izan ere, deportazioan, Cabo Verden hildakoez gainera, urruneko beste herrialde batzuetan bizia galdu zuten Txomin Iturbe, Joxe Mari Larretxea, Luziano Eizagirre, Angel Aldanak...

Angelin Aldana herrikide nuen. Zehatzago esateko, Gorozikakoa zen, baina Zornotza inguruan elkartzen ginen beti. 1977ko Amnistia Legearekin espetxetik irten zenetik gutxira ezagutu nuen, beti bezala konpromisoari helduta. Ordurako, mutil gaztea nintzela, banekien nolako bidetik joko nuen. Berehala jarri ninduen erakundearekin hartu-emanetan, bera inguruko arduraduna zen eta. Esan zidan: «Ez gara asko agurtuko, edo ahal den gutxiena. Hala, hitzorduak herritik kanpo izaten genituen, mendian; esate baterako, Gorbeian. Behin, Gorozikako herriko

bordan Aste Santua eman genuen berarekin eta Tomas Linazarekin. Oso oroitzapen ona dut, haren laguntasuna, esperientzia eta irakaspen asko eskaini zizkidalako, baita prestatzen zituen janari goxoak ere.

Garai hartan aurkitu zuen Ana, emaztea izango zuena. Esaten zidan: «Gatza, goazen Igorrera, edo Lemoara, Renault 8 granatea daukaten neska haiek ikustera». Nik erantzuten nion: «Hik agintzen duk, Angelin». Eta gustura joaten ginen Ana eta haren lagunak ikustera. Egun batean, etxera eramateko esan zidan, Gorozikara. Baietz esan nion, baina autoa gasolinarik gabe neukala; beraz, beste kotxe bat, aitarena, hartuko nuela. Kontatu nion, baita ere, isuna ipini zidatela inguruan zebilen Guardia Zibilaren patruilak. Garai hartan sarritan ibiltzen ziren herrian bertan. Angelinek taberna batean itxaron zidan. Iritsi nintzenean, autoa bigarren ilaran utzi eta Angelin abisatzera sartu bitartean, guardia zibilak agertu ziren. Atera ginenean, bigarren isun bat eman zidaten. Isunaren zenbakia ikusi eta konturatu nintzen aurreko isunarenaren hurrengoa zela. Maldizioka hasi nintzen, eta guardia zibilei esan nien: «Baina zer gertatzen da, beste isun bat? Nire atzetik zabiltzate, ala?». Haietako batek erantzun zidan: *«Pero uté cuánto koshe tiene?».*

Guardia zibilak Angelinen bila joan zirenean, etxeko leihotik salto egin eta Ipar Euskal Herrira alde egin zuen. Gorozikan izan zen, 1979an. Guardia zibilak ihesi ikusi zutenean, fusilak tiro egiteko altxatuta zituztela, haien buruak esan zien: «Lasai, ez tiro egin, hor behean harrapatuko dugu eta». Ez zuten harrapatu, baina. Ondoren, gorabehera handiak izango zituen Angelinen bizitzak, batzuk ezagunak, erbeste eta deportazio garaietakoak: etengabeko jazarpena, kartzela, tortura... Ekuadorren zegoela bera eta Alfonso Etxegarai atxilotu edo, zehatzago esateko, bertako eta Espainiako poliziek bahitu eta birrindu zituztenean bezala.

2016ko apirilaren 3an, kartzela, erbeste eta deportazio urte luzeen ostean hil zen Venezuelan. Angelinen errautsak Venezuelatik ekarri zituztenean, Loiuko aireportuan haren emazte Ana ikusi nuenean, harengana hurbildu eta irten zitzaizkidan hitz apurrak esan nizkion: «Hemen gaude haren lagunak, zure lagunak». Beti arte, Angelin, hik agintzen duk.

Urtero gogoratzen dugu, maiatzean, lagun handi hori Bizkargi mendian Santa Kurtz egunean eta haren osteko lehenbiziko igandean, beste gudari guztiekin batera, hala nola Andres Izagirre *Gogor* aspaldiko laguna, Sabin Euba *Pelo Pintxo*, Jose Luis Barrena *Txistu*, Santi Ugalde, urte askoan Ipar Euskal Herrian ihes eginda bizi izan zena... Hainbat eta hainbat lagun daude gogoratzeko.

Testu txiki bat eskatu zidaten bertan irakurtzeko, artean giltzapean nengoela:

***Bizkargi mendi gailurra, askatasun girristua***

*Bizkargi Eguna. Atzoko eta gaurko gudarien omenez mendi honen gailurrean ospatzen dugun jai eta borroka eguna. Jakinean gaude 1937. urtean Bizkargin Francoren indar faxisten erasoaldi gogorra jasan zutela gure arbasoek. Geroztik garrantzi handiko eguna bihurtu da euskal abertzaleentzat. 36ko gerran herriz herri eta mendiz mendi egin zieten aurre euskal gudariek indar faxistei Euskal Herrian. Hori zela eta, gudari asko eta asko desagerrarazi eta erail zituzten, beste asko eta asko zauritu eta espetxeratu zituzten, eta beste askok erbestera jo behar izan zuten. Ondasunak ostu zizkiguten eta euren legeak ezarri. Zorrotz zigortu, zigortzen eta zigortuko gaituzte frantziar eta espainiar gobernuek, baina zutunik jarraitzen dugu belaunaldirik belaunaldi, eta horrela jarraituko dugu aurrerantzean ere, Euskal Herriaren independentziaren alde borrokatzen.*

*Gaur, atzo moduan, preso gaude, erbesteraturik hainbat eta hainbat euskal herritar, espainiar indar zapaltzaileen erasoaldiari aurre egiteagatik. Euskal Herria euskaldunon aberria da.*

*Horrexegatik, inoiz baino ozenkiago aldarri egin behar dugu guk geu izan nahi dugula. Geure buruaren jabe. Euskal estatu independentea berreraiki nahi dugula, sozialista eta euskalduna, beste barik.*

# XXXVII

Espetxetik irten eta luze gabe, bisita jaso beharrean, presoengana joateko aukera eduki nuen, lehenengo Algecirasera (Cadiz) eta handik gutxira A Lamara (Pontevedra), kartzela horietan zeuden lagunekiko elkartasunez antolatutako martxa banarekin bat eginda. Barruan egonda ere, noizbehinka bidaia luzeak egiten dira. Izan daiteke norberaren edo beste lagun baten epaiketaren edo diligentziaren bat egiteko, edo kartzela aldaketa. Bidaia, kartzela urrun batera joateko bada, astuna izaten da bidaia; hala ere, batzuetan gertuko beste kartzela batera joateko, are astunagoa gerta daiteke, sekulako bira egiten dute eta. Ni eginda nago, esate baterako, Sevillatik Granadara joateko, egun batetik besterako bidaia, Jaenera ordu txikitan heldu, bertan ordu bakan batzuetako loa egin eta goiz-goizean Granadarantz jarraituta. Beste batzuetan hamar edo egun gehiagoko bidaia izan zitekeen, kartzela batean baino gehiagotan gau bat edo zenbait egun pasata. Bidaia horietan jipoia jasotzeko arriskua ere badago, jakina. Egur pila jasota gaude horrelakoetan, garai guztietan, Poliziak eta Guardia Zibilak emanda.

Askatasunean egonda barruan dagoenarengana joateko bidaiak egin nituen, beraz, baita neure larruan igarri zein gogor eta astunak diren senideek eta lagunek astero egiten dituzten joan-etorri horiek. Kasu askotan senide berak hilero eta are hamabostero egin behar izaten ditu. Benetako zigorra da hori, inongo epaitegik ezarri ez baina urte luzeetan betetzen ari diren zigorra.

Borroka lagun hilen zerrenda ikaragarria da, baina senide eta lagunena ere ez da laburra. 1982ko azaroaren 29an Rosa eta Arantza Amezaga ahizpak hil ziren euren nebari bisita egin ostean, etxera bidean, eta hurrengo urteetan beste hamalau senide eta lagunek utzi zuten bizia errepideetan: Pilar Arsuaga,

Alfontso Isasi, Antxoni Fernandez, Jose Mari Maruri, Karmen Salbide, Ruben Garate, Iñaki Saez, Asier Heriz, Argi Iturralde, Iñaki Balerdi, Sara Fernandez, Leo Esteban, Karmele Solaguren eta Natividad Junko.

Hamarkada hauetan, istripuez gainera, eraso ugari ere jasan izan dituzte. Autobusa harrikatu izan diete behin baino gehiagotan. 1989ko maiatzaren 8ko erasoa bereziki larria izan zen. Egun hartan, Alcalako kartzelan bisita egin ostean, senide eta lagunen autobusa kartzela haren esparrutik ateratzear zegoela, dozenaka polizia, guardia zibil eta kartzelero, denak kaleko jantzita, kartzela kanpoko hesia bota eta autobusa harrikatzen hasi ziren, kartzelako kanpoaldean guardia egiten zeuden polizien eta guardia zibilen aurrean. Autobuseko kristal guztiak txikitu eta hainbat lagun zauritu zituzten, tartean umeak eta adineko jendea. Egun batzuk lehenago ekintza armatu bat izan zen inguru hartan; hori zela eta, Poliziaren sindikatu batek deitutako elkarretaratze baten amaieran izan zen; izan ere, manifestari batzuek sindikatu horren pegatina zeramaten paparrean. Bitxia da, esate baterako, euskaldunei legea ahalik eta zorrotzena aplikatzea eta gogortzea aldarrikatzen duten horiek zein erraz pasatzen duten hankartetik hain maite duten lege hori, eta betearazi behar dutenak zein erraz pasatzen diren haren gainetik.

Senideek sarritan jasan izan dituzte horrelako erasoak, edo errepideetan eurentzat berariaz ipinitako kontroletan geldiarazi eta arakatu izan dituzte, Guardia Zibilaren eta Poliziaren jazarpena jasan izan dute joan-etorri luzeetan zehar. Behin, neska bat Algecirasko kartzelan bisita egin ostean, Puertokora zihoan, han senideen autobusa hartu eta etxera itzultzeko. Iritsi zenean, zain zituen polizia batzuk, alto eman eta furgoneta batera sarrarazi zuten. Han goitik behera miatu zuten, biluzarazita.

Eta zenbat horrelako...!

# XXXVIII

Kartzelatik irten eta lau urteren buruan, nire urtebetetze egunean, hain zuzen, aita hil zen, hainbat urtean arnasestuka bizi izan ostean. Haren hauspoak silikosiak jota zeuden, urte askoan hargintzan lan egin izanaren ondorioz. Azken urte horietan ezin makalago bizi izan zen. Medikuek harrituta esaten ziguten nola zutik egon zitekeen, nola hainbeste iraun zezakeen. Behin baino gehiagotan larrialdietara eraman behar izan nuen, autoz, anbulantzia ez itxarotearren. Egun batean, Galdakaoko larrialdietara heltzean, klaxona jo nuen, aita lehenbailehen barrura sar zezaten, eta atean zeuden langileek errieta egin zidaten, hura ospitale bat zela eta ezin zela bozina jo esanez. Nik esan nien larrialdietara joan nintzela eta kontu larria zelako jo nuela, lehenbailehen arreta emateko. Beste behin, ospitalera eraman nuenenean, «non gaude, Jose Mari?», galdetu zidan aitak. Galdakaoko ospitalean geundela esan nion nik, eta berak atoan: «Etxera goaz». Etxera nahi zuen beti, beti lasaitasun bila, Goiztiri jaio zenean oparitu zioten aulkitxoan esertzera. Izan ere, oso gogokoa zuen alabaren izena grabatuta zeukan aulki zuri txiki hartan jarri eta bere mundura biltzea, baita egunkariari «begiratu» bat ematea. Ama ezinbesteko laguntza zuen aitak urte horietan. Egia esateko, beti izan zuen laguntza eta sostengu paregabea. Biok elkar hartuta aurre egin zioten bizimodu gogor hari, aitzakia barik azkeneraino. Eta azkeneraino jarraitu zuen aitak presoen eta gainerako errepresaliatuen aldeko mobilizazioetara joaten, beti ere amaren begiradapean, nola ez. Eta halako batean, egunero-egunero egunkarian bilatzen zuen albistea irakurri barik joan zen.

Maiatzaren 4a zen. Goizean, amak zorionak eman zizkidan. Geroago, aitari esan zion: «Jose Mariren urteak dira gaur». Aitak bazekiela erantzun zion. Hala eta guztiz ere, berak ez zidan

ezer esan. Nik bizitza guztian gogoan eduki nezan edo, bere bizitza egun horretan amatatzea nahi balu bezala.

Askatasunaren aldeko haren konpromisoa hil ostean ere nabarmendu zen, kartzelan edo ihesean izandako lagun asko ez baitziren aitarekin ahaztu; izan ere, agur egitera etorri ziren beste jende askorekin batera, tanatoriora zein eliza ondora lagunduz. Ez dakit zelan izan nintzen kutxatxo hartan aitaren errautsei eusteko gauza, hainbeste lagunen artean, amaren dardarak, Goiztiriren hunkipena, Kontxaren isiltasun sentikorra eta lagunen elkartasunak inguratuta.

Banekien kanposantuan panteoi bat geneukala. Baina ez nekien zein lekutan zegoen. Udaletxean zenbaki bat eman zidaten eta horren bidez hilobiaren kokapena lortu nuen. Han egon behar zuten ni oso gaztea nintzela hil zitzaizkidan anaia biek. Inoiz ez naiz ausartu anaien hilobira joaten. Hara hurbildu ahala, "Pedro Sagardui" irakurri nuen, anaietako baten izena. Bestearena ez zen ageri. Aitaren errautsak bertan uzteko baimena lortuta, lurperatzailearekin mintzatu nintzen aitaren errautsak anaien gorpuzkiekin batera sartzeko. Lurperatzaileak kanpoko marmola kendu zuen, eta barrurago adreiluzko horma bat zegoen, zementuz lisatua. Horman data batzuk ageri ziren: "1966", Pedrito hil zenekoa, eta "1970", Josu anaia gazteena hil zenekoa. Ni nintzen anaietan nagusiena, eta bigarrena hil zenean 12 urte baino ez neuzkan. Natura jakintsua dela esaten dute, eta nik ez diot ezetz, baina sarritan bidegabea ere bada. Aitaren errautsak sartu ahal izateko, horma apurtu behar izan genuen. Horma zulatutakoan hilkutxa zuri bi ikusi genituen: Pedritorena ezkerrean eta Josurena eskuman, atzerago. Kutxak ikusita, banekien gure etxetik irtendakoak zirela, akordura etorri zitzaidan etxeko gela bateko irudia: hilkutxa txiki bat zabalik, kandelek argiztatuta. Lurperatzaileak esan zidan errautsak Josuren hilkutxaren gainean uzteko, baina nik ez nuen hori onartu. Jo-

suren hilkutxa alboratu nuen pixka bat ezkerretara, eta haren ondoan, eskuman, utzi nituen aitaren errautsak.

Azken hitzak esan nizkion aitari: "Honaino heldu gara, aita". Berak esaten zidan pertsona izateko sufritzen jakin behar dugula. Eta berak hainbat etsenplu eman zizkidan, beste gauza askoren artean. Eta nik beti eskertuko dut aitak izan duen duintasuna.

Ama ere ez zen atzean geratuko borroka kontuetan. Gogoan dut behin Bruselara joan zela. Aitak lan egin behar zuen, baina argi zeukaten bat joaten ez bazen, besteak joan behar zuela. Behin Bruselara diot, baina Europako beste hainbat lekutara ere joan izan dira biak, Frantzia eta Espainiako kartzeletara egindako martxetara eta ekimen guztietan parte hartu izan zuten. 1981eko maiatzean Tomas Linaza lemoaztarraren aurkako estradizio epaiketa zela-eta, gose greba egin genuen kartzeletan, baita kanpoan ere. Bilbon egin zen gose greban gure amak parte hartu zuen.

Denok urteetan aurrera goazenez, ama gero eta makalago zegoen, aitak bere azken urteetan egin zuen bide berari heldu-ta; etxean, baina sarritan larrialdietara joan beharrean. 2019ko abenduaren 26an buruko isuri batek eta urte luzeetako nekeak haren bihotz handia gerarazi zuten arte.

Azken urteetan burua nahasten joan zitzaion eta momentu oro berarekin egon behar zuen baten batek, bai etxetik irteteko, bai etxean bertan. Nik lanera joan behar nuen, eta kanpoan nengoenean neska bat egoten zen berarekin. Denborak guztiz nahastuta zeukan ama, ez zekien ni joan nindoan edo etorri nentorren. Sarritan esaten zidan:

–Argi ibili, Jose Mari, plaza txakurrez beterik dago eta!

Eta zenbatetan galdetzen zidan:

–Lanera zoaz? –ni beste edonora, erosketetan edo Gasteizera nindoala. Izan ere, larunbat goizero Gasteizera joaten naiz idatzi honi amaiera emateko.

–Gaur zapatua da, ama, jaia daukat –esaten nion nik.

–Nora zoaz, ba?

–Gasteizera.

–Zer egin behar duzu han, ba?

–Badakizu, aspaldiko kontua bukatu.

–Oraindino zabiltza horregaz? Zorioneko liburua!

–Ez daukat presarik, ama. Ez daukat ezer erakutsi beharrik.

–Bazkaltzeko etorriko zara? –galdetzen zidan beti.

–Bai, ama, baina ez itxaron, lau eta erdietan edo bostetan helduko naiz.

–Ordura arte ezer jan barik egongo zara?

–Pintxoren bat jango dut lagunagaz alde zaharrean.

Hurrengo larunbatean ahaztuta edukitzen zuen elkarrizketa hori eta antzekoa errepikatzen genuen. Berdintsu larunbatero. Orain, idatziari azken ukituak ematen ari naizela, pena ikaragarria ematen dit gurasoek ezin irakurtzea. Badakit ez luketela osorik irakurriko, orrialde batzuei begiratu arin bat emanda nahikoa edukiko luketela ontzat emateko eta, batez ere, poza hartzeko.

Azken egunak Galdakaoko ospitalean eman zituen amak, eta ni haren ondoan egon nintzen, haren arnasa gero eta motelagoa eten arte. Badakizu hilko dela, medikuak argi esan dizu edozein

momentutan joango dela, baina zuk ez duzu sinisten, ez duzu sinistu nahi, ez daukazu burua horretarako prestatuta.

Galdakaoko beilatokian geratu zen. Bertan erraustu zuten, bere bizitzan hain bereak izan zituen ikurrak, hain bereak izandako borroka eta jendea ordezkatzen zituzten ikurrak, aldean zituela: ikurrina eta euskal presoen senideen lepo-zapia. Hara lagundu zidaten lagunekin irtetean, «agur, ama!», esan nion.

Kanposantura heldu nintzenean, berriro zabaldu zuten hilobia, eta berriro ikusi nituen aitaren errautsak eta anaien hilkutxak. Azken urteetan, urtero joaten nintzen amarekin Domu Santu egunez, aita zenaren urtebetetze eguna baitzen, lore sorta handia eraman eta hilobia txukuntzera, aurreko urteetan berak bakarrik egiten zuen bezala. Hura izango da nire etxea egunen batean, umetan bezala anaiak besarkatzeko gogoz hara eramaten nautenean. Hantxe egongo dira gurasoak ere nire zain, lehen ere hainbeste urtean egon diren bezala.

Etxean ez da sekula egon anaien argazkirik. Gurasoek ez zuten inoiz haien gainean berba egiten. Zer min ikaragarria edukiko zuten, argazkiak bistatik kenduta arindu nahi zutena. Ez zuten inoiz haien galera gainditu. Amarekin kanposantura loreak eramatera joan nintzenetako batean, bat-batean, gogora etorri zitzaidan umetako oroitzapen bat, lau urteko tartean errepikatu zena: bai Pedrito, bai Josu hil zirenean, ama ohean geratu zela, hurrengo egunetara arte berba egin barik, jan barik, bizi gura izan barik. «Noiz hilko naiz ni?» baino ez zitzaion entzuten.

Ama hil eta ia urte bira, haren gauzak etxetik ateratzea pentsatu nuen. Ez zidaten inolako trabarik egiten, baina kendu behar nituela uste nuen, esate baterako, amak brodatutako izarak eta mahai-oihalak, amaren oroitzapena ez zegoen-eta horietan, baizik eta nire barruan. Badakit lan asko egin zuela aitita Jose

eta amama Leonak ezkondu zenean oparitu zioten Alfa josteko makina harekin, baina gauza horiek guztiek ez zuten amak etxean utzitako hutsunea betetzen, eta berak etxe zaharretik berrira joan ginenean hainbeste oroitzapen gordetzen zituen josteko makina etxe zaharrean utzi zuen bezala, neuk ere gauza horiek ateratzea erabaki nuen.


[redacted]

Dirección General de Instituciones Penitenciarias

DOCUMENTO DE IDENTIDAD INTERIOR

Apellidos: GARDUY MOJA

Nombre: JOSE MARIA

Fecha de Nacimiento: 4-05-58

Lugar: BILBAO

NIS: 80 203 00023

Firma del Titular

Kartzelako nortasun agiria.



Euskal preso politikoen senideen protesta Madrilgo Santiago Bernabeu futbol zelaiaren parean. Eskuinean, Gatzaren ama, Begoña Moja.

NOTA INFORMATIVA

Interno: JOSE MARIA SAGARDUY MOJA

Centro Penitenciario de Sevilla 2.

Texto: Se le comunica que sus instancias de fecha 30 de marzo ùltimo en que denuncia malos tratos, son remitidas con esta fecha al Juzgado de Instrucciòn de guardia por si constituyera delito lo denunciado.

Sevilla, 6 de abril de 1.990

(lo recibo el dìa 18)

Sevilla II espetxean jipoia hartu ostean ipinitako salaketa epaitegira bidali izanaren komunikazioa.

ADMINISTRACION DE JUSTICIA

1X 7893082

JUZGADO DE VIGILANCIA PENITENCIARIA
SEVILLA

Expediente Penitenciario núm. 1610/91-N
Interno: Sagarduy Moya José Maria
Centro: Granada.

NOTA INFORMATIVA.: Por el presente le informo en relación a su instancia de fecha 2 de julio de 1.991, que en el dia de la fecha se ha deducido testimonio de las actuaciones y remitidas al Juzgado de Instrucción Decano de esta Capital, a los efectos procedentes. Dicho escrito era en relación con lesiones sufridas en el Centro Penitenciario Sevilla I el dia 28-6-91

En Sevilla- 1 7 de Febrero de 1.992

—Papel de Oficio— UNE A-4

Sevillako Zaintza Epaitegiaren oharra, Sevilla I kartzelan hartutako jipoiagatik ipinitako salaketaren gainekoa.

Anexo VI 20

CROQUIS: RELATIVO A LA PRISION PROVINCIAL DE GRANADA, DE LA QUE EN LA MAÑANA DEL DIA 06 DE MARZO DE 1.993, SE HA INTENTADO FUGAR UN INTERNO.-







● Lugar donde fué avistado el interno por el Guardia pérez . sobre la parte superior del Muro; y desde donde cayó al pasillo.

● Lugar donde fué capturado el recluso por los Guardias Guzmán y Marín, trás caer de la parte superior del muro.

Granada, 6 de Marzo de 1.993

Guardia Zibilaren txostena.


17

Anexo III

FOTOGRAFIA NUM. TRES. Primer plano del gancho.- - - - - - - -

Guardia Zibilaren txostena.

18

Anexo IV



FOTOGRAFIA NUM. CUATRO. Primer plano de la malla metálica con forma de marquesina, en la misma se aprecia el hundimiento de la malla.- - - - - - - - -

Guardia Zibilaren txostena.


Anexo V 19



FOTOGRAFIA NUM. CINCO. Vista panorámica del lugar donde se termina la marquesina, supuesto lugar por donde el interno trepó a la parte superior de la marquesina.- - - - - - - - - - - - - - - -

Guardia Zibilaren txostena.

Anexo II 16




FOTOGRAFIA NUM. DOS . Vista en aproximación de la misma zona en la que se aprecia la concentina del cono desprendida y pendiente de ella un gancho con un trozo de cable suspendido del mismo - - -

Guardia Zibilaren txostena.

egin — EUSKADI

# Preso vasco herido tras un supuesto intento de fuga

■ Sagardui fue detenido dentro de la cárcel de Granada. ■ Aseguran que saltó desde el tejado.

El preso político vasco José María Sagardui Moja resultó ayer herido en la cárcel de Granada cuando, según la versión difundida por el director del centro, Juan Fernández, intentaba fugarse de la prisión y saltó del tejado al patio interior tras ser descubierto por la Guardia Civil. Los familiares del preso zornotzarra se desplazaron ayer a Granada, para comprobar su estado y determinar las causas que lo provocaron.



José María Sagardui fue sacado en camilla del Centro de Traumatología de Granada.

GRANADA

Según la información recabada por EGIN, a última hora de la tarde de ayer, las autoridades penitenciarias preveían trasladar al preso político vasco al Hospital Penitenciario de Sevilla, ya que la cárcel de Granada no se encuentra dotado del material suficiente para tratar al herido, que sufre fracturas en las dos piernas y un esguince en una muñeca.

El preso vasco fue atendido de la contusiones en el Centro de Traumatología de Granada, desde donde informaron que sus heridas «no son graves, pero le impiden caminar».

A tenor del relato de los hechos realizado por el director de la prisión, Sagardui habría intentado fugarse a las 7:10 horas de la mañana, haciendo un agujero en el techo y utilizando la cama como escalera. «Una vez realizado el boquete en el techo —afirmó Fernández—, accedió a una estructura metálica, que reventó utilizando una toalla a modo de torniquete, y pasó a una buhardilla, y de allí al tejado».

El director sostiene que el preso vasco «saltó por encima de la cámara del circuito cerrado de televisión y rompió parte de la instalación eléctrica de la prisión, con cuyos cables y una varilla se preparó una soga, acabada en un garfio, que intentó enganchar a una garita que está fuera de servicio».

## Descubierto

Fernández declaró que Sagardui fue detenido en el recinto interior de la prisión después de haber saltado desde el tejado, cuando «se vió descubierto por la Guardia Civil, que se alertó por el ruido hecho en esta garita».

En la prisión de Granada se encuentran recluídos en la actualidad los presos políticos vascos Juan Karlos Lezertua, Kepa Miner, Joseba Uranga y el propio Sagardui, todos ellos en situación de primer grado, lo que implica «cacheos diarios, cambios periódicos y vigilancia intensiva», según declaró ayer el director. El preso zornotzarra ha participado hasta el momento en siete huelgas de hambre y las Gestoras denunciaron en su día la agresión que Sagardui sufrió por parte de tres funcionarios tras la explosión de un artefacto en la cárcel de Sevilla.

El director de la cárcel granadina señaló que «en este intento de fuga el etarra ha demostrado ser muy inteligente y conocer bien la infraestructura de seguridad de la prisión, pero el trabajo de funcionarios y guardias civiles ha sido perfecto».



"Egin"eko albistearen fotokopia.

12 EUSKADI LUNES 8 MARZO 1993 egin



José María Sagardui es introducido en una ambulancia, tras ser atendido de sus heridas en el Centro de Traumatología de Granada.

# Sagardui fue golpeado cuando estaba herido

■ Tiene el brazo fracturado por tres sitios. ■ Sus familiares lograron verle ayer en el hospital de Carabanchel. ■ La Guardia Civil no se percató de la fuga hasta que cayó.

El preso político vasco José María Sagardui, *Gatza*, fue agredido varias veces por la Guardia Civil y arrastrado por el suelo, después de que resultara herido al rompérsele el cable y caer de una altura de siete metros durante su intento de fuga de la prisión de Granada, según relataron ayer a EGIN sus familiares, que pudieron verle durante unos minutos en el hospital penitenciario de Carabanchel, donde está ingresado.

DONOSTIA
Dabid MENDIZABAL

A tenor de los datos que el propio José María Sagardui dió a sus familiares durante la breve visita que estos pudieron hacerle en el hospital penitenciario de Carabanchel, el preso político vasco fue golpeado con una linterna al menos en tres ocasiones y arrastrado por los guardias que llegaron al lugar donde había caído durante su intento de fuga.

El padre de Sagardui explicó que su hijo le dijo en el hospital que «tiene el brazo derecho fracturado por tres sitios y esguince en los dos tobillos».

### Ensañamiento

Según la información facilitada por sus allegados, el que estuviera herido no fue cortapisa para que se ensañaran con él, ya que además de ser repetidamente agredido, «los guardias le retorcían el otro brazo para llevarselo hacia la espalda, en el momento en el que le recogían del suelo, a pesar de que les decía que no podía andar».

Estas mismas fuentes desmintieron la versión facilitada por el director de la cárcel, Juan Fernández, en la que se indicaba que *Gatza* saltó al recinto interior de la prisión después de que fuera descubierto, y desvelaron que el preso zornotzarra «cayó desde una altura de unos siete metros al patio, porque se le rompió el cable que había preparado cuando intentaba pasar sobre un muro, y fue entonces cuando los vigilantes oyeron el ruido y se dieron cuenta de que estaba herido en el suelo».

Los familiares de Sagardui se enteraron de los hechos sobre las diez y cuarto de la mañana del sábado, por lo que se desplazaron hasta Málaga en avión, para dirigirse posteriormente a Granada. Una vez allí, fueron recibidos por el director de la prisión, que tras mostrar su sorpresa ante la celeridad con la que habían llegado a Granada, les comunicó que *Gatza* había sido trasladado al hospital penitenciario de Carabanchel sobre las tres de la tarde.

### Breve visita

Nada más conocer su paradero, los familiares de Sagardui se desplazaron al citado hospital madrileño, donde se les comunicó que no era día de visita, aunque finalmente pudieron estar unos minutos con el preso. «Estaba en una silla de ruedas —afirmó su padre—, pero está fuerte y, por lo tanto, nosotros también».

## Incendiados dos autobuses en Gasteiz y Azpeitia

DONOSTIA

Dos autobuses fueron incendiados el sábado y el domingo en sendos sabotajes realizados mediante el lanzamiento cócteles molotov en Gasteiz y en Azpeitia.

Ambas acciones fueron llevadas a cabo en solidaridad con los presos políticos vascos y, en particular, con los de la cárcel de Cáceres II, que se encuentran en huelga de hambre desde el pasado 31 de enero, según las reivindicaciones recibidas en este diario.

Según la información facilitada por el Gobierno Civil de Araba a la agencia "Efe", el sabotaje de Gasteiz lo llevaron a cabo siete jóvenes encapuchados, que instaron al conductor del autobús municipal incendiado a abandonarlo, tras lo que arrojaron varios cócteles molotov a su interior.

En los enfrentamientos registrados el sábado por la noche en la capital alavesa entre policías españoles y manifestantes que participaron en una concentración en solidaridad con los presos políticos vascos se registró, además, el destrozo de varias cabinas telefónicas, según el Gobierno Civil de Araba.

### Daños en la parte frontal

El autobús incendiado en Azpeitia era de la compañía Eusko Trenbideak y sufrió daños en su parte frontal y la rotura de la luna delantera por el lanzamiento de varios cocteles «molotov».

El vehículo, de la marca Volvo Intercooler, cubría la línea Zumarraga-Azpeitia y se encontraba aparcado junto a la antigua estación de FEVE de la mencionada localidad guipuzcoana.

Por otra parte, un comunicado anónimo reivindicó ayer la quema de dos cabinas telefónicas en el barrio bilbaino de Santutxu, en solidaridad por los presos políticos de Cáceres II.

En ese mismo barrio, después de la manifestación que recorrió sus calles el sábado por la noche, se procedió a cortar la carretera mediante la quema de neumáticos.

## Movilizaciones en solidaridad con los presos políticos

DONOSTI

Durante la jornada de ayer, continuaron a lo largo de toda Hego Euskal Herria las manifestaciones y concentraciones que desde el pasado viernes vienen celebrándose en solidaridad con los presos políticos vascos y, especialmente, con los de Cáceres II, siguiendo, en ocasiones, la convocatoria de las Gestoras por-Amnistía y, en otras, de Senideak.

En Uribarri, Arrigorriaga, Ugao, Pasaia Antxo —donde las concentraciones pasarán a ser diarias a partir de ahora—, Usansolo, Azpeitia, Oñati y Alonsotegi, entre otras localidades, se llevaron a cabo actos que congre-



"Egin"eko albistearen fotokopia.

Min[...]
Secretaría General
de Asuntos Penitenciarios

Hospital General Penitenciario
Gerencia

Avda. Poblados, 6 - Tfno. 462 32 36 Fax 462 19 10 - 28044 Madrid

Madrid 16 de Abril de 1993

Ref. 4333/93

Sr. DIRECTOR DEL CENTRO
PENITENCIARIO DE
SEVILLA II:

En relación al interno Jose M. SAGARDUY MOJA (cuyo informe de alta se adjunta), les comunicamos que a comienzos de la próxima semana (días 19 ó 20 de Abril) deben retirarsele los botines de escayola y debe ser revisado por el servicio de traumatología en vuestro Hospital de referencia.

Este dato no puede ser indicado en su informe de alta al desconocer el día exacto de su traslado y centro al qie iba a ser trasladado.

Atentamente.

P.O. [signature]

Fdo. Serv. de Traumatología.

HOSPITAL GENERAL PENITENCIARIO
ADMISION DOCUMENTACION

Medikuen txostena.

Ministerio de Justicia
Secretaria General
de Asuntos Penitenciarios

Hospital General Penitenciario

Avd.Poblados,S.Tf. 4623236 Fax 4621810 - 28044 Madrid

NOMBRE DEL PACIENTE:

SAGARDUI MOJA, Jose Maria.

# INFORME DE ALTA MEDICA

Del Servicio de COT, Al Servicio Médico del Centro de Destino

1. **ANAMNESIS** :

Paciente de 34 años que ingresa de urgencias, tras sufrir precipitación desde altura no determinada. Fuè atendido en la Ciudad Sanitaria "Virgen de las Nieves" de Granada, donde fue' diagnosticado de:
Fractura conminuta intraarticular de epifisis distal de radio derecho.
Fractura de la base del 2º metacarpiano de la mano derecha.
Esguince de ambos tobillos grado II.

2. **ANTECEDENTES ACTUALES** :

3. **EXPLORACION CLINICA** :

Consciente y orientado, no amnesia postraumatica.
EXPLORACION NEUROLOGICA: Normal. Glasgow 15 p.
AUSCULTACION CARDIO-RESPIRATORIA: Dentro de la normalidad.
ABDOMEN: Blando y depresible, no puntos dolorosos.
UROGENITAL: Normal
Dolor a la palpación de grofisis espinosas dorsales, discreta contractura de la musculatura paravertebral. Movilidad conservada.
Dolor e impotencia funcional de la muñeca derecha, deformidad y tumefacción de la misma.
Dolor e impotencia funcional del tobillo derecho, discreta tumefacción sobre maleolo peroneal. Dolor a nivel de ligamento peroneo astragalino anterior.
Dolor e impotencia funcional del tobillo izquierdo. Equimosis importante a nivel de maleolo tibial.

4. **RESUMENES ANALITICOS** :

VSG 1ª hora 14.
T. Hemorragia: 1.35 APTT 35.3 sg.
Hem 4.16 HCT 36.4.
AST 72

5. **INFORMES DE ESPECIALIDADES** :

CARDIOLOGIA: Dentro de la normalidad.

Medikuen txostena.

..STICOS :

..1 FRACTURA INTRAARTICULAR CONMINUTA DE EPIFISIS DISTAL DEL RADIO DERECHO
6.2 FISURA DE LA BASE DEL 2º METACARPIANO DE LA MANO DERECHA
6.3 ESGUINCE DE LLE DEL TOBILLO IZQUIERDO
6.4 PEQUEÑO ARRANCAMIENTO DE PALEOLO TIBIAL DEL TOBILLO IZQUIERDO
6.5

7. TRATAMIENTO REALIZADO :

Tras anestesia del foco de fractura, se practicò reducciòn e inmovilizaciòn de la muñeca derecha.
Inmovilizaciòn de ambos tobillos con botines de peso.
Analgesicos y antiinflamatorios.

8. EVOLUCION :

Los controles radiologicos tras la reducciòn han sido satisfactorios.
Favorable.

9. COMPLICACIONES :

Ninguna.

10. SITUACION ACTUAL Y TRATAMIENTO A SEGUIR :

El paciente permanecerà con las inmovilizaciones hasta que acuda a control en consultas externas de nuestro hospital.
AINES, si dolor.
Se le facilitarà un bastòn ingles para la deambulaciòn.

---

Solicita ser hospitalizado en : Centro de procedencia.

Fecha de ingreso: 6.3.93. Fecha de alta: 22.3.93.

Alta por: Mejoria clinica Se recomienda:SI

DEBE VOLVER: A consulta extrena de Traumatologia el 6.4.93.

Previa petición de cita: SERVICIO DE ADMISION DEL HGP

SERVICIO DE COT

Medikuen txostena.



MINISTERIO
DEL INTERIOR

DIRECCIÓN GENERAL
DE INSTITUCIONES
PENITENCIARIAS

SUBDIRECCIÓN MÉDICA
CENTRO PENITENCIARIO DE
JAÉN

Informe médico sobre José María Sagarduy Moja, emitido a petición del propio interesado.

Entre los antecedentes traumatológicos que constan en su historia clínica destacan:

- El 6 de marzo de 1993, tras precipitación desde altura, presenta fractura intraarticular conminuta de epífisis distal de radio derecho, fisura de la base del segundo metacarpiano de la mano derecha, esquince del tobillo izquierdo y pequeño arrancamiento del maleolo tibial del tobillo izquierdo. Necesitó de cirugía para reducir la fractura de la mano derecha y de inmovilización de ambos tobillos con botines de yeso.

- La fractura de la muñeca derecha se complicó con una subluxación del cúbito sobre el carpo en octubre de ese mismo año, al permanecer libre el ligamento anular del carpo, problema que al final no necesitó de cirugía

Én Jaén, a 28 de octubre de 2005.

Fdo: RMC (médico nº 72324) .

CORREO ELECTRÓNICO
Medico.Jaen@dgip.mir.es

Ctra. Bailén-Motril, Km. 28
23009 JAÉN

Medikuen txostena.



MINISTERIO DE JUSTICIA
DIRECCION GENERAL
DE
...UCIONES PENITENCIARIAS
... Penitenciario Sevilla 2

SERVICIO MEDICO

D. Jose Mª Sagardui Moja
presenta subluxación del cúbito en
carpo. dcho, necesita una
muñequera de presión

4-10-93

DIRECCION GENERAL DE ... C. P. SEVILLA ... SERVICIOS MEDICOS

Medikuen txostena.




Goiztiri jaio berria, amarekin (2000).



Gatza, Kontxa eta Goiztiririrekin, etxean (2000).




2007ko urtarrilean egitekoa zen presoen aldeko ekitaldi politikoaren aurkezpena. Idoia Muruaga, Igor Angulo kartzelan hildako presoaren neska-laguna, Xabier Izaga eta Santos Sagardui, Gatzaren aita.
ARGAZKILARIA: LUIS JAUREGIALTZO (FOKU).



Gatzaren gurasoak, "Gara" egunkariak 2010ean elkarrizketu zituenean.
ARGAZKILARIA: LUIS JAUREGIALTZO (FOKU).

Iritzia: ANTONIO ÁLVAREZ SOLÍS, PERIODISTA. El mantón y los flecos

# GARA

2011ko apirila OSTEGUNA 14

1,40 euro
www.gara.net

**La Fiscalía egipcia envía a prisión a Hosni Mubarak y a dos de sus hijos**

**Kutxen fusioak hirugarren postuan jarriko dituela iragarri du BBK-k**

## Sagardui vuelve a Zornotza y agradece los 31 años de apoyo



El preso político vasco que más tiempo ha pasado en la cárcel salió de Jaén a las 9.05 y llegó a casa tras controles de Guardia Civil y Policía y el acoso final de la Ertzaintza

EDITORIALA

El futuro pasa por un escenario sin barrotes

## Cada candidato de Bildu firmará su compromiso en contra de la violencia



Gatza, ukabila gora, 31 urte igarota Jaengo espetxetik ateratzen.

ARGAZKILARIA: MONIKA DEL VALLE (ARGAZKI PRESS).




Gatza alaba besarkatzen, kartzelatik irten berritan.

ARGAZKILARIA: MONIKA DEL VALLE (ARGAZKI PRESS).




Gatza bere gurasoen etxetik agurtzen, kartzelatik irten zen egunean (2011).
ARGAZKILARIA: MARISOL RAMIREZ (FOKU).



Ezkerretik eskubira, Juan Mari Igarataundi, Gatza eta Ione Lazkoz preso ohiak "Gara" egunkariaren egoitzan, 2013ko urrian Estrasburgoko Giza Eskubideen Tribunalak Parot Doktrinari buruzko ebazpena eman zuenean. ARGAZKILARIA: JON URBE (FOKU).

## EPILOGOA

Kontakizun trinkoa. Adjektibo bakar batera biltzekotan, gordina esan beharko genuke. Trinkoa ere bada, ordea, bere laburrean, eta trinkoa litzateke, hala berean, mila orrialde balitu, nekez jasoko bailituzke 31 urteko bizipenak, bizipen gordin eta trinkoak. Edonola ere, ez da hori izan Jose Mari Sagarduiren asmo nagusia, lehen lerroetatik ohartarazten duenez: «Gauza guztien gainetik, nik kartzelan izan ditudan sentsazioak aurkituko ditu irakurleak». Oinazea sumarazten duten pasarteak dira, mina eta amorrua, baina haietan samurtasuna eta inoiz umorea ere ez dira falta.

Film baterako moduko ihes saioa kontatu digu; hala ere, ez du hori, nire ustez, xede nagusia izan, bere aukeraren berri ematea baizik. Horrek azal lezake zergatik kontakizunean ez den gorroto hitzik agertzen. Izan ere, hondoa jo zuen eguna zazpi urte geroakoko egun berberak ordeztu zuen bere oroimeneko lehentasunezko txokoan. Ondo gogoan du 1993ko martxoaren 6a, kartzelako harresiaren parean hankak eta besoak apurtuta, kartzeleroek eta guardia zibilek jipoituta amaitu zuen saio hark kale egin zueneko eguna, kalera egin ez zueneko eguna alegia: «Isolamenduko zelda batean utzi ninduten. Egoera animikoaz ez arduratzerainoko mina sentitu nuen han, bakartuta. Askatasuna, bizia bera galduta neukala pentsatzen nuen, eta nire ardura bakarra mina desagertzea zen». Baina egun horren zazpigarren urteurrenean sendagai miragarria heldu zitzaion, 2000ko martxoaren 6an alaba jaio eta Gatza zaldi berdea bihurtu zenean.

Ez dakigu denbora falta edo zer dela-eta, ez dio inori kargu hartzen, ezta etsaiari ere. Interes falta. Nonbait ere, arreta etxekoengan eta lagunengan ipintzearen ondorio. Barruan, ihesean nahiz deportazioan daudenak, hildakoak, haietako asko berak ezagun eta lagun zituenak, etengabe ageri dira lerro hauetan, etengabe haren gogoan. Ez du adjektibo askorik erabiltzen, nahi duenak jar ditzan utzita edo; ez du inor epaitzen, beharbada epaile askoren erabakien mende eta epailerik gabeko epaiketa askoren mende bizi izanaren ondorioz. Hori bai, gauzak eta pertsonak beren izenez aipatzen ditu: borroka kidea, burkide; laguna, lagun; kartzelako zaindaria, kartzelero; etsaia, etsai.

«Libertatia nola baita gauzetako hobena/ Gathibutan egoitia hala pena gaizena». Kartzelarik zapaldu ez duen edonork ere ulertzen du nabarmentasun hori, are hobeto Bernat Etxeparek, bere larruan jasan zuenez gero. Ondo asko zekien hori Sagarduik ere hiru hamarkadako gatibualdiaren ostean, bere kartzelaldiaren amaiera aldera erabaki baitzuen bere lekukotasuna idaztea. Eta gatibualdian, hain zuzen, pena gaitzenean aurkitu zuela askatasuna diosku, aske dagoen inork nahiko ez lukeen askatasuna, inondik ere; baina askatasuna paradoxikoa izan ohi da. Batzuek besteen askatasuna murriztuz handitzen dute berena; Sagarduik askatasunik ezean aurkitu zuen: «Bakartu egingo zaituzte, esku-lanak egiteko tresnak kenduko dizkizute, are bizarra egiteko eta garbitzeko tresnak ere eta goizeko tarte batean baino ez dizute erabiltzen utziko... Harik eta momentu batean ez daukatela zuri ezer gehiago kentzeko, ez daukatela ezer gehiago debekatzerik konturatzen zaren arte. Orduan zeure buruaren jabe zara. Ez zaude haien menpe».

Eta, bai, aurkitu ditugu asmo epikorik batere gabe deskribitu dituen sentsazio asko, bertatik bertara jasandako egoeretako sentipenak. Horietako bat nabarmentzearren, teilatuko zulotik atera zen momentukoa, aske izan zen momentu hartakoa: «Gaur balitz bezala gogoratzen dut zelan zirimiria egiten hasia zegoen, baita haizea ere. Bete-betean jotzen ninduen Alpujarrako haizeak. Haize garbi eta zuzena, ez baitzuen kartzelaren inongo harresirik jotzen. Aske egonda dakizu haize hori egiazkoa dela». Pentsa liteke aire hura patioko bera zela, baina ez, ez zen aire bera. Espetxean guztia da Carabanchelgo mutineko ke beltz hura bezain zikina.

**Xabier Izaga**

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
FERNANDO ALONSO. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
SEGAPOTO KOLEKTIBOA. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
JOSEBA ARREGI. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
JOXE BLANCO. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
JUAN LUIS MUGERTZA. *2005.*

**Azeri gosetia**
KEPA ETXEBARRIA. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2006.*

**Claude Gueux**
VICTOR HUGO (ITZULPENA: ZORION ZAMAKOLA). *2007.*

**Zimaren abenturak**
BELEN GONZALEZ / KEPA ETXEBARRIA. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
URTZI ZUBIZARRETA. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
MAHAI–JOKOA. ZORION ZAMAKOLA. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
IÑAKI OJEDA. *2009.*

**Preso nago**
MIKEL ORBEGOZO. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
MIKEL ANTZA. *2011.*

**Espetxetik at**
BORXA URBERUAGA. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi naiz**
IBON MUÑOA. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
MIKEL ANTZA / IKER MORENO. *2012.*

**Fakin xokona**
OIER GOITIA. *2012.*

**Sasian barna**
XABIER MAKAZAGA. *2012.*

**Preso nago 2**
MIKEL ORBEGOZO. *2013.*

**$Z^2$**
MIKEL ANTZA. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
JOKIN URAIN. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
IBON MUÑOA. *2014.*

**Urte ilunak**
NELSON MANDELA (ITZULPENA: EKAITZ SIRVENT). *2014.*

**Ilargiraino!**
MIKEL ORBEGOZO. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
JOSEBA ARREGI. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Kuku erlojua**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Haizea**
HAINBAT EGILE. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
Ibon Muñoa. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
Jexuxmari Zalakain, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
Kepa Etxebarria. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
Ibon Muñoa *2017.*

**Errezel berdeak**
Jexuxmari Zalakain. *2017.*

**Txori mezulariak**
Joseba Erostegi 'Eltzikorta' / Lorea Erostegi Fernandez. *2018.*

**Hamaika desio utopiarako**
Ibon Muñoa. *2018.*

**Egia baten egunerokoa**
Oier Goitia. *2018.*

**Gure memoria, gure historia**
Ibon Muñoa. *2019.*

**Basatza**
Hodei Ijurko Irotz. *2019.*

**Amonaren ipuin magikoak**
Joseba Erostegi / Lorea Erostegi. *2019.*

**Zaldi Zoro**
Mari Sandoz (itzulpena: Aitor Fresnedo Gerrikabeitia). *2020.*

**Gure Ama-Lur feminista da**
Ibon Muñoa. *2020.*

**Órale, compadre... ¡Nos vemos en Iparralde!**
Arantza Eziolaza Galan. *2021.*

**Urrun da zeru urdina. Ataramiñe 2002-2022**
Euskal Errepresaliatu Politikoak. *2022.*

**Zaldi Berdea**
Jose Mari Sagardui Moja «Gatza». *2022.*

**Barruan**
Gartxot. *2022.*

Ihes egiteko leku aproposean idatzi zuen Jose Mari Sagarduik narrazio hau, kartzelan ia 31 urte zeramatzala, ordu arte saiatu gabe zuen hanka egiteko moduari helduta, betiere kaleko askatasuna eta bertako eta barruko lagunak gogoan. Hiru hamarkadan hainbat aldiz saiatu zen ihes egiten, eta haietako batean erreka jo zuen. Ez zuen erraz ahaztuko egun hura, eta une batez askatasuna usaintzeko bide eman zion saio haren berri ematea erabaki zuen, beraz, batez ere zulo ilun eta beti urrun haietan izandako sentipenak, milaka euskal herritarren sentipen direnak, harresietatik kanpo barreiatzeko asmoz. Gogoak denboran aurrera eta atzera eginez, bertatik bertara bizi izandako hainbat gertakari ezagunen eta hamaika pasadizo ezezagunen berri ematen digu narrazio gordin bezain hunkigarri honetan. Bereziena, Granadako espetxean huts egin zuen ihes saioaren zazpigarren urteurren eguna, Gatzaren alaba jaio eta Zaldi Berdea sortu zenekoa.



**atara**miñe

**www.literaturakoadernoak.org**